LEHEN EDIZIOA
*L'insurrection qui vient.*
La Fabrique, Paris, 2007

TXALAPARTAREN LEHENENGO EDIZIOA
Tafalla, 2011ko urria



EDITORIAL TXALAPARTA E.M.L.
San Isidro, 35-1B
78. Posta kutxa
31300 Tafalla NAFARROA
Tel. 948 70 39 34
Fax 948 70 40 72
txalaparta@txalaparta.com
www.txalaparta.com

AZALA ETA BILDUMAREN DISEINUA
Esteban Montorio

HIRUGARREN ORRIKO IRUDIA
Oier Gonzalez Bilbatua

MAKETAZIOA
Monti

INPRIMAKETA
RGM
Igeltzera poligonoa, 1 bis, A1 pab.
48610 Urduliz - Bizkaia

ISBN
978-84-8136-625-9
LEGE GORDAILUA
BI. 2.734-11






# HITZAURREA

2005EKO URRIAN, PARIS INGURUETAKO Clichy-sous-Bois auzunean, polizia segika zuten bi gazte hil ziren elektrokutatuta. Ustekabeko heriotzak, bazter-auzoekiko politika jakin baten enegarren albo-biktimak, sutan jarri zituen frantziar bazter-auzoak –*banlieu* ezagunak–. Aurrekaririk gabeko oldarraldi hark sekulako zalaparta eragin zuen Frantzian.

Gertakizun horixe dauka abiapuntu *Heldu den matxinada*k. Auto pribatuak nahiz eraikin administratiboak amorrazio ezezagunez kiskaltzen aritu ziren gazteek paradigma moduko bat osatzen dute, liburu hau sinatzen duen «batzorde ikusezin» misteriotsuarentzat. Izan ere, «alferrik da aldarrikapen edo mezu jakinik gabeko oldar mehatxagarri hark azaleratu zituen ebidentzia pila estaltzen ahalegintzea, hain zuzen, politikari

ez, baizik eta politikoei ezaxola. Itsua behar du *politikaren* ukazio irmo horren izaera politiko garbi-garbia ikusten ez duenak; itsua, edo zeharo ezjakina, hogeita hamar urteotako gazte mugimendu autonomoei dagokienez behintzat».

Askotxo iruditukо zaio irakurleari, lehen begiratu batean, egun gutxitako kale-istilu xumeoi paradigma iriztea. Normala da. Jakin behar da, ordea, Frantzian, auzo txiroetako biztanleen «integrazioa» egitura politiko osoa kolokan jartzen duten arazoetako bat dela. Baina ez gara ur horietan sartuko. Egungo egoera sozialaren erakusle soil gisa hartuta ere, derrigorrezkoa da galdera: zer ari da gertatzen? Horra, gutxieneko intuizio eta sentikortasuna galdu ez dugunok gure buruari egunero egiten diogun galdera: zer kristo ari zaio gertatzen mundu honi?

Txileko gobernu sozialdemokratak soldaduak bidaltzen ditu lurrikarak deuseztatutako eremuetara, ez kaltetuei laguntzera, baizik dendak olde gosetietatik babestera. Bitartean, interes pribatuen harrapaketaren aurrean beren lurren defentsan ari diren indigena maputxeei Pinocheten lege antiterrorista aplikatzen die, ekintzaile anarkistei bezalaxe. Negozioak agintzen du mundu osoan, gudaz konkistatzen dira merkatu berriak, eta salbuespen legediz mantendu. Nonahi. Israelek gizadiak inoiz ezagutu duen kontzentrazio esparru handiena bilakatu du Palestina, es-

painiar ereduan inspiratuz besteak beste. Espainiako Estatua eredu baita gizarte zibila inpunitate osoz jazartzeari dagokionez, sekula inork egin ez duena egiten *ausartzeari* dagokionez. Honezkero, horrorearen mugak susmatu ere ez ditugu egiten.

Politikaren molde burges klasikoen agorpena gertatu dela edonon dago agerian. Demokraziarenak egin du. Botere ekonomikoak gainerako botere guztiak bahitu ditu: legegilea, exekutiboa, judiziala, mediatikoa. Herritarren botere instituzional erreala hezurretan geratzeraino argaldu da, ihartuta, ezereztatua. Herri-kontrol orotatik kanpo eratutako nazioz gaindiko erabakiguneek gobernatzen dute mundua, aberatsen nahierara egin eta deseginez, eraiki eta suntsituz, bere garro hiltzaileak planeta osora hedatuz.

Nahiago genuke hala ez izatea, itxaropenari eutsi nahiko genioke, sinetsi gure askatasunaren prezioa ez dela kartzela, heriotza eta oinazetan neurtzen. Irtenbide zibilizatu bat nahiko genuke, irtenbide sozial bat: kapitalismoa erregulatu, birmoldatu, tasa sozial hainbat behartu, boterea instituzioen bidez demokratizatu, humanizatu. Baina, bai zera!

Gero eta nekezago suertatzen da demokrazia neoliberaletan oposizioaz hitz egitea. Demokrazia esaten dioten antzerki makabro honetan, opo-

sizio homologatuak aktore nagusiari erreplika besterik ez dio egiten. Ikuskizun negargarri, izugarri mediokre eta gustu txarrekoa bihurtu dute sistema parlamentarioa. «Neoliberalismo garailearen sudur faltsua» da Daniel Bensaïdentzat demokrazia, eta Giorgio Agambenentzat, «salbuespen egoera permanentearen itxura faltsua». Europan, gaur, une honetantxe, oposizio erreala terrorismotzat jotzen da. Azken urteotan zizak bezala ugaldu diren legedi antiterroristek zedarritzen dute oposizio errealari ekiteko geratzen zaion zirrikitu gero eta txikiagoa. Euskaldunok puska bat badakigu horretaz.

Mundua hondamendirantz doa, eta saiakera honen egileen ustetan, kontua ez hondamendia geraraztea, baizik eta bizkortzea, hondamendiaren ahalmena profitatzea, hondamendia eragin dutenak eta beren sistema ordezkatzea zerotik hasiz, guztia berregiteko. Eta horretarako, iraultzaren molde agortuak ere alboratu behar dira, bereziki erakundeak. Izan ere, «antolatzea ez da ezintasunari egitura bat ematea». Are gutxiago gizartearen beraren gaitzak erreproduzitzen dituen egitura bat. Ur tanta batek bere bihotzean ozeano guztiak gordetzen dituen bezala, zeinahi ekinbidek, zeinahi moldek bere baitan darama azken helburua.

Gisa berean, sistema hau ezin izanen litzateke inongo irtenbidez erditu. Kasu iruzurrei. Batik bat, ekologiaren iruzurrari, kapitalismo berdeari. Sinetsarazi nahiko ligukete hondamendia eragin dutenak soluzioak pentsatzeko gauza direla, konfiantzarako tarte bat badagoela, eurak ere jabetu direla akatsez, urontzi berean gaudela denok, helburu berak ditugula. Baina ez. Ez dago konpromiso posiblerik. Ukoak erabatekoa behar du.

Hauxe da irakurleak saio honetan aurkituko duena: sistema menperatzailearen uko erabatekoa, sakona, xeheki eta estilo dotore batez arrazoitua. Ez dezala inork pentsa hala moduzko eskuorri bat daukanik begi aurrean. Ez eta ezeren tesi definitiboa, edota mundu petral honen metafora totala ere. Hipotesi bat dela esan genezake, munduaren irakurketa filosofiko, politiko, teoriko, praktiko, argi, ikonoklasta, heterodoxo eta gaurkotu bat, handikeriarik gabe baina eutsiezineko pasio kutsagarri batez idatzia.

Aldi berean, basakeriaren areagotzeari eta politikaren amaierari buruzko diskurtso errotik ezkor nahiz zinikoki buruargi ohikoekin hausten duen lana da hau. Analisi bakoitzaren baitan, ekintzari heltzeko perspektiba bat zabaltzen digu. Zer egin gaur, denbora presente honetan, egoera zehatz honetan. Nola borrokatu. Testu honek afera politikoa ekintzari lotuta irudikatzen baitu, zutabe be-

rrietan oinarrituta betiere: auto-antolakuntza, koordinakunderik gabeko koordinazio askea, eraginkorra, eta guztiaren bihotzean, Komunaren ideia.

«Errealitate partisanoaren oinarrizko unitatea da Komuna»: egungo gizartearen antipodetan legokeen antolamendu unitate basikoa. Egungo gizartea: diziplina, kontrola, ordena, obedientzia, azpiratze otzana, doi-doi neurtua, arbitrarioa, burugabea, neurotikoa, zoroa, atzeraezina, erabatekoa. Hondamendi gobernagaitza. Izan ere, nola gobernatu hirurogei milioi bizilaguneko herrialde bat? Eta hiru milioikoa? Ba ote dago autogobernuaz besteko gobernu zuzen posiblerik? Eta, ba ote dago sistemari oposizio efektiboa egiteko modu hoberik, gobernatzeko beste modu batzuk gaurgero jorratzea baino? Ezin ote gara *de facto* gobernaezin bilakatu? Horretarako deia da *Heldu den matxinada,* hain zuzen, Foucaultek *erabilgaiztasun boluntarioa* deitzen zuena jorratzeko deia.

Komunak? –harrituko da bat baino gehiago–. Zer txantxa klase da hori? Bazter ditzala aurreiritziak, ez da-eta txantxa bat. 2008ko azaroan, frantziar poliziaren interbentzio taldeek Tarnac izeneko herrixkan zegoen komuna autogestionatu bati eraso zioten goizeko ordu txikitan, eta zortzi gazte atxilotu zituzten. SNCFren aurkako

hainbat sabotaje ekintza leporatu, eta inolako frogarik gabe kartzelatu zituzten, «terroristak» zirelakoan. Akusazioa justifikatzeko, euren bizimoduaren xehetasunak eman zituzten, gauza arras susmagarriak: komuna moduko bat osatzen zuten Frantziako ipurtzuloan –Tarnacen!–, azenarioak landatzen zituzten, herra zieten telefono mugikorrei, halako edo holako manifestaziotan parte hartu zuten... Hitz batean, sistemaren morrontzatik libre-edo bizi ziren, eta horrek, terroristak zirela frogatzeaz gain, kartzelatzeko beharra azaltzen zuen. Haietako bati, taldeko burua omen zen Julien Coupat izenekoari, eskuartean daukazun *L'insurrection qui vient* saiakera idatzi izana ere egotzi zioten.

Komunikabideek, aurreneko egunetan, Barne Ministerioaren bertsioa ontzat ematearen ohiko aldapa ibili zuten (*Libération* egunkariaren azaroaren 12ko titularra: *L'ultra-gauche dérraille*), baina senitartekoen mobilizazioei esker eta, batez ere, froga gabezia nabarmenengatik, harrotuz joan ziren hautsak, hainbeste non Alliot-Marie anderea eta bere oinpekoak (edo alderantziz?) ipurdi-bistan geratu baitzen.

Testuinguru horretan, hainbat pentsalarik manifestu bat plazaratu zuten, *Non à l'ordre nouveau* izenekoa. Tartean ziren Alain Badiou (*Heldu den matxinada*k asko zor dio Badiouri), eta *ezker ko-*

*herentea* osatzen duten beste hainbat: Jacques Rancière, Daniel Bensaïd, Slavoj Zizek, Giorgio Agamben, Jean-Luc Nancy... Manifestu honek ere eragin zuen bere polemika, Alain Brossaten *Tous coupat!* saiotxoan mamitu zena. Manifestuaren epelkeriak espantatu zuen Brossat, nolabait, estatu demokratikoaren alde, eta salbuespen eta basakeriaren aurka egiten zuelako, salbuespena eta basakeria horiek demokraziaren berezko elementuak izango ez balira bezala.

Bestetik, baina zentzu berean, akusatuen errugabetasuna azpimarratzea deitoratzen zuen, (ohiko kalaka homologatzailea), alegia, elkartasun politikoa, ideologikoa eta filosofikoa faltan hartzen. Hartara *guztiok errudun!* aldarria. Irakasleek huts egin digute –zioen–. «Argi eta garbi esan behar da –eransten zuen–: askatasun publikoen degradazioak, salbuespen erregimenaren ugalketak, hauxe eragiten du: *horrela eta jende horrek gobernatuta* izateari uko egiten dion oro ilegaltasunean kokatua izatea, eta modu kontsekuentean erreprimitua. Horra Tarnac aferaren lehen ikasgaia: ez dela hutsegite bat, abusu bat, baizik eta arau berri honen zorroztasunaren agerpen bat».

Ondorioztatzeko, orobat, euskaldunok hamaika bider ondorioztatu duguna, alegia, *gure gobernatzaileen hiztegi eta eskemak balioztatzeak gobernu horrexek arau legitimo gisa ezarri dituen eta*

*salbuespen egoera elikatzen duten arauak onartzearen hasiera baino ez dela*. Humberto Ecoren *Arrosaren izena* eleberrian bezala, mingaina zikintzen duenak barrunbeak ere pozoitzen ditu.

Zer geratzen da zalaparta guzti hartatik? Gauza handirik ez, egia esatera. Baina inork erantzun badio egungo krisi ekonomiko ospetsuari, inork hartu badu haustura agerrarazteko ardura (eta orain ez bada unea, noiz izango da?), aitortu beharra dago, ezker klasikoa baino, liburu honetan formulatzen den erresistentzia subjektibotasun «berri» horren protagonistak izan dira. *Heldu den matxinada*k azalarazitako paradigma izan da Greziako kaleak hartu dituena, «edo zuek edo gu» gudaoihua ahotan eta, batez ere, asmo bera ekintzetan.

Izan ere, «ez du balio *itxoitea*k –argitzea, iraultza, apokalipsi nuklearra edo zeinahi mugimendu sozial–. Itxoiten jarraitzea erokeria da. Katastrofea ez da datorrena, hemen duguna baizik. Zibilizazio baten erorketaren *baitan* gaude honezkero. Erabaki bat hartzeko unea iritsi da. (...) Ezerk ez dirudi matxinada bat baino gertagaitzago, baina ezer ez da beharrezkoago».

ZIGOR GARRO PEREZ
Fresnes, 2010eko uztaila.

# EGUNERATZEA

MUNDU GUZTIA BAT DATOR. Hau lehertu egingo da. Parlamentuko korridoreetan ados daude, itxura serio nahiz handiputzez, bart tabernan errepikatu dugun bezala. Arriskuen kalkulua egiten laketzen gara. Lurraldearen kontrol operazio prebentiboak zehatz-mehatz ikus daitezke jadanik. Urtezaharreko ospakizunek ere traza erabakigarria hartu dute. «Ostrak egongo diren azken urtea izango da!». Desordenaren tradizioak ez dezan festa erabat lausotu, 36.000 polizia eta hamasei helikoptero beharko dira, Alliot-Mariek berak igorrita, zeinak abenduko ikasleen manifestazioak ikara batean pasa zituen, greziar kontaminazio zeinurik txikienaren zelatan. Gero eta argiago entzuten ditugu, hitz lasaigarrien azpian, guda ireki baten prestakuntza hotsak. Inork ez liezaioke entzungor egin guda horrexen abiatze

iragarri, hotz eta pragmatikoari. Baketze operazio gisa aurkezteko lanak ere ez dituzte hartzen jadanik.

Egunkariek bat-bateko kezkaren zergatien zerrendak prestatzen dituzte, artatsu. Batetik, jakina, krisia dago, bere langabezia lehergarriarekin, bere etsipen sortarekin, bere plan sozialekin, bere Kerviel edo Madoff eskandaluekin. Bestetik, eskola sistemaren gainbehera dago: ez da langilerik ekoiztera iristen, ezta hiritarrik kalibratzera ere, nahiz klase ertaineko haurretatik abiatu. Ordezkaritza politikorik gabeko gazteri horren ondoeza legoke hirugarrenik. Baina, hain da ezgauza gazteri hau, non dohainik eskaintzen zaizkion bizikleten aurka sutan diren autoak botatzeko besterik ez duen balio.

Aitzitik, kezka hauek ez lukete zertan gaindiezin izan, justuki, nagusi den gobernu modua krisi egoerak kudeatzean datzan garaiotan. Ez bada kontuan hartzen, behinik behin, gobernuak aurrean daukana ez dela krisi bat gehiago, ezta arazo kroniko bat edota desdoitze gutxi gorabehera aurreikusgarri batzuen segida ere, arrisku berezi bat baizik: kudeagarriak ez diren gatazka modu edo posizioen agerpena, hain zuzen ere.



Arrisku hau osatzen dutenek, arrisku hau *direnek*, nonahi daudela, auzi serioagoak dauzkate eskuartean, nahi eta nahi ez eman emango diren mugimendu eta enfrentamenduen inguruko arrazoi eta probabilitateak baino. Besteak beste, ondorengoa. Zer-nolako oihartzuna dauka greziar kaosak egoera frantsesean? Matxinada bat, hemen, ezin da han gertatu denaren transposizio sinple baten moduan pentsatu. Mundu mailako guda zibilak ezaugarri lokalak dauzka oraindik orain, eta altxamendu egoera orokor batek beste neurri bateko leherketa eragingo luke Frantzian.

Greziar matxinoek, onarpen zabala izateaz gain, gobernu ahul bat izan dute aurrez aurre. Ez da ahaztu behar, gainera, biolentzia politikoaren praktikatik abiatuz berrosatu zela han demokrazia, koronelen diktaduraren aurka, orain justu hogeita hamar urte. Oroimenean oso urruti ez den biolentzia hark ebidentzia bat dirudi oraindik greziarren gehiengoarentzat. Bertako PSren jauntxoek ere dastatu zuten molotov koktela beren gaztaroan. Ostera, politika *klasikoak* baditu praktika hauetara moldatzen abilak diren aldaerak, bai eta bere txorakeria ideologikoak altxamenduraino zabaltzen dituztenak ere. Greziar bataila ez bazen kalean erabaki eta amaitu –poliziari nabarmen gainez eginda ere–, horrek esan nahi du beste tokiren batean indargabetu zela.

Ez dago ezer nekagarriagorik, zorigaiztokoagorik, *politika klasiko* hori baino, bere erritu idortuekin, pentsatzen ez duen bere pentsamenduarekin, bere mundu txiki eta itxiarekin.

Frantzian, gure burokrata sozialista sukartsuenak ez dira sekula asanblada-infiltratzaile eta arduradun ozpinduak besterik izan. Hemen, denak egiten du bat, intentsitate politikoaren formarik txikiena deuseztatzeko. Horrek zilegi egiten du hauslea eta hiritarra etengabe kontrajarri ahal izatea. Bai eta hondorik gabeko biltegi batetik fikziozko oposizioak ateratzea ere: erabiltzaileak grebalarien aurka, blokatzeen kontrakoak bahitzaileen aurka, jende prestuak jendailaren aurka. Operazio kasik linguistiko hau neurri kasik militarren eskutik doa. 2005eko oldarraldiak eta, testuinguru desberdin batean, 2007ko udazkeneko mobilizazio sozialek prozedura horren adibide batzuk ematen dizkigute. Nanterreko grebaren aurkako ikasleen irudiek, beren ikaskide grebalariak kanporatzen ari ziren poliziei txaloka, «aurrera urdinak!» oihukatuz, etorkizunak gordetzen digunaren ikusmira txiki bat ematen digute.

Esan beharrik ez, frantsesen Estatuarekiko lotura –Estatua, balio unibertsalen bermatzaile, hondamendiaren aurkako azken gotorleku–, sendabide zaileko patologia da. Nola iraun ez dakien fikzio bat da, batez ere. Gure gobernariek beraiek

ere alferreko trabatzat daukate gero eta gehiago, zeren eurek, gutxienez, gatazka bere gain hartzen dute militarki. Halako moduan non inolako konplexurik ez baitute eliteko unitate antiterroristak igortzeko, hala bazter-auzoetako oldarraldiak zapaltzera, nola langileek okupaturiko sailkatze-gune bat askatzera. Probidentzia Estatua pitzatu ahala, Ordena desio dutenen eta Ordena gehiagorik nahi ez dutenen arteko enfrentamendu gordina azaleratzen da. Frantziar politikak orain artean indargabetu ahal izan duen guztia lehertzen hasia dago. Zapaldu duen guztitik, ezer ez da atzera berriro altxatuko. Gizartearen usteltze maila aurreratuan, heldu den mugimenduaren gainean konta dezakegu beharrezko bultzada nihilista aurkitzeko. Nahiz eta bultzada horrexek berak beste muga batzuen aurrean paratuko duen, delako mugimendua.

Mugimendu iraultzaile bat ez da kontaminazioz hedatzen, baizik eta oihartzun bidez. Hemen eratzen denak han eratutakoak igorritako talka-uhinarekin durundatzen du. Durundatzen duen gorputzak bere moduaren arabera egiten du. Matxinada bat ez da izurrite bat edo baso-sute bat bezala zabaltzen –hasieratik txinparta batetik abiatuta–, bertatik bertara hedatzen den prozesu lineal bat. Doinu baten moduan gorpuzten den zerbait dela esan genezake, eta haren he-

datze-guneek, denboran eta espazioan sakabanatuta ere, beren dardararen erritmoa inposatzea lortzen dute. Aldiro, trinkotasun handiagoa hartzea. Halako moduan non normaltasunera itzultzeak desiragarri izateari uzten dion, baita aurreikustekoa izateari ere.

Inperioaz ari garelarik, egoera baten bilakaera iraultzaile guztiak prebentiboki, kirurgikoki eusten dituzten botere-dispositiboez ari gara. Halaz, inperioa ez da aurre egiten digun etsai bat. Inposatzen den erritmo bat da, errealitatea eraldatu eta jariatzeko modu bat. Ez da beraz horrenbeste munduaren ordena bat, baizik bere jario triste, pisutsu eta militarra.

Matxinoen alderditik entzuten duguna, berriz, errealitatearen oso bestelako *konposizio* baten, bestelako aurpegi baten zirrimarrak dira, zeinak, Greziatik frantses bazter-auzoetaraino, bere loturak bilatzen baititu.



Dagoeneko ezagun da krisi egoerak dominazioari bere burua berregituratzeko eskaintzen zaizkion beste horrenbeste aukera ere badirela. Honela, Sarkozyk iragar dezake, gezurretan ibiltzearen itxura handiegirik gabe, finantza-krisia «mundu baten amaierari» dagokiola, eta 2009. urteak Frantzia

aro berri batean sartzen ikusiko duela. Krisi ekonomikoaren txantxa, beraz, berrikuntza bat litzateke. Epopeia berri baterako okasioa, zeinak denak bilduko baikintuzke, eskuz esku, desberdintasunen eta, bide batez, klimaren berotzearen aurkako borrokan. Krisian jaio, eta besterik ezagutu ez duen gure belaunaldiarentzat –krisi ekonomikoa, finantza-krisia, krisi soziala, ekologikoa– nekeza baino nekezago suertatzen da, onartuko duzuenez, halakorik sinestea. Ez digute berriro krisiaren ziria sartuko: «zerotik abiatuko gara», «nahikoa izango da denbora batez gerrikoa estutzea», etab. Egia esatera, langabeziaren zifra ezin txarragoen iragarpenak ez digu aparteko sentimendurik eragiten. Gobernatzeko manera bat baino ez da krisia, mundu honek, itxura batera, bere porrot propioaren kudeaketa infinituari esker soilik eusten dionean.

Estatuaren atzean ikusi nahi gintuzkete, *mobilizatuta*, solidario, halako soluzio sozial troskoilo eta gertagaitz batekin. Baina, hainbesteko nazka ematen digunez bertan, mobilizazio horretan, konprometitzeak, oso litekeena da aurkako erabakia hartzea, kapitalismoa betiko eraistea alegia.

Gudan daudenak ez dira gizartea kudeatzeko manera aldagarriak, baizik eta, modu atzeraezin eta bateragaitz batez, zoriontasunaren ideiak eta ideion munduak. Botereak badaki, guk ere bai. Aldiro ugariago, aldiro identifikagaitzago ikus-

ten gaituzten hondakin militanteak etsituta dabiltza, alferreko ahaleginean beren buru txikien laukitxoetan sar gaitezen.

Alabaina, hobeki itotzeko luzatzen dizkigute besoak; beren porrotez, beren paralisiaz, beren problematika txoroez itotzeko. Hauteskundeetatik «trantsizioetara», komunismoaren aukeratik aldiro gehiago aldentzen gaituztenak besterik ez dira. Zorionez, ez gara luzarorako egokitzen traizioetan, ezta dezepzioetan ere.

HONELA, EZ DAGO AUKERATU BEHARRIK:

| | | |
|---|---|---|
| bat-batekotasunaren fetitxismoa | EDO | erakundearen agintea |
| sare militanteen brikolajea | | hierarkiaren barita |
| ekin etsipenez orain | EDO | gero etsipenez itxaron |
| urruntzearen urruntzeaz infernu baten traza hartzen ari den paradisuaren izenean, parentesi artean jarri orain eta hemen bizi eta esperimentatzeko dagoena. | | Amesgaizto honetatik ateratzeko azenarioak landatzearekin aski izango zaigula sinestearen sinesteaz hilotza murtxikatzen ibili. |

HAUTAKETA DESEROSOA.

Erakundeak, antolatzeko oztopo dira. Egiazki, ez dago tarterik, garenaren, egiten dugunaren eta bilakatuko garenaren artean. Erakundeak –politiko nahiz sindikalak, faxista nahiz anarkistak–, existentziaren alderdiok praktikoki bereizten hasten dira beti. Ondoren, adeitasun handiz, beren formalismo estupidoa aurkezten digute, bereizketa horretarako erremedio bakar gisa. Antolatzea ez da ezintasunari egitura bat ematea. Antolatzea, lehen lehenik, loturak sortzea da, neutroak ez diren loturak, lotura izugarri bideratuak. Partekatze material *eta* espiritualaren intentsitateaz neurtzen da antolakuntza gradua.

Oraindanik beraz: «Irauteko, materialki antolatu; erasotzeko, materialki antolatu». Gutxi-asko, edonon komunismoaren ideia berri bat landu dadila. Taberna, inprimategi, etxe okupatu, ezkaratz, baserri zein gimnasioen itzalean, konplizitate iraingarriak jaio daitezke. Konplizitateok, ustekabean, halako eite sendoago bat ematen diote munduari. Kidetasun baliotsu horiei ezin zaizkie ukatu bere indarren hedapenerako eskatzen dituzten baliabideak .

Hortxe kokatzen da garaiotako aukera zinez iraultzailea. Gero eta sarriago gertatzen diren liskarrak horrexegatik dira beldurgarriak, tankera honetako konplizitateak sortzen dituztelako aldiro, batzuetan iragankorrak, baina beste batzue-

tan betierekoak ere. Metatze prozesu moduko bat dago hor, duda barik. Milaka gaztek mundu hau desertatu eta saboteatzea erabaki duten unean, tematsu eta bihotzez, polizia bat bezain ergela behar du izan finantza-zelula, buruzagia edota arinkeria bilatzera jartzen denak.



Bi mendetako kapitalismo eta merkataritza nihilismoak arroztasun muturrekoenetara eraman gaitu, norbere buruarekiko, besteekiko, munduarekiko. Gizabanakoa, fikzio hori, erreal bilakatzen ari den abiada berberaz ari da deskonposatzen. Metropoliaren kumeok ondoko apustu hau egiten dugu: existentziaren biluzte sakonenetik abiatuta hedatzen dela, beti isildua, beti uxatua, komunismoaren aukera.

Finean, antropologia oso batekin gaude gudan, gizakiaren ideiaren aurka.

Komunismoa beraz, presupostu gisa eta esperimentazio gisa. Sentsibilitate baten partekatzea *eta* partekatzearen lanketa. Komunaren ebidentzia *eta* indar baten eraikitzea. Komunismoa, dominazioaren aurkako eraso xehe, ausart baten matrize gisa. Baketze inperialari aurre egiten dioten mundu guztien dei gisa eta berauen izen gisa, merkantziaren arauek menperatu ezin dituz-

ten elkartasun guztiena, gudaren beharra bere egiten duten kidetasun guztiena. KOMUNISMOA. Ez hitzen desfile handia modan ez legokeelako, baizik gure etsairik amorratuenek *higatu* egin dutelako, eta horretan diraute. Berriz diogu, komunismoa. Guda-zelai moduko zerbait dira hitz batzuk, eta, haien zentzua, garaipen bat, iraultzailea, halabeharrez borroka latz baten ondoren eskuratua dena.

Politika klasikoa desertatzeak gudaren beharra norbere gain hartzea dakar, zeina lengoaiaren eremuan ere ematen baita. Edo, hobe esanda, hitzak, keinuak eta bizitza lotzen diren modu bereiztezinean. Terrorismo hitzaren aitzakiapean, *Heldu den matxinada*ren idazketan parte hartu izana leporatuta, hainbat baserritar gazte komunista giltzapetzeko hainbeste ahalegin egin badituzte, ez da «iritzi delitu» batengatik izan, ekintza eta pentsamendua izate berean, batera, eusteko modua gorpuztu lezaketelako baizik. Eta hori ez dute barkatzen.

Jende horri leporatzen diotena ez da ezer idatzi izana, ezta metropolia garaztatzen duten fluxu sakro-santuen aurka materialki ekin izana ere, fluxu horien aurka ekin izana baizik, baina pentsamendu eta posizio politiko baten sendotasunaz. Ekintza batek, hemen, zentzua izatea, Inperioaren desertuaz besteko mundu-trinkotasun

baten arabera. Antiterrorismoak «gaizkile elkarte» baten balizko bilakaerari eraso egiteko asmoa izan du. Baina egoeraren bilakaera da zinez eraso dena. Adierazpen askatasunaren trastelekuan gorde ezin daitekeen politikaren ideia bat hedatzearen aukera, anonimoa dena baina elkartu litekeena, sakabanatua eta kontrolagaitza.

Duda txikienik ez dago jada, botereari basatiki ekiten aurrena gazteria izango dela. Azken urteok, Aljeriako 2001eko udaberriko oldarraldietatik hasita Greziako 2008ko negukoetaraino, horren abisu segida bat baino ez dira izan. Orain hogeita hamar edo berrogei urte beren gurasoen moralaren aurka altxatu ziren berberek ez dute aukera galduko guztia belaunaldi-gatazka batera, edo are, nerabezaroaren eragin aurreikusgarri batera murrizteko.

«Belaunaldi» baten aukera bakarra, antza, aurrekoa izatea da; modu atzeraezin batez hilerrira daraman bide batean.



Guztia «mugimendu sozial» batekin hastea nahi luke tradizioak. Batez ere, deskonposatzeari uzten ez dion ezkerrak, oso manera lirdingatsuan, kalean sinesgarritasun bat berreskuratzea bilatzen duen unean. Baina kalea ez da jada bere mo-

nopolioa. Ikusi besterik ez dago nola, ikasle-mobilizazio bakoitzean –oraindik babestera ausartzen den beste guztietan bezalatsu–, zanga gero eta sakonagoa zabaltzen den, ezkerraren aldarrikapen negartien eta mugimenduaren biolentzia eta determinazio mailaren artean.

Zanga hori lubaki bihurtu beharra daukagu.

«Mugimendu sozialen» pasaera begiratzen badugu, batak besteari ematen dion segida, konstatatu behar dugu zerbaitek iraun egiten duela, traza ikusgarririk uzten ez badu ere. Sutauts arrasto batek lotzen ditu, gertakizun bakoitzean, bide zuzenean sartzeari uko egiten diotenak, lege baten atzera-eraginaren edo beste edozein estakururen denborazkotasun absurduari uko egiten diotenak. Kolpeka, eta bere erritmoan, indar itxurako zer edo zer marrazten ari dela ikusten dugu. Denbora pairatu ordez, bere denbora isilka inposatzen duen indarra.

Ez da enfrentamenduak aurreikusteko tenorea, ezta aukera alegera demostratzekoa ere. Goiz ala berandu datozelarik, prestatuta egon behar gara. Kontua ez da matxinada bat izan beharko lukeenaren eskema egitea, baizik izateari sekula utzi behar ez zion horretara itzultzea: gazteriaren bizi-bultzada eta, hein berean, herri-jakituria. Mugitzen jakinez gero, eskema falta ez da oztopo, baizik aukera. Matxinoentzat, funtsezkoa

–iniziatiba gordetzea– berma lezakeen espazio bakarra da. Ondoren, eragitea da gakoa, mantentzea, su bat, begirada bat, sukar taktiko bat mantentzen den moduan, zeren horiek denak, sua, begirada, sukarra, unea iristean, oraintxe bertan, determinante suertatzen baitira, determinazio iturri konstante bat. Atzo bertan groteskoak edo gaindituta zirudien hainbat galdera agertzen dira berriro; horiei ongi heltzea geratzen zaigu, ez definitiboki erantzuteko, baizik biziarazteko. Galderok birplanteatu izana ez da, ez horixe, greziar altxamenduaren bertuterik txikiena:

Altxamendu egoera orokor bat nola bilakatzen da matxinada egoera? Zer egin behin kalea gureganatu ondoren, polizia iraunkorki gainditu ostean? Parlamentuak erasoz hartzea merezi ote du? Zer esan nahi du praktikan boterea lokalki kargugabetzea? Nola erabaki? Nola *biziraun*?

NOLA ELKAR TOPATU?

# EDOZEIN ALDETATIK...

EDOZEIN ALDETATIK BEGIRATUTA, orainak ez du irtenbiderik. Ez da bere dohainik txikiena. Itxaropenari oroz gainetik eutsi nahiko lioketen horiek, inolako heldulekurik gabe uzten ditu. Soluzioak eduki uste dituztenak, berriz, berehala zapuzten ditu, euren ustezko konponbideak gezurtatuz. Gauza jakina da egoerak txarrera besterik ezin duela egin. «Geroak ez du etorkizunik» leloak, erabateko normaltasunaren itxurapean, lehenengo punken kontzientzia maila erdietsi du gurean.

Ordezkaritza politikoaren alorra agortuta dago. Ezkerretik eskuinera, hustasun berbera aurkitzen dugu. Birjin plantekin nahiz jauntxo imintzioak eginez, erakusleihoetako maniki berdinak dira denak, eta komunikazio zerbitzuen azken aurkikuntzaren araberako mezu hutsal bertsua

darabilte. Bozka ematen tematzen direnek protesta hutsez bozkatzen dutela dirudi, ekinaren ekinez hautestontziak lehertu nahiko balituzte bezala. Susmatzen hasiak gara *botoaren beraren aurka* bozkatzen dutela. Agertzen zaigun ezer ez dago, ezta urrundik ere, uneak eskatzen duen mailan. Askozaz helduagoa dirudi herritargoak, isil-isilik, berau gobernatzeko ika-mikan dabiltzan txotxongilo horiek guztiak baino. Belleville aldeko edozein *chibani*k gure agintari –beren hitzetan– guztiek batera baino hitz burutsuagoak esaten ditu esaldi bakar batean. Iltzez eta giltzez itxia dago lapiko sozialaren estalkia, barruko presioak etengabe gora egiten duen bitartean. Baina Argentinatik abiatutako *Que se vayan todos!* mamua serio jazartzen hasia dago agintarien gogoa.

2005eko azaroko suteen[1] itzalak kontzientzia guztietan dirau. Aurreneko su-festa haiek promesaz beteriko hamarkada baten bataioa izan ziren. «Bazter-auzoak-Errepublikaren-aurka» ipuin mediatikoari ez zaio eraginkortasuna falta, egiazkotasuna, bai ordea. Metodikoki isilarazi bazuten ere, hiriguneetaraino zabaldu zen sua. Bartzelonako hainbat karrika ere erre ziren elkartasunez,

---

1. Poliziak jarraika zituztela, Moushim eta Larami gazteak istripuz hil ziren. Ondorioz, Parisko Villiers-le-Bel auzoan poliziaren eta gazteen arteko enfrentamendu larriak gertatu ziren. Frantzia osoko bazter-auzoetara zabaldu ziren erasoak.

baina bertako biztanleez aparte, inork ez zuen horren berririk izan. Gezur hutsa da, era berean, harrezkeroztik herrialdeak kiskaltzeari utzi diola. Suteengatik auzipetuak izan zirenen askotariko profilak egungo gizartearenganako gorrotoak batzen ditu, eta ez klase, arraza edo auzune berekoak izateak. Berrikuntza ez datza 1980az geroztik ezagunak diren «bazter-auzoetako erreboltan», baizik eta orain arteko formen hausturan. Erasotzaileek, honezkero, ez dute inor entzuten, ez anaia nagusiak, ez eta egoera bere onera ekarri beharko luketen tokian tokiko elkarteak. Oraingoan ez dago gertakariotan bere sustrai minbizidunak hondoratuko dituen SOS Arrazakeriarik. Asperdura, faltsutze eta *omerta* mediatikoekin itxurazko amaiera eman zaie, ez besterik. Baina gaueko kolpe, eraso, eta hitzik gabeko suntsiketa segida horrek alderik alde zabaldu zuen politikaren eta politikarien arteko arrakala. Alferrik da aldarrikapen edo mezu jakinik gabeko oldar mehatxagarri hark azaleratu zituen ebidentzia pila estaltzen ahalegintzea, hala nola, politika ez, baizik politikarienganako axola eza. Itsua behar du, *politikaren* ukazio irmo horren izaera politiko erabatekoa ez ikusteko; itsua, edo zeharo ezjakina, hogeita hamar urteotako gazte mugimendu autonomoei dagokienez behintzat. Ume okertuen itxurapean, gizarte doilor baten apaingarriak kiskali ditugu,

Parisko Aste Odoltsuaren[2] amaieran monumentuak erre ziren gisara. Gaurko gizarte honek, orduko monumentuek bezala, ez baitu begiramenik merezi, eta badaki.

Egungo egoerak ez du aterabide *sozialik* izango. Zeren, lehenik, ironiaz beteta eta esanahiez hustuta, «gizarte» deritzogun gune, instituzio eta burbuila indibidualen batuketa lauso honek ez baitu funtsik. Ondoren, ez dagoelako bizipen edo esperientzia komuna adierazteko hizkera jakinik. Eta guztiok hizkera bera hitz egin ezean, aberastasunak ere ez dira guztion artean banatuko. Frantziar iraultzaren aukera sortzeko, Argien inguruan borrokatu ziren mende erdiz. «Ongizatearen estatu» beldurgarriaz erditzeko, aldiz, mende oso bateko borroka behar izan zen lanaren inguruan. Borrokek sortzen dituzten hizkeretan mintzo dira ordena berriak. Baina ez da hori egun gertatzen ari dena. Europa kontinente txirotu eta distira gabea da, LIDLen bere erosketak ezkutuan egiten dituena, eta *low cost*en bidaiatzen duena, bidaiatuko badu. Gizartearen hitzekin deskribatzen diren arazoek ez dute konponbiderik. Dela «erretreten» afera, dela «prekarietatearena», dela «gazteena» eta euren «biolentziarena», den-dena gera-

2. 1871n Parisko Komuna errepresio odoltsupean birrindua izan zen.

tzen da airean, eta ezingo luke bestela izan. Bitartean, polizialki kudeatzen dira egoera honen ondorio diren ekintza gero eta ikusgarriagoak. Izan ere, familiek abandonatu dituzten agure eta atso mututuen ipurdiak lau sosen truke garbitzea ez da sekula erakargarria izango. Supermerkatuetako lurrak garbitzeari uko egin, eta bide kriminaletan umilazio gutxiago eta etekin handiagoa aurkitu duten horiek ez dute besterik gabe amore emango, eta kartzelak, bistan da, ez die gizartearenganako maitasun askorik irakatsiko. Aisialdi gosez amorratzen dauden erretiratu saldoek, berriz, ez dituzte hileroko errenten murrizketa ilunak otzan-otzan jasango. Okerrago, gaztediaren parte handi batek lanari uko egiteak are gehiago aztoratuko ditu. Egungo parametroetan, azkenik, ezinezkoa da sasi-matxinada baten biharamunean lortutako soldata bermea beste *new deal* baten, hitzarmen berri baten, bake berri baten zutoin bilakatzea. Gizarte sentimendua lurrunduegi dago horretarako.

Mintza gaitezen garbi, aurrerantzean, *ezer gerta ez dadin*, gero eta handiagoak izango dira bai presioa bai lurraldearen kontrol poliziala. Iragan uztailaren 14an, Seine-Saint Denis auzo gainean hegan ibilitako *drona*k[3] –poliziak berak aitortu

---

3. Tripulaziorik gabeko aireontzia.

duenez–, edozein humanismo lanbrotsuk baino kolore errealistagoekin marrazten du etorkizuna. *Drona* armarik gabe zihoala argitzeko ardura hartu izanak ondotxo erakusten digu zein norabidetan goazen. Kartografia osoa eremu gero eta itxiagotan zatitua izango da. «Auzo sensibleen» ertzetan kokatutako autobideek auzo txiroak urbanizazio-eremuetatik bereizten dituzten murru ikusezinak osatzen dituzte. Errepublikano zintzoek zer pentsa ere, auzoak «komunitateen» arabera kudeatzea da eraginkorrena, bistan da. Lurraldeko eremu metropolitarrenek, hirigune garrantzitsuenek euren burua berregiten jarraituko dute, orain artekoa maltzurki deseginez, luxu gero eta sofistikatu eta distiratsuago batean murgilduta. Planeta osoa argituko dute beren putetxeen gisako neoi argiekin, eta bitartean, BACeko[4] patruilak, segurtasun pribatuko konpainiak, miliziak, alegia, etengabe ugaldu dira, betiere babes judizial gero eta lizunago batekin.

Nonahi hauteman daiteke egungo kinka, baina uneoro uko egiten zaio. Inoiz baino psikologo, soziologo eta literato gehiago dabil, bakoitza bere jargoi berezian, batez ere ondorioak falta dituzten azalpenak ematen. Nahikoa da garaiko bi kantu motari erreparatzea elkarbizitza kinka la-

4. *Brigade Anti Criminalité*: Krimenaren Aurkako Brigada.

rrian dela jabetzeko, haustura gertu dagoela ikusteko: batetik, *la nouvelle chanson française*, non burgesiak bere aldarteak disekatzen dituen; eta, honen aurrean, K'1 Fry[5] mafiaren gerra adierazpenak.

Liburu hau irudipenezko kolektibo baten izenean sinatuta dago. Idazleak ez dira benetako egileak. Egungo topikoetan, tabernetako mahaietako berbaroari, logeletako ate itxien atzean esaten denari ordena apur bat ezartzeaz arduratu dira. Besterik gabe, egia beharrezko batzuk jasoz, horien ukapen orokorrak betetzen baititu ospitale psikiatrikoak eta begiradak tristeziaz. Bizi dugun egoeraren eskribau bilakatu dira. Hau da, izan ere, zirkunstantzia erradikalen pribilegiotariko bat, doitasunak iraultzara garamatzala. Begi bistan duguna esan eta ondorioak ez saihestea nahikoa da.

---

5. Rap talde frantsesa.

## LEHEN ZIRKULUA

### «I AM WHAT I AM»

«I AM WHAT I AM», horra marketinaren azken eskaintza munduari, horra publizitate garapenaren maila gorena, zirikada guztietan aurreratuena, ohiko «izan zaitez desberdin»,«izan zaitez zu zeu», «edan ezazu Pepsi» baino hagitzez aurreratuago. Kontzeptuak asmatzen igarotako hamarkada hauek guztiak, honetara iristeko, tautologia hutsera. NI=NI. Mutila lasterka ari da gailu mekanikoan, bere gimnasia klubeko ispiluaren aurrean. Neska lanetik dator, bere Smarten bolantean. Topatuko ote dira?

«NI NAIZENA NAIZ». Nire gorputza nirea da. Ni ni naiz, zu zu zara, *eta hala oker gabiz*. Masa pertsonalizazioa. Kondizio guztien indibidualizazioa: bizitzarenak, lanarenak, nahigabearenak. Eskizofrenia lausoa. Depresio narrasa. Atomizazioa partikula fin eta paranoikoetan. Kontaktua-

ren histerizazioa. Ni izateko nahia handitzen den heinean handitzen da sentitzen dudan hustasuna. Zenbat eta gehiago esan, orduan eta isilago nago. Nire buruaren atzetik zenbat eta gehiago korrika egin, orduan eta nekatuago nago. Leihatila aspergarri baten antzera kudeatzen dut, duzu, dugu gure Nia. Geure buruaren ordezkari komertzialak bilakatu gara: merkataritza bitxia. Pertsonalizazioz mozorrotutako anputazio baten berme emaile bihurtu gara. Hondakin bilakatzen garen arte eusten diogu, gure baldarkeria nola edo hala disimulatuz.

Bitartean *eusten diot*. Nire Niaren bilaketa, nire bloga, nire etxezuloa, modako azken kirtenkeriak, bikote istorioak, sexu kontuak... Ez dira gutxi, alajaina, Ni bati eusteko beharrezko protesiak! «Gizartea» erabateko abstrakzio bihurtu ez balitz, agian, narrasean segitzeko luzatzen dizkidaten makulu existentzial guztiak izendatuko lituzke, nire nortasunaren prezioan neureganatu dudan menpekotasun mordoa. *Bidean den hiritar eredua elbarriarena da*. Ez da kasualitatea, baizik aurreikuspena, elbarritasuna esplotatzen duten elkarteak «existentzia errenta» aldarrikatzen hasi izana.

Uneoro errepikatzen den aginduak, «norbait izatekoak», gizarte hau beharrezko egiten duen egoera patologikoa mantentzen du. Indartsua izateko aginduak, gizarte hau iraunarazten duen

ahuldadea bera sortzen du. Hainbeste, ezen *denak baitirudi terapeutikoa*, lan egiteak edo maitatzeak barne. Egunean zehar elkartrukatzen dugun «zer moduz?» bakoitza elkarri tenperatura hartzea dela dirudi, gaixoz osaturiko gizarte honetan. Soziabilitatea mila geriza txikiz, mila aterpetxo epelez osatua dago egun. Horietan bero dago behintzat, kanpoko hozgiroan baino beroago segur. Hona hemen faltsukeria orokorra, epeltzeko aitzakia orokorraren baitan. Babeslekuotan, jakina, ezingo litzateke ezer gertatu, hain gaude gure dardara gorrean harrapatuta. Gizarte honek, laster batean, gauza bakar bati esker eutsiko dio: itxurazko sendatze baterantz doazen atomo sozial guztien tentsioari esker. Gizarte hau uneoro lehertzear dagoen malko-presa erraldoi batez elikatzen den zentral bat da.

«I AM WHAT I AM». Dominazioak sekula asmatutako agindu-lerrorik susmagaitzena. Egungo ordenaren sekreturik gordeena norberaren Nia amiltzeko zorian mantentzean datza, matxuraren mugan kronikoki. Ekoizpen prozedurak berrikuntzan, teknologien zaharkitze azkarrean, arau sozialen iraulketa etengabean eta malgutasun orokortuan oinarritzen dira, eta ondorioz, behar-beharrezkoak dituzte subjektu moldagarriak, hau da, Ni ahul, deprimitu, autokritiko eta birtualak. Banako mota hau, kontsumitzailerik

asegaitzena ez ezik, paradoxikoki, *Nirik produktiboena* ere bada. Inork baino gose eta grina amorratuagoez ekingo dio *proiekturik* ezdeusenari, ondoren bere hastapeneko larba egoera osagabera bueltatzeko.

«NAIZENA», beraz? Haur nintzenez geroz, esne isuriek zeharkatu dute nire barrena, usainek, istorioek, soinuek, afektuek, ipuintxoek, substantziek, keinuek, ideiek, inpresioek, begiradek, abestiek eta jakiek. Naizena? Alde guztietatik lotuta nago, toki, sufrimendu, arbaso, lagun, maitasun, gertakari, hizkuntz, oroitzapen eta beste hamaika gauzari lotuta, baina gauza horiek guztiak, nabarmenki, *ez dira ni*. Mundura lotzen nauen horrek, osatzen nauten lotura horiek guztiek, nire baitako indarrek, ez dute nortasun bat ehuntzen, baizik eta existentzia bat, bakana, arrunta, bizia; eta existentzia horretatik, batzuetan, han edo hemen, «ni» esaten duen izaki hori azaleratzen da. Niaren iraunkortasunean sinestetik dator gure funsgabetasun sentimendua, hain zuzen, osatzen gaituenari egiten diogun jaramon eskasetik.

Reeboken «I AM WHAT I AM» leloa Shangaiko etxe-orratz baten puntan ikusteak zorabioa eragiten du. Mendebaldea denetan ari da aurrera egiten, eta berarekin, bere Troiako zaldirik gogokoena, hots, antinomia hilgarria: Niaren eta munduaren artekoa, banakoaren eta taldearen

artekoa, atxikimenduaren eta askatasunaren artekoa. Askatasuna ez datza gure atxikimenduak desegiteko keinuan, baizik eta eurengan eragin eta ekiteko, sortu eta mozteko dugun gaitasun *praktikoan*. Familiaren ahultze mekanismoak eraldatzeari uko egin dionak edo nola egin asmatzen ez duenak, horrek baizik ez du ikusten familia famili gisa, hots, infernu gisa. Sustraigabetu eta ihes egiteko askatasuna izan da beti askatasunaren mamua. Kateatzen gaituenaz libratzen garenean, hartan eragiteko aukera ere galtzen dugu.

«I AM WHAT I AM», beraz, ez da gezur soil bat: kanpaina *militar* bat da, gizabanakoen *artean* dagoen guztiaren aurkakoa, ordenarik gabe mugitzen den guztiaren aurkakoa, modu ikusezin batez elkartzen gaituenaren aurkakoa, atsekabeari oztopo egiten dion guztiaren aurkakoa, *existitu* gaitezen ahalbidetzen duen guztiaren aurkakoa. Guda oihu bat da, mundu osoak autobide, jolas-parke edo hiri berri baten itxura ez izatea ahalbidetzen duenaren aurkakoa. Gure mundu berria: erabateko asperdura, pasiorik eza, ordena, espazio hutsa, hotza, eta bertan, hara eta hona, matrikuladun gorputzak, molekula automobilak eta merkantzia idealak.

Frantzia, antsiolitikoen aberria, antidepresiboen paradisua, neurosiaren Meka ez ezik, orduz orduko

produktibitatearen europar txapelduna ere bada. Min, neke eta depresioak, osatu behar denaren sintoma *indibidualak* baino ez dira, eta funtzio jakinak dituzte: egungo ordena iraunaraztea, gu arau txoroenetara otzan makurraraztea, gure makuluak berriztatzea. Gure baitako joera egoki, konforme eta produktiboenak biltzen dituzte, baita damurik gabe baztertu beharko genituzkeen beste hainbat ere. «Badakik, aldatzen jakin beharra zagok». Baina nire akatsak *errealitate* onargarri gisa hartzen baditut, nire Niaren hipotesia desegiten has naiteke. Nire akatsak, orduan, guda honen baitako erresistentzia ekintza bihurtzen dira. Gu normalizatu eta anputatzeko lan ezkutuan diharduen horren guztiaren aurkako errebolta eta indar-gune bihurtzen dira. *Krisian dagoena, gugan, ez da Nia, baizik eta eman nahiko liguketen forma*. Ni zehatz eta ongi mugarrituak ekoitzi nahi dituzte, elkarren artean ongi berezitutako Niak, tasunen arabera egokiro banatu, sailkatu eta zentsatuak, hots, kontrolagarriak. Baina izakiak gara, izakien artean; bakanak, gure berdinen artean; munduaren haragia ehuntzen duen haragi bizia. Haurtzarotik behin eta berriz errepikatu digutenaren aurka, inteligentzia ez datza moldatzen jakitean edo, hala bada, esklaboaren inteligentzia izango da hori. Gure moldakaiztasun eta nekeak, menderatu nahiko gintuzketen horiexen ikuspegitik di-

ra *arazo*. Gure akatsek, ezer erakustekotan, hasiera puntu bat erakusten dute, elkargune bat konplizitate berrientzat. Ikuspegi hondatu samarra erakutsiko dute, baina hori da zinez konpartitu dezakeguna, eta ez gizarte honek elikatzen dituen ameskeria handinahi horiek.

Ez gaude deprimituta, greban baizik. Kudeatua izateari uko egiten dionarentzat, «depresioa» ez da egoera bat, baizik eta igarobide bat, adio bat, aldentze *politikoranzko* urrats bat. Hortik aurrera, pilulak eta polizien borrak baino ez zaizkie geratzen. Horregatik ausartzen da gizarte hau ume biziegiei Ritaline bezalakoak irentsarazten, horregatik txirikordatzen ditu hain erraz menpekotasun soka farmazeutikoak, eta horrexegatik uste du gauza dela hiru urteko haurrengan «portaera arazoak» antzemateko. Izan ere, Niaren hipotesia toki guztietatik pitzatzen hasia da, pitzatzen hasia denez.

## BIGARREN ZIRKULUA

## «DIBERTIMENDUA BEHAR FUNTSEZKOA DA»

HAMABOST URTEKO NERABEEN AURKA larrialdi egoera ezartzen duen gobernua. Bere salbazioa futbolari talde baten esku uzten duen herrialdea. Ospitaleko ohe batean «biolentziaren» biktima izateaz kexu den polizia. Zuhaitzetan etxolak eraikitzen dituztenen aurkako ordenantza bat agintzen duen prefeta. Chellesen, hamar urteko bi ume ludoteka bati su emateagatik auzipetuta. Egoera zeharo groteskoak sortzeagatik nabarmentzen da gure garai hau, eta jabetu ere ez da jabetzen. Komunikabideek ahalegin berezia egiten dute kexa eta sumindura espantuen baitan itotzeko horrelako albisteek eragin beharko luketen algara .

Leherketa bat eragingo lukeen barre algara, horra «egunerokotasun gai» larriei hobekien egokitzen zaien erantzuna. Matraka errepikatuenetik hasiz: «immigrazioaren afera». Jakina, hala-

korik ez dago zinez. Izan ere, inor hazten al da, egun, jaio den tokian? Edo, nor bizi da hazi den tokian? Zenbatek egiten du lan bizi den tokian? Nor bizi da bere arbasoak bizi ziren tokian? Eta norenak dira, bada, garaiotako umeak, telebistarenak ala gurasoenak? Garbiki esateko, zerbaiten parte izan baginen, zirt edo zart erauzi dituzte gure sustraiak. Ez gara inongoak. Ondorioa ez da soilik turismorako zaletasun bizi eta berri-berri bat, baizik esan ezinezko sufrikario bat. Kolonizazio, migrazio, guda eta erbesteen historia da geurea. Munduan arrotzen gisara eta gure familian gonbidatuen gisara ibiltzea eragin duen historia. Gure hizkuntzaz desjabetu gaitu hezkuntzak, gure abestiez ikuskizun industriak, gure haragiaz masa pornografiak, gure hiriez poliziak, gure lagunez soldatapeko lanak. Horri, Frantzian, mendetan zehar Estatu botereak bultzatu duen indibidualizazio dinamika basatia gehitu behar zaio. Estatuak ume-umetatik nota jarri, sailkatu, alderatu, diziplinatu eta elkarren artean bereizten ditu gizabanakoak. Ezin kontrola ditzakeen elkartasunak instintiboki birrintzen ditu, halako moldez non geratzen den gauza bakarra hiritartasuna den, Errepublikaren parte izatearen lilura hutsa. Beste ezer bainoago, desjabetua eta miserablea da frantsesa. Arrotzekiko duen gorrotoa *arrotz bezala* bere buruari dion gorrotoan oinarritzen da.

«Bazter-auzoekiko» izu eta jelosia sentimendu nahasiak, galdutako guztiak eragiten dion arrangura baino ez du adierazten. «Bigarren mailako» deritzen auzookiko bekaizkeria ekiditea ezinezkoa zaio. Bertan, oraindik, bizitza komun pizar bat geratzen baita, bai eta gizakien arteko lotura batzuk ere, Estatutik landako elkartasun batzuk, ekonomia informal bat, edota antolamendu modu bat, antolatu guztiak barnebiltzen dituena eta oraindik eurengandik berezitu ez dena. Hain gordina da gure gabezia egoera ezen, frantses sentitzeko, ez baitugu beste aukerarik etorkinen aurka asto beltzarenak botatzea baino. Alegia, nabarmenki *ni bezain arrotz* direnen aurka. Burujabetza posizio xelebrea dute etorkinek herrialde honetan: *hemen ez baleude, frantsesik ere ez legoke agian*.

Bere eskolaren produktua da Frantzia, eta ez alderantziz. Pisu handiegia dauka eskolak gure herrialdean, hainbeste non bizitzako funtsezko une gisa gogoratzen dugun baxoa pasatu genuenekoa. Erretiratuek ere berrogei urte lehenago batek daki zein azterketatan jasotako jipoia gogorarazten dizute, eta nola zapuztu zien horrek karrera, bizitza osoa. Igaro den azken mende eta erdian, Errepublikako eskolak erraz antzeman dakiokeen jende mota jakin bat sortu du, estatu subjektibitatea-edo barneratua daramana. Hauta-

keta eta lehia onartzen dituzte, baldin eta mundu guztiak aukera berberak baditu. Merituaren araberako ordainsari bat itxoiten dute bizitzatik, bizitza lehiaketa denez. Ezer hartu aurretik baimena eskatzen dute beti. Kultura, arautegi eta klaseko aurrenekoei begirune isila erakusten diete. Eskolarenganako amodioa darie alde guztietatik, hala euren pentsalari kritiko handienganako atxikimenduan, nola kapitalismoaren ukapenean. Eskolaren instituzioaren gainbeherarekin, ordea, estatu subjektibitateen eraikuntza hori da egunez egun amiltzen ari dena. Azken hogei urteotan, herri kultura eta eskola, indarberriturik, lehian sartu dira Errepublikaren eskola eta honen kartoi usaineko kulturarekin, unibertsaltasun frantsesak gaur egun pairatzen duen traumarik sakonena eraginez. Horren aurrean, eskuin muturrekoenak eta ezker gogorrenak bat egiten dute. Jules Ferryren izen soilak susmagarri bilakatu beharko luke eskolaren instituzioa. Kolonizazioaren teorialari hau Adolphe Thiersen ministro izan zen Komuna txikitu zutenean: ezer ez da kasualitatea.

Guri dagokigunez, «zainketa hiritarreko batzordeak» izeneko zera batzuetan dabiltzan hainbat irakasle, *euren* eskola erre dietela eta, gaueko albistegian negarrez ikusten ditugunean, haurrak ginenean hori bera egitea zenbatetan amestu genuen akordatzen zaigu. Ezkerreko intelektual bat,

gazte taldeen basakeriaz hizketan ahotik simaurra dariola entzuten dugunean, gazteek oinezkoei enbarazu egiten dietelako, dendetan lapurtzen dutelako, autoak erretzen dituztelako eta CRSekin harrapaketara jostatzen direlako, guri 1960ko *blouson noir*en[6] inguruko esamesak edo *Belle Époque*-ko *apatxeei* buruzkoak gogoratzen zaizkigu: «*Apatxeak* izen generikoarekin –idatzi zuen 1907an Seineko auzitegiko epaile batek– izendatzen dira, urte batzuetatik hona, norbanako arriskutsu guztiak, berrerortzearen aldrak, gizartearen etsaiak, famili eta aberririk gabekoak, betebehar ororen desertoreak, lapurreta ausartenak nola pertsonen nahiz jabegoaren aurkako atentatuak burutzeko prest daudenak». Lanari iskin egiten dioten gaurko banda horiek, euren auzoetako izenak hartzen dituztenak eta poliziari oldartzen zaizkienak, frantses hiritar indibidualizatu txintxoaren amesgaiztoa dira: berak bazterrean utzi duen guztia gorpuzten dute, sekula erdietsiko ez duen alaitasun guztia. Hemen, eskolak zikiratu egiten du, eta polizia kutsuko enplegatu zikiratuen belaunaldiak ekoizten ditu tai gabe. Hala, existentzia ere *lotsagabekeria* bat izan daiteke, kantuan ari den umeari «aski da, euritan hasi behar du-eta!» esa-

---

6. 1960ko hamarkadan gazte delinkuenteei kazetariek jarritako izena. Janzten zuten alkandora beltzean oinarritua.

nez kargu hartzen zaion herrialdean. Mesrinen[7] aurak irauten badu, bere ausardia eta zuzentasunagatik baino gehiago, guk guztion mendekuaren xede izan beharko zuen horren aurka abiatu zuen mendekuagatik da. Edo hobe esanda, gu guztion mendeku *zuzena*ren xede izan beharko zuena, kontua saihestu eta atzeratzen jarraitu beharrean. Zeren, dudarik gabe, frantsesa etengabe eta guztiaren aurka baitabil mendekuan. Oharkabeko hamaika zitalkeriarekin, era guztietako gezur beltzekin, maltzurkeria hotz txiki batekin nahiz kortesia pozoitsuarekin, ez dio uzten mendeku hartzeari onartu behar izan duen zapalketagatik. Tenore onean hartu dio tokia *nique la police*![8] leloak *oui, monsieur l'agent*![9] leloari. Hainbat bandak darabilten ñabardurarik gabeko etsaitasunak adierazten duena beste batzuek modu samurragoan adierazten duten gauza bera da: sakonean dagoen aldarte eta giro txarra. Herrialde hau ahitzeko bidean baitago, halako suntsipen salbatzailerako irrikak jota.

---

7. 1936an jaiotako atrakatzaile frantses famatua. «Eguneroko ilegaltasuna eta gizabanakoaren errepresioa, desoreka ekonomikoen aurrean erreboltatzen denari eman beharreko erantzun egokiak ote dira?». 1978an espetxe baldintzen aurka Rober Knobelspiers eta Taleb Hadjadj-ekin batera idatzitako komunikatua.

8. Izorra ezazu polizia!

9. Bai, polizia jauna!

Bizi dugun deserriratze orokorraren herri honi «gizarte» deitzea hain da gehiegizkoa, ezen soziologoak ere hasiak baitira hausnartzen ez ote den hobe izango mende batez mantenua segurtatu dien kontzeptuari uko egitea. *Sarea* metafora hobetsi dute, bakardade zibernetikoen arteko konexioak deskribatzeko, «lankide», «kontaktu», «adiskide», «harreman» edo «abentura» izenekin ezagutzen diren interakzio ahulen multzoa adierazteko. Batzuetan, halere, sareak ingurune batean kondentsatzea gerta liteke. Bertan kode gutxi batzuk baino ez dira konpartitzen. Izan ere, norbera bere identitatea etengabe berreraikitzeari emana baitago.

Alferrik litzateke egungo giza harremanen baitan hilzorian dagoena zehaztea. Familiaren eta bikotearen itzulera darabilgu hitzetik hortzera, baina datorren familia ez da joan zena. Nagusitu zaigun bereizketa iruzurtia areagotzera baino ez dator, delako itzulera. Bereizketa sakontzen jarraitzeko enegarren amarrua da, besterik ez. Bereizketaren osagaia, azken batean, iruzurra baita. Guztiok gara familia ospakizunek urtez urte pilatzen duten tristeziaren lekuko: irribarre neketsu horiek, mundu guztia itxura antzuak egiten ikustearen enbarazua, mahaiaren erdi-erdian hilotz bat dagoen sentimendua, eta beroni ez ikusia egiteko mundu guztiaren ahaleginak. Alberdaniatik dibortziora, ezkongai-alditik bikotea berrosatzera,

familia-gunearen hutsaltasuna agertzen zaigu behin eta berriz, eta saihesteko ezgauza gara. Gehiengoari iruditzen bide zaio, alta, are tristeago litzatekeela amore ematea. Honezkero, familia ezaugarria ez da horrenbeste amaren besarkada itogarria, edo aitaren zaplaztekoak, baizik menpekotasun kotoitsu eta ezagun bati men egitea, bertan etzatea haurren modura, hondoratzen ari den mundu horrekiko ezaxola. Mundu bat non «autonomo bilakatzea» eufemismoarekin «patroi bat aurkitu» adierazten dugun. Senidetasun biologikoaren aitzakia baliatuz, dugun joera apurtzaile mendreena ere higatu nahi digute. Heldu bilakatzen ikusi gaituzten aitzakiarekin, heldu bilakatzeari uko egin diezaiogun nahi dute, eta uko egin diezaiogun, bide batez, haur izatean dagoen larritasunari. Higadura horretatik babestu behar dugu geure burua.

Bikotea, bere aldetik, gizartearen gainbehera totalaren azken maila-edo da. *Giza-mortuaren* erdian dagoen oasia. Egungo giza harremanek hain modu nabarmenean galdu dutena bilatzen dugu «intimitatean»: beroa, xalotasuna, egia, antzezpen nahiz ikuslerik gabeko bizitza bat. Maitemin-zoramena igarota, ordea, bere mozorro-jantzia jausten zaio delako «intimitateari»: asmakizun sozial hutsa da oinarrian, aldizkari femeninoen eta psikologiaren hizkuntza darabil, eta, beste guz-

tiaren antzera, jukutria eta azpikerietan higuingarriki gotortua dago. Hor ez dago beste edonon baino egia gehiagorik, hor ere gezur eta arroztasunaren legeak nagusi dira. Eta, txiripaz, egiarekin topo egiten badugu, jabetuko gara honek eskatzen duen konpartitzeko moduak bikotearen forma bera ezeztatzen duela. Izakiak elkar maitatzera bultzatzen dituen zera horrek bilakatzen du izakia bera maitagarri, eta horrexek hondoratzen du binakako autismoaren utopia.

Eraikuntza sozial guztien deskonposizio hau, egia esan, ustekabeko aukera bat ere bada; baldintza ezinhobeak eskaintzen dizkigu eta, hain zuzen ere, antolamendu eta fideltasun berriak esperimentatzeko, saiakera jendetsu, erraldoi eta basatiak egiteko. «Gurasoen utzikeria» ospetsuak munduari aurrez aurre begiratzera behartu gaitu, gure adimenak esnatuz. Buru-argitasun goiztiar honek matxinada eder batzuk iragartzen ditu. Hil da bikotea, baina zirrara eragiten duten kidetasun kolektiboen jaiotza dakusagu. Sexua zuztarreraino higatua dago, pipiak janda gizontasun eta emetasunaren jantziak. Hiru hamarkadotako berrikuntza pornografiko errepikatuei esker, urratze eta askapenaren xarma guztiak agortuta daude. Egiazko famili loturak baldintzarik gabekoak diren bezala, baldintzarik gabekoa izango da gure elkartasun politikoaren ar-

madura, eta, estatuaren injerentziari dagokionez, ijito kanpaleku bat bezain zeharkaezina izango da. Gurasoek euren seme-alaba txirotuei nahitaez eman beharreko diru-laguntza amaigabeak subertsio sozialaren mezenasgo modu bat izan litezke. «Autonomo bilakatu» esamoldeak «ikasi» ere adieraz lezake: kalean borrokatzen, etxe hutsak okupatzen, lanik ez egiten, eroki maitatzen, eta dendetan lapurtzen ikastea.

## HIRUGARREN ZIRKULUA

### «BIZITZA, OSASUNA, AMODIOA PREKARIOAK DIRA, ZERGATIK EGINGO DIO LANAK LEGE HONI IHES?»

FRANTZIAN, LANARENA BAINO KONTU NAHASIAGORIK ez dago. Frantsesen eta lanaren artekoa baino harreman bihurriagorik ez dago. Zoaz Andaluzia, Algeria, Napolira; barru-barruan, mespretxua diote lanari. Zoaz Alemania, AEB, Japoniara; bertan lana gurtu egiten dute. Gauzak aldatu egiten dira, egia da. Japonian egon badago *otaku*rik, bai eta Alemanian *frohe Arbeitslose*rik ere, edo Andaluzian *workaholics*ik. Baina, momentuz, bitxikeriak besterik ez dira. Frantzian, kolpe zorririk jotzen ez omen dugula-eta, oilartuta ibiltzen gara etxe-giroan, hierarkian gora igotzeko zazpi ahalak burutu bitartean. Lanez lepo gaudenean, gaueko hamarrak arte lanean geratzen gara txintxo-txintxo, baina duda izpirik gabe ebasten dugu bulegoko materiala, edo inolako eskrupulurik gabe pieza solteen stock-kutxa arintzen dugu, gero harrapakina sosa batzuen truke saltze-

ko. Patroiak gorroto ditugu, baina enplegatu izan nahi dugu kosta ahala kosta. Ohorea da lanpostu bat edukitzea; lan egitea, ordea, morrontzaren seinale. Labur esanda: histeriaren koadro kliniko perfektua. Gorrotatuz maite dugu, eta maitatuz gorrotatzen. Eta ondo baino hobeto dakigu zenbateko harridura eta larritasuna eragiten digun histerikooi gure biktima, hots, gure nagusia galtzeak. Ez gara onik ateratzen.

Herrialde *politiko* petoa den Frantzia honetan, Estatu boterearen menpe egon izan da beti botere industriala. Jarduera ekonomikoak, era susmagarrian, ez dio inoiz administrazioaren agintaritza zorrotz baten menpean egoteari utzi. Negozioen munduan halako erruki disimulatua pizten dute *École nationale d'administration*-ENAren kastakoak ez diren ugazaba handiek, Estatu nobleziarik ez dutenek, alegia. Pariak dira, eta euren heroi tragikoa, Bernard Tapie[10]: lausengatua gaur, kartzela-zuloan biharamunean, *ukiezin beti*. Aktore gisa hasi izana ez da batere harritzekoa. Ikusle frantsesek munstro bati bezala begiratzen diote, distantzia egokia mantenduz. Ez du ukitu ere egin nahi, eta petralkeria eta lotsaizun liluragarri horien ikuskizunaz

---

10. Hamaika ustelkeri kasutan nahastutako enpresaburu frantsesa, aldi batez politikan ere muturra sartu zuen. Alabarekin batera kalitate eskaseko antzezlan batean parte hartu du.

baliatzen da kontaktua saihesteko. 1980ko hamarkadako hordago ustelaren despit, *enpresaren kultua ez da inoiz Frantzian errotu*. Enpresa iraindu eta arbuiatuz idaztea nahikoa luke edonork, bere liburua best-sellerren zerrendetan ikusteko. Managerrek euren ohitura eta literatura jendaurrean erakutsi arren, irri-mirriz osatutako kordoi sanitario batek, mesprezu ozeano batek, sarkasmo itsaso batek inguratzen ditu. Enpresaburua ez da familiaren parte. Gorrotoen hierarkian, polizia bera atzetik doakio. Oraindik orain funtzionarioena baita lanpostu *onaren* definizio onartua. Funtzionarioa izatea, oroz gain eta haizea kontra, *golden boys* eta pribatizazioen kontra. Funtzionario ez diren zenbaiten aberastasuna irrikatu arren, ezin konformeago gaude funtzionario postuarekin.

Neurosi inguruabar honetaz baliatzen dira gobernuak, bata bestearen atzetik, langabeziari guda deklaratu, edo «enpleguaren bataila» irabazi asmotan dabiltzala esateko. Bien bitartean, koadro ohiak Senaren ertzean kanpatzen dira, euren eramangarri eta guzti, «Munduko mediku»en kanpin-dendetan. Noiz eta langabezia tasa bi milioitik jaitsi ezinean dabiltzanean, trikimailu estatistikoak gorabehera, eta ANPEko[11] zerrendeta-

---

11. *Agence National Pour l'Emploi*. Enpleguaren Agentzia Nazionala.

tik jendea erruz ezabatu arren. Noiz eta diru-laguntza sozialak eta trapitxeoa direnean, inteligentzia zerbitzuen esanetan ere, balizko eztanda sozial baten aurkako berme bakarrak. Frantsesen ekonomia psikikoa ere jokoan da, herrialdearen egonkortasun politikoa bezainbeste, fikzio laboralaren iraupenaren menpe.

Gu, zilegi bekigu, ederki futitzen gara.

Fikzio hori gabe *oso ongi* bizi den belaunaldi batekoak gara. Erretreten gainean inoiz kontatu ez duena, ezta lan-eskubidearen gainean, eta are gutxiago *lanerako* eskubidearenean ere. «Prekarioa» ere ez dena, ezker militantziaren inguru aurreratuenek teorizatu ohi dutenaren aurka. Zeren prekario izateak lan-esparruaren arabera definitzea esan nahi baitu, kasu honetan: *bere deskonposizioaren* arabera. Dirua bilatzearen premia onartzen dugu –berdin dio nola–, gabe bizitzea zeharo ezinezkoa baita. Ez ordea lan egitearen premia. Honezkero lan ere ez dugu egiten: *beharra egiten dugu*. Enpresa ez da guretzat existitzeko leku bat, zeharkatzekoa baizik. Ez gara zinikoak, soilik zanpatuak izateari erreparoa diogula. Motibazio, kalitate nahiz engaiamendu pertsonalari buruzko diskurtsoek irrist egiten dute gure azalean behera, giza baliabideen kudeatzaile guztiak erabateko nahasmenduan hondoratuz. Enpresak dezepzionatu egin gaituela diote, gure

gurasoen leialtasuna traditu duelako, azkarregi kanporatuta. Gezurretan dabiltza. Dezepzionatuta egoteak inoiz zerbait espero izana esan nahiko luke, eta guk ez dugu inoiz enpresarengandik ezer espero izan. Den bezalaxe eta sekula galdu ez duen izaerapean dakusagu, hau da, konfort aldakorreko iruzur handi bat. Tamala, gure gurasoak amarruan jausi izana –sinetsi zutenen kasuan behintzat–.

Lanaren inguruko sentimendu nahasketa honela azal genezake: lanaren nozioak kontraesanean diren bi dimentsio barnebildu ditu beti: *ustiapen* dimentsioa, eta *parte-hartze* dimentsioa. Batetik, lan-indar indibidual nahiz kolektiboen ustiapena, plusbalioaren jabekuntza pribatu nahiz kolektiboaren bidez. Bestetik, egintza komun batean parte-hartzea, ekoizpen unibertsoaren baitan lankidetzan dabiltzanen artean ehundutako loturen bidez. Bi dimentsio hauek lanaren nozioan maltzurki nahasiak aurkitzen dira, eta horrexek azaltzen du langileen axola eza, bai parte-hartze dimentsioa ukatzen duen erretolika marxistarekiko, baita ustiapen dimentsioa ukatzen duen erretolika enpresarialarekiko ere. Hortik, halaber, lanarekiko gure harremanaren anbibalentzia: batetik mesprezua, egiten dugunarekiko arrotz bilakatzen gaituen heinean, eta aldi berean adorazioa, jokoan dagoena gure baitaren parte bat den heinean. Hondamena,

ordea, atzeragotik dator: lana *existitzeko modu bakarra* bilaka zedin, suntsitu behar izan den orotan eta sustraigabetu behar izan diren guztiengan datza. Lanaren horrorea ez dator lanetik beretik, baizik eta lana ez den guztiaren mendez mendeko xehatze metodikotik, hala kidetasunak –lan, herri, borroka nahiz sendi kidetasunak–, nola atxikimenduak –toki, izaki, sasoi, jokabide nahiz hizkerekiko atxikimenduak–.

Horretan datza egungo paradoxa: langileak alferreko bilakatu diren une berean, lanak gainditu dituela existitzeko beste modu guztiak. Hainbeste aurreratu dira ekoizpenaren etekinak, deslokalizazioak, mekanizazioa, automatizazioa nahiz digitalizazioa, ezen merkantzia bakoitza ekoizteko beharrezko den lan biziduna ia osoki murriztu baitira. Lanik gabeko langile gizarte baten paradoxa bizi dugu, non denbora-pasak, kontsumoak eta aisiak agerian uzten baitute, hain zuzen ere, ahantzarazi nahi diguten horren falta. Mende oso batez bertan gertatu greba bortitzengatik ezaguna egin zen Carmaux-eko meategia, *Cap Découverte* bihurtu dute, *skateboard*a egin eta bizikletan ibiltzeko aukera ematen duen «aisialdi gunea». «Meatzearen museo» batek seinalatzen du, eta bertan grisu leherketak simulatzen dira udatiar eta turistentzat.

Lana modu gero eta ikusgarriagoan banatzen da enpresetan. Alde batetik, ekoizpen prozesu zibernetiko berrirako beharrezko jakintzak aplikatzera lotutako ikerketa, sorkuntza, kontrol, koordinaketa eta komunikazio lanpostu kualifikatuak. Bestaldetik, prozesu horren mantentze eta zaintzarako kualifikaziorik gabeko lanpostuak. Lehenak urriak, oso ongi ordainduak eta, beraz, zinez irrikatuak direnez, postuok betetzen dituen gutxiengoak ez du papur bat ere askatuko. Euren lana eta eurak bat eginik daude besarkada larrituan. Manager, zientzialari, lobby-kide, ikerlari, programatzaile, garatzaile, aholkulari edota ingeniariek ez diote, hitzez hitz, *inoiz* lan egiteari uzten. Txortaldiak ere baliatuko dituzte euren produktibitatea hobetzeko. Halaxe teorizatzen du filosofo batek Giza Baliabideen zuzendarientzat: «Beren baitan harreman intimo gehien dituzten enpresak dira sortzaileenak». «Enpresaren kolaboratzaileak –berresten du Daimler-Benzeko giza baliabideen zuzendariak–, enpresaren kapitalaren parte dira. [...] Beren motibazio, berriztapen-gaitasun, nahiz bezeroen desirekiko kezkek osatzen dituzte zerbitzu berritzaileen lehengaiak. [...] Kolaboratzaileon lana bera ebaluatzeko orduan, gero eta pisu handiagoa dute bai beren jarrerek bai beren konpetentzia sozial eta emozionalek. [...] Lana presentzia orduen arabera baino gehiago, emaitzen kali-

tatearen eta erdietsitako helburuen arabera ebaluatuko da. Enpresaburuak dira».

Automatizazioak bereganatu ez dituen zereginek, makinek okupatu ezin izan dituzten horiexek, zeinahi gizakik okupa lezakeen postu nebulosa bat osatzen dute –mantentze-lanetako langileak, biltegietakoak, lan-kateetakoak, jornalariak, etab.–. Eginkizun batetik bestera eta enpresaz enpresa dabilen lan-esku malgu eta ezaugarri-gabeko honek ezingo lituzke bere baitan indarrak bildu, zeren ez baitago ekoizpen prozesuaren gunean, baizik eta barreiatuta, mekanizatuak izan ez diren hutsuneak estaltzeko hamaika zirrikitutan zabalduta. Aldi baterako langilea da, honezkero, langile ez den horren irudia. Lanbidearen ordez gaitasunak ditu, eta bere gaitasunak eginkizunez eginkizun saltzen dihardu, prestutasuna bera ofizio bilakatuz.

Makinak ongi funtzionatzeko beharrezko dituen langileen gunetik kanpo hedatzen da soberakin bilakatutako gehiengoa, ekoizpenaren kontsumorako baino beste ezertarako baliagarri ez dena, eta bere lanik ezarekin makina hondatzeko arriskuan jartzen duena. Desmobilizazio orokor baten mehatxua baita egungo ekoizpen sistemaren amesgaiztoa. «Zertarako lan egin, orduan?» galderari ez dio mundu guztiak erantzuten RMIsta ohi honek *Libération* egunkariari bezala: «Nire

ongizatearen amoreagatik. Zeregin baten premian nengoen». *Gure lanik ezari zeregin bat edo beste aurkitzen bukatzea, horra arrisku larri bat*. Hor zehar dabilen populazio hori lanpetuta edukitzea beharrezkoa, edo geldi, bestela. Soldatapekoa baino diziplina metodo hoberik ez da aurkitu ordea. «Lorpen sozialak» deuseztatzen jarraitu beharko da, beraz, soldatapeko lanaren magalera biltzeko uzkurrenak ere, gosez hil edo kartzelan usteltzea beste irtenbiderik edukiko ez dutenean soilik amore emango duten horiek, alegia. «Zerbitzu pertsonalak» deituriko esklabotza-arloaren zabalkundeak ere jarraitu behar du: etxe-garbitzaileak, sukaldari-zerbitzariak, masajeak, etxeko laguntza, prostituzioa, zainketak, eskola partikularrak, aisialdi terapeutikoak, laguntza psikologikoa, etab. Guztia segurtasun, higiene, jokabide eta kultura arauen areagotzeaz eta moden iragankortasuna laburtzeaz lagunduta ere, modak baitira zerbitzuon beharra sortzen dutenak. Rouenen, ordudatagailuek «giza parkimetroei» bide eman diete: kalean asper-asper eginda dagoen batek aparkatze-tiketa ematen dizu eta, behar izan ezkero, eguraldi eskasa dagoenean aterkia alokatzen.

Lanaren ordena mundu baten ordena izan zen. Bere hondamendiaren ebidentziak eta etor daitekeenaren gomuta hutsak harri eta zur uzten gaituzte. Lan egitea, egun, ez dago merkantzia ekoiz-

pen behar *ekonomiko* bati lotua, baizik behar *politiko* bati, ekoizle eta kontsumitzaileak ekoiztekoa, lanaren ordena kosta ahala kosta salbatzekoa. Ekoizpena xedegabea bilakatu den gizartean, *norbere burua* ekoiztea zeregin nagusi bilakatzear dago: bere lantegia galdutako arotza, etsipenaren etsipenaz, bere burua arrabotaz leuntzen hasiko balitz bezala. Hortik gazte horien ikuskizuna: lan-elkarrizketarako euren irribarrea doitzen ibiltzen direnak; hortzak zuritzen dituztenak igoera hobea lortzeko; talde-izpiritua estimulatzeko diskotekara doazenak; euren karrera bizkortzeko ingelesa ikasten dutenak; beste salto bat emateko dibortziatu edo ezkontzen direnak; *lider* bihurtzeko antzerki ikastaroak egiten dituztenak, edota «garapen pertsonaleko» ikastaroak, «gatazken kudeaketan» trebatzeko. «*Garapen pertsonal* intimoenak –baiesten du guru zeinahi batek– egonkortasun emozional hobe batera, harreman-irekidura erosoago batera, zorroztasun intelektual handiago batera garamatza, eta hortaz, marka ekonomiko hobe batera». Natural azaltzeko entrenatzen den bitartean, aukeratua izateko zain dagoen jendetxoaren zalaparta urduria, lan-ordena *mobilizazioaren* etika batekin salbatzeko ahaleginaren ondorio da. Mobilizatua egotea lanari *aukera* gisa lotzea da, ez jarduera gisa. Langabetuak bere mobilizazioa erakutsiko du «bere baliagarritasuna» de-

ritzon hori lantzeari ekingo dionean, *piercing*ak kenduz, ile-apaindegira joanez eta bere «egitasmoak» garatuz. Mobilizazioa norbere buruarengandik pixka bat askatzea da, osatzen gaituenarengandiko deserrotze txiki-txiki bat, Nia lan-objektu bezala hartua izatea ahalbidetzen duen arroztasuna, norbere burua saltzea, norbere lan-indarraren ordez. Egiten dugunaren arabera beharrean, garenaren arabera ordainduak izatea, ordain bat jasotzea gure kode sozialen menderatze bikainagatik, gure harreman talentuengatik, gure irribarreagatik, edota gure aurkezteko moduagatik. Mobilizazioak lanaren bi polo aurkarien fusioa eragiten du: bertan, ustiaketan parte hartu, eta parte-hartze oro ustiatzen dugu. Idealki, hauxe gara aldi berean: enpresa txiki bat, norbere ugazaba eta norbere produktua. Lan egin ala ez, kontua da kontaktuak, gaitasunak, «sareak» pilatzea, hau da: «kapital humanoa». Aitzakia txikienarekin mobilizatzeko agindu planetarioak –minbizia, «terrorismoa», lurrikara bat, etxegabeak– laburbiltzen du indarrean dauden botereen erabakimena. Hain zuzen, lan-ordena indarrean mantentzeko, haren desagertze fisikoaz harago ere.

Egungo ekoizpen aparatua beraz, alde batetik, gizakiak psikikoki nahiz fisikoki mobilizarazi, eta gizaki-soberakinen energia ponpatzen duen makina erraldoi bat da. Bestaldetik, *hautatzeko*

makina bat da, subjektibotasun zuzenei biziraupena esleitzen diena, eta «banako arriskutsuak», hau da, bizitzaren beste erabilera bat irudikatuz makinari berari erresistentzia egiten dioten horiek, bazter uzten dituena. Alde batetik, espektro hutsak biziarazten dituzte, bestetik, bizidunak hiltzen uzten dituzte. Horixe da egungo ekoizpen aparatuaren funtzio politiko zehatza.

Lanaren kontra eta lanaz gaindi antolatzea, mobilizazioaren erregimena kolektiboki desertatzea, *desmobilizazioaren baitan* bizitasun eta diziplina bat egon badagoela aldarrikatzea, horra zibilizazio etsi honek inola ere barkatuko ez digun krimena; horra, alabaina, bizirauteko modu bakarra.

## LAUGARREN ZIRKULUA

## «SINPLEAGO, DIBERTIGARRIAGO, MUGIKORRAGO, SEGURUAGO!»

EZ DIEZAGUTELA «HIRIAZ» ETA «LANDAZ» gehiago ezer aipatu, eta are gutxiago bien arteko aurkaritza betierekoaz. Gure inguruak horren antz txikienik ere ez baitauka: forma eta ordenarik gabeko hedadura urbanoa; eremu suntsitu, zehaztugabe eta mugagabea. Hiperzentro museifikatuz eta parke naturalez, multzo handi eta nekazaritza-ustiategi erraldoiz, industrigune eta urbanizazioz, landetxe eta modako tabernez osatutako mundu *continuum* bat, hau da, metropolia. Izan ziren antzinako hiria, Erdi Aroko hiria nahiz hiri modernoa, baina ez dago hiri metropolitarrik. Metropoliak lurralde osoaren sintesia du helburu. Batera bizi da guztia, ez horrenbeste alde geografikotik, baizik eta bere saretzeagatik.

Hain zuzen ere, desagertzear dagoelako, hiria, Historia gisa, fetitxe-gai bilakatu da. Lilleko ma-

nufakturak antzoki bihurtu dira, Havreko hirigune porlaneztatua Unescoren ondare. Pekinen, Hiri Debekatua inguratzen duten *hutong*ak eraitsi eta faltsuak berreraikitzen dituzte, pixka bat urrutirago, kuxkuxeroen gozamenerako. Troyesen, *colombage* tankerako fatxadak jartzen dituzte porlanez egindako eraikuntzen aurrealdeetan. *Pastiche*aren arte honek Disneyland Parisko viktoriar estiloko dendak ere gogorarazten dizkigu. Luzaroan sedizio-gune izandako hiribarru historikoek beren tokia zintzoki aurkitzen dute metropoliaren organigraman. Turismoari nahiz kontsumo arranditsuari emanak daude. Azoka eta estetikaren bidez ez ezik, indarraren bidez ere mantentzen diren merkatu liluraren irlatxoak dira. Gabonetako azoken zozokeria itogarria, aldiro zaindari eta udaltzain patruila gehiagorekin ordaintzen da. Kontrola merkantziaren paisaian ederki integratzen da, ikusi nahi duen orori bere alde autoritarioa erakutsiz. Nahasketen garaiak bizi gaitu: doinu errazak, borra hedagarriak eta gozokiak, dena nahas-mahas. Zenbateko zaintza poliziala suposatzen duen lilurak!

Auzo herrikoien kolonizazioan, burgesia txikiak kakotx-arteko-autentikoarenganako gustua dauka bidaide, eta baita honek dakarren kontrola ere. Hiperzentroetatik kanpora bultzatua, auzo herrikoietan bilatzen du etxe pinpirinen artean

inoiz aurkituko ez lukeen «auzo bizitza». Baina espazioa *garbituz*, mikrobioak deuseztatuz, txiroak, autoak eta etorkinak kanporatuz, burgesia txiki honek birrindu egiten du bila zebilena. Udal-afixa batean garbitzaile batek polizia bati bostekoa luzatzen dio, goiburua: «Montauban, hiri garbia».

Hirigileak, eurek suntsitu duten «hiriaz» baino gehiago «urbanitateaz» hitz egitera behartzen dituen dezentzia horrek berak bultzatu beharko lituzke halaber, dagoeneko existitzen ez den «landa» ez aipatzera. Landaren lekuan, jendetza estresatu eta sustraigabetuari erakusten zaion paisaia bat dago, eta, nekazariak ezer gutxira murriztuak izan direnez gero, ikuskizun bilaka daitekeen iragan bat. «Lurralde» batean hedatzen den marketina da landa, eta honen baitan denak behar du balio, denak behar du ondare. Dena da, ordea, azken muturreko kanpandorreraino zabaltzen den hustasun hotz berdina.

Metropolia, hiriaren eta landaren aldi bereko heriotza da, klase ertain guztiek bat egiten duten bidegurutzean, landa-exodotik «periurbanizaziora» amaigabe hedatzen den erdiko klasearen erdigunean. Munduko lurraldearen bitrifikazioan datza arkitektura garaikidearen zinismoa. Ikastetxe bat, ospitale bat, mediateka bat, horra gai berdinaren inguruko aldaerak: gardentasuna, neu-

traltasuna, uniformetasuna. Nor edo zer gordeko duten jakin beharrik gabe sortuak diren eraikin handi eta aldakorrak, beste edonon bezalaxe *hemen egon litezkeenak*. Zer egin La Défense, Part Dieu edota Euralilleko bulego-dorreekin? «Kartsuki berria» esamoldeak barnebiltzen du beren patua. Matxinoek 1871n Parisko Udaletxea erre eta gero, botereak sugarretan dagoelarik duen berealdiko distiraren lekukotasuna ematen du bidaiari eskoziar batek: «[...] ez nuen inoiz gauza ederragorik imajinatu; bikaina da. Ados naiz, Komunako jende horiek zinez gaiztagin itsusiak dira; baina zeinen artista handiak! Eta ez ziren beren obraren tamainaz ohartu ere! [...] Ikusia nago Mediterraneoko uhin urdinek bustitako Amalfiko hondakinak, Tung-hoor-eko tenpluen hondakinak Pundjabean; ikusia nago Erroma eta beste gauza asko: ezer ezin daiteke alderatu gau hartan begi aurrean izan nuenarekin».

Egon badago oraindik, sare-begi metropolitarrean harrapatuta, hainbat hiri pusketa eta hainbat landa hondar. Baina bizidunak bazter-tokietan egin du habia. Paradoxak dioenez, itxuraz bizitzeko gaitzenak diren lekuak nolabaiteko bizitza gorde duten bakarrak dira. Etxe okupatu zahar batek maila altuko apartamentu batek baino jendez beteago egotearen itxura izango du beti. Hurrengo lekualdatzea iritsi bitartean altza-

riak jarri eta dekorazioa hobetzea, horixe eskaintzen digute apartamentu horiek. Megalopoli asko eta askotan bazter-auzuneak azken eremu bizidunak dira, bizitzeko modukoak, eta, ezustekorik gabe, hilgarrienak. Mundu-metropoliko dekorazio elektronikoaren atzealde ezkutua dira. Parisko ipar-auzuneetako etzaleku-hiriak, etxetxoen ehizara abiatutako burgesia txiki batek alboratu ondoren, masa-langabeziak berpiztuta, Quartier Latinek berak baino indar gehiagorekin dirdaitzen du orain. Hitzaren bidez bezainbat suaren bidez.

2005eko azaroko sutea ez da, sarritan idatzi den bezala, muturreko desjabetzetik sortzen, baizik eta, aitzitik, lurralde baten jabetza osotik. Asperduragatik autoak erretzerik badago, baina matxinada hilabete osoan hedatu eta polizia porrotean horren luzaz mantentzeko, antolatzen jakin beharra dago, konplizitateak behar dira, lur-eremua zehatz-mehatz ezagutu, hizkera nahiz etsai berberak izan. Ez kilometroek ez eta asteek ere ez zuten sutea zabaltzea eragotzi. Lehen txingarrei beste batzuek erantzun zieten, gutxien espero zen tokietan. Zurrumurrua ez dago entzuketapean jartzerik.

Metropolia intentsitate baxuko gatazka etenezin baten eremua da. Basora, Muqdisho edota Nablus hartzeak haren une gorenak baino ez ditu markatzen. Hiria, militarrentzat, saihestu beha-

rreko, are, setiatu beharreko lekua izan da luzaz. Metropolia, aldiz, erabat bateragarria da gerrarekin. Gatazka armatua metropoliaren berreratze iraunkorraren une bat besterik ez da. Potentzia handiek gidatutako batailek eta metropoliaren zulo beltzetan behin eta berriz burutu behar diren polizia lanek elkarren antza nabarmena daukate: «Dela Burkina Fason, Hego-Bronxen, Kamagasakin, Chiapasen edo Courneuven». «Interbentzioen» xedea ez da preseski garaipena, ezta ordenuaren eta bakearen ezarpena ere, jada eta betidanik martxan dagoen segurtatze ekintza baten jarraipena baizik. Honezkero ez dago gerra denboran isolatzerik, berau mikro-operazio militar eta polizial segida batean zatikatzen baita, segurtasuna segurtatzeko.

Polizia eta armada paraleloki eta pausuz pausu egokitzen dira. Kriminologo batek unitate txiki mugikor eta profesionalizatuetan antolatu daitezela eskatzen die CRSei. Diziplina metodoen sehaska den instituzio militarrak bere antolamendu hierarkikoa auzitan jartzen du. NATOko ofizial batek «metodo parte-hartzaile» bat aplikatzen du bere granadari batailoian, hain zuzen, «banako guztiak inplikatzen dituena ekintza baten analisian, prestaketan, gauzatzean nahiz ebaluazioan. Egunetan zehar eztabaidatua eta berreztabaidatua da plana, entrenamendua garatzen den heinean eta

jasotako informazioaren arabera. [...] Atxikimendua nola motibazioa areagotzeko, batera landutako plan bat bezalakorik ez da».

Indar armatuek, metropolira egokitzeaz aparte, metropolia bera taxutzen dute. Hala, soldadu israeldarrak, Nabluseko batailaz gero, barne-arkitekto bilakatu dira. Palestinar gerrillak arriskutsuegiak diren kaleak baztertzera behartu ditu. Ondorioz, sabai eta murruak lehertuz, hiriko eraikuntzetan barna horizontal eta bertikalki aurrera jotzen ikasi behar izan dute. Israeldar defentsa indarren ofizial batek, filosofian diplomatua berau, honela azaltzen du: «Etsaiak modu klasiko, tradizional batean interpretatzen du espazioa, eta uko egiten diot bere interpretazioa jarraitu eta bere tranpetan erortzeari. [...] Nik ezustean harrapatu nahi ditut! Horra gerraren funtsa. Irabazi beharra daukat. [...] Horra: murruak zeharkatzera naraman metodologia aukeratu dut... bidean aurkitzen duen guztia irentsita aurrera doan harrak bezalaxe». Liskarren antzokia baino gehiago da urbanoa: bitartekoa ere bada. Horrek Blanquiren aholkuak gogoratzen dizkigu halaber, oraingo honetan matxinadari dagokionez. Etorkizuneko matxino paristarrei gomendatzen zien barrikadak jarritako kaleetako etxeak hartu, eta elkarren artean komunikatu ahal izateko murruak zulatzeko. Aldi berean, behe-solairuko es-

kailerak suntsitu, eta erasotzaileengandik babesteko sabaian zuloak egiteko, leihoak gotortzeko ateak erauzteko eta pisu bakoitza tiro postu bilakatzeko gomendioa ere egiten zien.

Metropolia ez da soilik mordo urbanizatu hori, hiriaren eta landaren arteko azken talka, izakien eta gauzen fluxu bat ere bada. Zuntz optiko, AHT linea, satelite zein bideo-zaintza kameraz osatutako sare bat zeharkatzen duen *korronte* bat. Bere itxaropenik gabeko mugikortasunean guztia arrastatu nahiko lukeen korrontea, eta, izatez, norbanako bakoitza *mobilizatzen* duena. Metropolian, informazioaren eta bestelako indar etsaien erasoak jasaten ditugun toki bat da. Non lasterka ateratzea beste aukerarik ez dugun. Non itxarotea zinez zaila bilakatzen ari den, baita enegarren metro linea ere.

Mugitzeko eta komunikatzeko bitartekoen ugaltzeak, beti beste nonbait egotearen tentazioaren bidez, *hemen* eta *orain*etik deserrotzen gaitu etengabean. AHT bat, RER[12] bat, telefono bat hartu, *dagoeneko han* egoteko. Mugikortasun horrek deserrotzea, isolamendua, erbestea besterik ez dakar. Edonorentzat jasangaitza litzateke, baldin eta mugikortasun hori ez balitz, betiere, *espazio pri-*

---

12. *Réseau Express Régional*. Paris inguruko auzoekin lotzen duen trena.

*batuarena*, barnealde eramangarriarena. Burbuila pribatua ez da lehertzen, flotatzen hasten da. Ez da *cocooning*aren amaiera, izan ere bere abiatzea da. Geltoki batetik, merkataritza-gune batetik, negozio-banku batetik edo hotel batetik bestera, nonahi agertzen zaigu arroztasun berbera, hain hutsala, hain ezaguna non azkenengo familiartasunaren tokia hartu bailuen. Metropoliaren oparotasuna behin eta berriz birkonbinatu daitezkeen giro definitu hainbaten ausazko nahasketan datza. Hiriguneek ez dute beren burua leku berdin-berdinen modura aurkezten, baizik eta giro originalen eskaintza gisa. Giro horien artean mugitzen gara, bata aukeratu eta bestea baztertuz, halako *shopping* existentzial baten nahierara taberna, jende, diseinu estilo desberdinak, edota iPod baten *playlist*aren arabera hautatuz. «Nire mp3 irakurlearekin, neure munduaren jabe naiz». Inguratzen gaituen uniformetasunean bizirauteko, norbere barne mundua etengabe berrosatzea da aukera bakarra, toki guztietan etxola berbera eraikiko lukeen umearen antzera. Irla desertuan Robinsonek bere dendari unibertsoa erreproduzitzen zuen modura, baina ñabarduratxo honekin: jenderik gabeko gure irla zibilizazioa bera da, eta milioiak eta milioiak gara tai gabe bertan lehorreratzen.

Bere fluxu-arkitektura horrexegatik da metropolia, hain justu, inoiz existitu den giza osaketa hauskorrenetakoa. Malgua, sotila, baina hauskorra. Epidemia bortitz baten kausaz mugen bat-bateko itxiera, hil edo biziko hornidurararen batean zeinahi gabezia izan, komunikazio-ardatzen blokeatze antolatu bat gertatu, eta dekoratu osoa amiltzen da, uneoro jazartzen duten triskantza eszenak ezkutatzeko ezgauza bihurtuta. Mundu hau ez litzateke hain agudo ibiliko, etengabe bere gainbehera hurbila atzetik segika edukiko ez balu.

Metropolia bere disfuntzio saihestezinengandik babestu nahi lukete bere sare egiturak, bere korapilo eta konexio azpiegitura teknologiko guztiak, eta bere arkitektura deszentralizatuak. Internetek eraso nuklear bati eutsi behar dio. Informazio, gizaki eta merkantzia fluxuaren kontrol iraunkorrak metropoliaren mugikortasuna babestu behar luke. Merkantzia stock-etan inoiz paletarik falta ez dela, dendetan txanpon-billete lapurturik ez dela agertzen, edo terroristarik hegazkinean aurkitzen ez dela segurtatzeko: trazabilitatea. RFID[13] txip bati, pasaporte biometriko bati, AND fitxategi bati esker.

Baina metropoliak bere hondamendiaren bitartekoak ere sortzen ditu. Segurtasunaren aditu ame-

13. Irrati frekuentzia bidez dabilen identifikazio txartela.

rikar batek, Irakeko porrota azaltzeko, komunikazio berriei etekina ateratzeko gerrillak duen gaitasuna hizpide hartzen du. Inbasioaren bidez, demokrazia baino, sare zibernetikoak inportatu dituzte Estatu Batuek. Beren porrota eragin duen armetariko bat gainean zeramaten. Telefono mugikor zein Interneteko sarbide puntuen ugaltzeak antolatzeko bitarteko berriak eskaini dizkio gerrillari, eta bide batez, eraso-gaitza bihurtzeko modua.

Sare bakoitzari bere puntu ahulak dagozkio, zirkulazioa eten dadin, sarea lehertu dadin desegin beharreko bere korapiloak. Europako azken matxura elektriko handiak erakutsi zuen bezala, nahikoa suertatu zen goi tentsioko linea batean gorabehera bat, kontinentearen parte handi bat iluntasunean murgiltzeko. Metropoliaren erdian zerbait sortu ahal dadin, beste aukera batzuk ireki daitezen, burutu beharreko lehen keinua bere *perpetuum mobile*a geldiaraztea da. Horixe da errepikagailu elektrikoak zartarazten diharduten erreboltari tailandiarrek ulertu dutena. CPEen[14] kontrakoek ere horixe ulertu dute, unibertsitateak blokeatu eta ondoren ekonomia ere blokeatzen saiatu baitira. Horixe ulertu zuten, halaber, 2002ko

---

14. *Contrat première embauche*. Gobernuak bultzatutako lan erreforma. 2006an protesta ugari eragin zituen eta, ondorioz, baztertua izan zen.

urrian hirurehun lanpostu salbatzeko hamar egunez Mendebaldeko itsasertzeko porturik garrantzitsuena blokatu zuten amerikar zamaketari grebalariek. Amerikar ekonomiak Asiatik datozen fluxu tinkoenganako duen menpekotasuna hainbestekoa da, ezen blokeatzearen kostua eguneko mila milioi euroraino igo baitzen. Hamar mila nahikoak lirateke munduko potentzia ekonomiko handiena zanbuluka jartzeko. «Aditu» batzuen ustez, mobilizazioa hilabete bat gehiagoz luzatu izan balitz, «Estatu Batuetan atzeraldiaren itzulera eta Hego-ekialdeko Asiarentzat amesgaizto ekonomikoa» ikusiko genukeen.

## BOSGARREN ZIRKULUA

## «ONDASUN GUTXIAGO, LOTURA GEHIAGO!»

HOGEITA HAMAR URTEZ MASA-LANGABEZIAN, «krisian», beherantz doan hazkundean, eta oraindik ekonomian sinets dezagun nahiko lukete. Hogeita hamar urte, egia da, ilusio-pausaldi hainbatek puntuatuta: 1981-1983 pausaldia, ezkerreko gobernu batek herriari zoriona ekar ziezaiokeenaren ilusioa; sosa-urteen pausaldia (1986-1989), non denok bihurtu behar omen genuen aberats, enpresaburu nahiz burtsa-langile; Internet pausaldia (1998-2001), non denok aurkitu behar omen genuen lanpostu bat konektatuak ibiltzearen ibiltze hutsagatik, non, bide batez, Frantzia koloreanitz baina bakarrak, kulturanitz eta kultuak eraman behar omen zituen mundu-kopa guztiak. Baina hara, gure ilusio erreserba guztiak xahutu ditugu, hondoa jo dugu, idortuta gaude, zenbaki gorritan ez bada.

Hala beharturik, zera ulertu dugu: ekonomia ez da krisian dena, ekonomia bera *da* krisia; lana ez da gabezian dagoena, baizik eta lana bera dago soberan; patxadaz pentsatuz gero, deprimitzen gaituena ez da krisia, baizik eta hazkundea. Burtsa-tasen litaniak, gutxi-asko, latinez emandako elizkizunak bezain bat hunkitzen gaituela aitortu beharra dago. Gure zorionerako, hamaikatxo gara ondorio berdinera iritsitakoak. Ez gara iruzur zein azpijoko hainbaten kontura bizi direnez hitz egiten ari, ezta RMIan izena emanda hamar urte daramatzatenez. Ez gabiltza beren lanarekin identifikatzera iritsi ezinean, beren aisietara dedikatzen diren horietaz. Ez gabiltza zokoratuez, bazterrean bizi direnez, gutxiengoa egin eta gehiengoa osatzen duten horietaz. Ez gabiltza, ezta ere, erretiratuen adibidea nahiz lanesku malguaren gain-esplotazio zinikoa nabarmentzera datorren *masa-desatxikimendu* bitxi batek jotako guzti horietaz. Ez gara horietaz ari, nahiz eta, aldez edo moldez, gure ondorio bertsuetara iritsiak beharko luketen beraiek ere.

Zehazki, FMIko Boeingen pasaera basatia begiztatu eta Mundu Banku apur bat dastatu izanari esker fede ekonomiko osoa galdu duten herrialde eta, are, kontinente horietaz hitz egiten ari gara. Hangoak ez dauka zer ikusirik Mendebaldean ekonomiak jasaten duen bokazio krisi

motelarekin. Ginea, Errusia, Argentina nahiz Bolivian ematen dena, ekonomiaren erlijioaren eta bere apaizgoaren sinesgarritasun galtze bortitz eta iraunkorra da. Mundu Bankuan aditzen den txantxa: «Zer da FMIko mila ekonomista itsasoaren hondoan? –Hasiera on bat». Errusiar txistea: «Bi ekonomialarik topo egin, eta batak besteari: –Zuk ulertzen al duzu gertatzen dena? Besteak erantzun: «–Zaude, azalduko dizut». «–Ez, ez –lehenak berriz– azaltzea ez da zaila, ni ere ekonomialaria naiz. Ez, galdetzen dizudana da: ulertzen al duzu?».

Apaizgoak berak disidentziara pasa eta dogma kritikatzearen plantak egiten ditu, baita saldoka egin ere. Ustezko «zientzia ekonomikoaren» azken korronte apur bat biziak –txantxarik gabe «ekonomia ez autistikoa» deritzon korronteak–, honezkero lanbide bilakatu du zientzia ekonomikoaren usurpazio, prestidigitazio mugimendu trebe nahiz datu edulkoratuak erakustea. Hona zientzia ekonomikoaren eginkizun hautemangarri bakarra: menderatzaileen asmakerien inguruan eki-saindua astintzea, beren men egiteko deiak zeremonia pizar batez janztea, eta, azkenik, erlijioek beti egin duten moduan, *azalpenak eskaintzea*. Izan ere, zoritxarrak jasangarri izateari uzten dio, den bezalaxe azaltzen duen une beretik: inolako kausa eta arrazoirik gabea.

Diruak begiramen osoa galdu du toki guztietan, bai daukatenen aldetik, bai eta faltan dutenen aldetik ere. Gazte alemaniarren ehuneko hogeik, etorkizunean zer izan nahi duten galdetuta, «artista» erantzuten dute. Dagoeneko, lana ez da gizatasunaren elementu jakin baten modura pairatzen. Enpresetako kontabilitateak aitortzen du jada ez dakiela non sortzen den balioa. Hamarkada batetik hona, merkatuaren ospe txarrak merkatua bera suntsituko zukeen bere apologisten amorru eta bitarteko zabalengatik izan ez balitz. Aurrerapena, leku guztietan, hondamendiaren sinonimo bilakatu da zentzurik orokortuenean. Andropoven garaiko Sobietar Batasunean denak ihes egiten zuen bezala, ihesi doa dena ekonomiaren mundutik. Gure agintarien boluntarismorako deietan, jadanik arrastoa galdua diogun etorkizunaren aldeko diskurtso sutsu guztietan eta dena delako «erreformaren» gaineko fede-aitortzetan, SESBen azken urteez zerbait dakienak aise adituko ditu Murruaren egiturako aurreneko arrakalak. Bloke sozialistaren gainbeherak kapitalismoaren garaipena berretsi baino, bere aldaera baten porrota egiaztatu zuen. SESBen heriotza ez zen, gainera, herri matxinatu baten egintza izan, baizik eta nomenklatura birmoldatu batena. Klase gidariaren frakzio batek, sozialismoaren amaiera proklamatuz, hauxe egin zuen: lehenik, herriarekin lotzen zituen bete-

behar anakroniko guztiak hautsi; ondoren, ordura arte guztien izenean kontrolatu zuenaren gaineko kontrol *pribatua* beretzat hartu. «Ordaintzearen itxurak egiten dituztenez, egin ditzagun lan egitearen itxurak» esaten zen fabriketan. «Hala bedi! –erantzun zuen oligarkiak–. Utz diezaiogun bada itxurak egiteari!». Batzuentzat, lehengaiak, industria-azpiegiturak, industria-gune militarra, bankuak; eta besteentzat, diskotekak, miseria edo emigrazioa. Andropoven agindupeko Sobietar Batasunean inork ez zuen sinesten, eta egungo Frantzian ere inork ez du sinesten, inon ere ez: ez batzar-aretoetan, ez lantegietan, ezta bulegoetan ere. «Hala bedi!» erantzuten dute «ekonomiaren arau gogorrak» leuntzeko nekerik txikiena ere hartzen ez duten ugazabek eta gobernuek. Fabrikak gauez lekualdatu eta langileei itxieraren berri goizean ematen dieten horiek, edota grebak etetera duda zirkinik gabe GIGNa[15] igortzen dutenek –SNCMeko[16] greban edo Renneseko banaketa-gune baten okupazioan egin zuten bezala–. Izan ere, boterearen egungo jarduera hilgarri osoa, alde batetik, hondamenaren kudeaketan, eta bestetik «ekonomia berri» baten oinarriak ezartzean datza.

---

15. *Groupe d'Intervention de la Gendarmerie Nationale*. Gendarmeriaren esku hartzeko taldeak.

16. *Société Nationale Maritime Corse Méditerranée.* Ferry konpainia publiko bat.

Ekonomiara, alabaina, ohituak ginen. Hainbat belaunalditatik hona diziplinatzen ibili zaizkigu, baketzen, *subjektu* bilakatzen, naturalki produktiboak eta kontsumitzeagatik alegerak diren subjektuak. Eta hara non agertzen zaigun ahanzten ahalegindu ginen hura: *ekonomia politika bat dela*. Eta politika hori, gaur egun, humanitate jakin baten baitako hautaketa politika bat dela, hain zuzen, bere masan azaleko eta ez-beharrezko bilakatu den humanitate baten hautaketa politika. Colbertengandik De Gaullerengana, Napoleon IIIengandik pasaz, Estatuak beti irudikatu du ekonomia politika bat bezala. Ezin gutxiago esan hortik etekinak ateratzen dituen burgesiaz, edota horri aurre egiten dion proletalgoaz. Ekonomia errealitate gisa ulertzearen itxurak egin dituen bakarra burgesia txikia da, biztanleriaren tarteko geruza bitxi hori, *inoren alde ez daudenen* nahaspila indarge eta xelebrea. Hala eginda, beren neutraltasuna babestua baita. Frantzian, merkatari txiki, ugazaba txiki, funtzionario txiki, koadro, irakasle, kazetari zein denetariko artekariek osatzen dute ez-klase hori, beren bizitxoak Historiatik eta bere zalapartatik kanpo pasatu nahiko luketenek osatutako gelatina soziala, alegia. Padura hau da, aldez aurretiko joera batengatik, kontzientzia faltsuaren txapelduna, eta denetarako prest legoke, bere loaldi arin horretan, inguruan triskantzak

eragiten dituen gerrarekiko begiak itxita mantentzearren. Horrela, Frantzian, obsesio berri baten asmakuntzak markatzen du frontearen argipen bakoitza. Azken hamar urteotakoa ATTAC izan da, hots, bere Tobin tasa imajinagaitza –zeinak gauzatua izateko zer eta mundu-gobernu baten eraketa beharko lukeen–, bere finantza-merkatuen aurkako «ekonomia errealaren» apologia, eta bere Estatuaren nostalgia hunkigarria. Iraun beharrekoa iraun zuen komediak, eta maskarada hutsal batean amaitu zen. Obsesio batek bestea ordezkatzen duenez, baina, hona *desazkundea*. ATTAC bere eskola herrikoien bidez, ekonomia *zientzia gisa* salbatzen ahalegindu bazen, *desazkundea*, bera, ekonomia *moral gisa* salbatzeko asmotan dabil. Abian den apokalipsiarentzat irtenbide bakar bat, desaztea. Gutxiago kontsumitu eta gutxiago ekoitzi. Alaiki, gartsu eta neurritsu bihurtu. Bio jan, bizikletan ibili, erretzeari utzi eta erosi beharreko produktuak zorrozki zaindu. Gutxieneko zehatzarekin konformatu. Borondatezko sinpletasuna. «Benetako aberastasunak berraurkitu, mundu osasuntsu baten baitako giza harreman patxadatsuen betetasunean». «Gure kapital naturala ez ustiatu». «Ekonomia osasuntsu» baterantz egin. «Kaosaren bidezko erregulazioa saihestu». «Demokrazia eta humanismoa zalantzan jarriko lituzkeen krisi sozialik ez eragin». Finean: aurreztaile bihurtuz, *ekonomo bilakatu*. Ai-

tatxoren ekonomiara itzuli, burgesiaren urrezko arora: 1950eko urteak. «Norbanakoa ekonomo ona bihurtzen denean, bere jabegoak ezin hobeki betetzen du dagokion eginkizuna, hain zuzen, norbanako horri bere bizitzaz gozatzeko aukera ahalbidetzea, jendartetik babestuta edo bere bizitza pribatuaren barrutian».

Grafista, eskuz egindako jertsea soinean, fruta koktel bat edaten ari da, lagunartean, kafe etniko baten terrazan. Hitz-aspertuan dabiltza, adeitsu, elkarri neurriz zirikatuz, zarata gehiegirik sortu gabe, baina ezta gutxiegirik ere. Begirada irribarretsuak botatzen dizkiote elkarri, poz-pozik daude: hain dira zibilizatuak! Geroago, haietako batzuk auzoko lorategi baten lurra jorratzera joango dira, besteak buztingintza, edo zen-a, edo animazio film bat egitera doazen bitartean. Gizadi berri bat eratzearen sentimendu osoak biltzen ditu, denetan jakintsuena, finena, azkena. Eta arrazoi dute. Apple eta desazkundea ere, kurioski, etorkizuneko zibilizazioari dagokionez bat datoz. Antzinako ekonomiara itzultzeko batzuen ideia horrek sortutako lainopean, aurrerapauso teknologiko handia egiteko besteen ideia ari da aurrera egiten. Historian ez baita itzulerarik existitzen. Iraganera itzultzeko gonbidapen batek bere garaiko kontzientzia formetariko bat baino ez du adierazten, eta ez atzerakoiena. Desazkundea *Casseurs de pub*

aldizkariko publizista disidenteen ikurra izatea ez da kasualitatea. Zero hazkundea asmatu zuen enpresaburu eta funtzionario taldeak –Erromako kluba 1972an– MITeko zibernetika adituen txosten batean oinarrituta jardun zuen.

Bat etortze hori ez da halabeharrezkoa. Ekonomiari errelebo bat lehenbailehen aurkitu beharraren baitan kokatzen da. Kapitalismoak, bere probetxurako, lotura sozialetatik geratzen zen guztia deuseztatu du, eta orain, *bere oinarri propioen gainean*, loturon berrosatzeari ekin dio. Inkubatzailea metropolitar soziabilitatea da. Era berean, mundu naturalak ere suntsitu ditu, eta orain suntsitutako mundu natural horiek, sentsore egokiz hornituta, inguru kontrolatuen izaera emanez birsortzearen ideia zoroari heldu dio. Gizadi berri horri ekonomia berri bat dagokio: existentziatik banatutako esfera bat izan beharrean, berau osatzen duen ehuna dena; giza harremanen materia izatea nahiko lukeena; lanari definizio berri bat ematen diona, norberaren gaineko lanarena, eta Kapitala, kapital humano gisa definitzen duena; ekoizpenaren ideia berri bat, *harreman ondasunen* ekoizpena alegia, eta kontsumoarena, situazioen kontsumoa. Denaren gainetik, gizakiaren tasun guztiak barnebilduko lituzkeen balioaren ideia garatzen duen ekonomia berria. Ernatzen ari den «bioekonomia» honek

kudeatu beharreko sistema itxi baten modura ulertzen du planeta, eta bere asmoa bizitzaren parametro guztiak integratuko lituzkeen zientzia baten oinarriak ezartzea da. Halako zientzia batek indize gezurtien garai onak faltan hartzera eraman gintzake, herriaren zoriontasuna BPGaren hazkundearen arabera neurtu nahi zuten garaiak alegia. Orduan, behintzat, gezurrok ez zituen inortxok ere sinesten.

«Bizitzaren alde ez ekonomikoak birbaloratu» hori, desazkundearen agindua den hein berean, Kapitalaren erreforma-programa ere bada. Eko-herrixkak, bideo-zaintza kamerak, espiritualtasuna, bioteknologia edota adeitasuna, eratzen ari den «zibilizazio paradigma» beraren parte dira, hain zuzen, oinarritik sortutako ekonomia totalarena. Bere matrize intelektuala zibernetika da, sistemen zientzia, hau da, *beren kontrolarena*. XVII. mendean barna, ekonomia behin betiko inposatu ahal izateko, eta, ekonomiarekin, lanaren nahiz zekenkeriaren bere etika, fauna oso bat ezereztatu eta giltzapetu behar izan zen: hala egonean zebiltzan alferrak nola eskaleak, sorginak, eroak, bizizaleak, zein aitormenik gabeko beste hainbat, hots, bere existentzia soilaz interesaren eta kontinentziaren ordena ezbaian jartzen zuen gizateria oso bat. Ekonomia berria ez da inposatuko mutaziorako subjektu eta leku

aproposen aukeraketarik gabe. Hainbestetan iragarritako kaosa aukeraketa horren unea izango da, edo egitasmo gorrotagarri honen gaineko gure garaipenaren unea.

## SEIGARREN ZIRKULUA

## «INGURUMENA ERRONKA INDUSTRIAL BAT DA»

URTEKO AURKIKUNTZA DA EKOLOGIA. Baziren hogeita hamar urte kontu hori Berdeei uzten geniela, inozoki barre egiten geniola igandean, astelehenean kezkati plantak hartzeko. Eta hara non, ezustean, buru gainean daukagun. Hara non irrati uhinak inbaditu dituen, udako kanta izango balitz bezala, zeren hogei gradu egiten baititu abenduan.

Arrain espezieen laurdena desagertu da ozeanoetatik, eta gainerakoek ez daukate luzerako.

Hegazti-gripearen alerta: hegazti migratzaileak tiroka akabatuko omen dituzte saldoka, hegan doazela.

Emakumeen esnean aurkitzen den merkurio tasa behiarenean onartutakoa baino hamar aldiz altuagoa da. Eta sagarra hozkatzean puzten diren ezpain horiek, merkatuan erosiagatik ere.

Keinu sinpleenak toxiko bilakatu dira. Hogeita hamabost urterekin hiltzen gara, «gaixotasun luze baten ondoren», gaixoaldia ere gainerako gauza guztiak kudeatu ditugun moduan kudeatuz. Zaintza paliatiboen B pabilioira bidali aurretik behar genituen ondorioak atera.

Onartu beharra dago: eguneroko bazka bilakatu diguten «katastrofe» guzti honek ez gaitu hunkitzen. Ez behintzat bere ondorio aurreikusgarriren batekin kolpatzen ez gaituen bitartean. Axola zaigu beharbada, baina ez gaitu *hunkitzen*. Eta horretan datza justuki katastrofea.

Ez dago «ingurumen katastroferik». *Ingurumena da* katastrofea, horixe dago. Ingurumena da gizakiari dena galdu duenean geratzen zaiona. Auzo batean bizi direnek, kale batean, mendiarte batean, gerra batean, *atelier* batean, ez dute «ingurumenik», *mundu* batean daude, mugimenduan, presentziaz inguratuta, arriskuz, lagunez, etsaiez, bizitza eta heriotza-puntuz, orotariko izakiz. Mundu horren sendotasuna, izaki nahiz leku horiekin guztiekin lotzen gaituzten soken intentsitatearen eta kalitatearen araberakoa da. *Ingurumen bat edukitzeko*, gu baino ez gaude, azken desjabetzearen umeok, azken orduko erbesteratuok, mundura porlanezko kuboetan jaiotzen garenok, fruituak supermerkatuetan biltzen ditugunok, munduaren oihartzuna telebistaren bidez zelatatzen

dugunok. Gu baino ez gaude gure deuseztatzearen ikuskizunaz gozatzeko, atmosfera aldaketa huts bat izango balitz bezala. Gu baino ez, hondamendiaren azken aurrerapenekin sumindu, eta pazientzia handiz haien zerrendaketa entziklopedikoa osatzeko.

Ingurumen baten gisara finkatu dena munduarekiko harreman mota bat da, *gestioan*, hau da, arroztasunean, oinarritutakoa. Halako harreman bat non ez gauden eginak, *baita ere*, zuhaitzen murmurioaz, etxeetako frijitu usainez, uraren isuriaz, eskoletako jolas-orduen oihu-algarez edota udako gauen hezetasunaz. Halako harreman bat non ni nagoen, eta gero nire ingurumena, ni inguratuz, inoiz ni osatzera iritsi gabe. Aldamenak gara jabekideen bilkura planetario batean. Inork ez luke tamainako infernurik asmatuko.

Ez da inoiz egon «ingurumen» izena merezi izan duen inguru materialik, salbu eta orain, agian, metropoliak. Aho-iragarkien ahots digitalizatua, tranbia eta bere txistu hiper modernoa, pospolo erraldoi formadun kale-argi urdinxka, modelo zapuztuen modura jantzitako oinezkoak, bideozaintza kamera baten errotazio isila, metro estazioen, supermerkatu kutxen nahiz bulegoetako txartel zulagailuen txilin-hots zuhurrak, ziber-kafetegietako giro elektronikoa, eta denetan plasma-pantailak, errepide azkarrak, latexa. Inoiz baino

gutxiago behar ditu antzeztoki honek gora eta behera dabilzkion aktoreak. Inoiz baino *automatikoagoa* da ingurua. Inoiz baino ezaxolatiagoa da testuingurua, eta, bizirik irautearen ordainean, horixe besterik ez digu eskatzen, inoiz ez bezalako ezaxola izatea. Baliteke azkenean *ingurumena* horixe izatea: metropoliaren beraren munduarekiko harremana, islatzen dena, justuki, metropoliari ihes egiten dion guztian.

Ondorengoa da egoera: mundu hau deuseztatzeko enplegatu zituzten gure gurasoak, eta orain berreraikuntza lanetan jarri nahiko gintuzkete gu, eta lan hauek, gainera, errentagarriak suertatzea. Berotze klimatikoaren froga berri bakoitzak kazetariei nahiz publizistei eragiten dien asaldura morbosoak agerian uzten du 1970eko urteez geroztik hamaika bider iragarri diguten kapitalismo berdearen altzairuzko irribarrea. Bazirudien ez zela sekula iritsiko, baina hara, hemen dago! Ekologia da! Irtenbide alternatiboak, kapitalismo berdea dira! Baita planetaren osasuna ere! Ez dago zalantzarik: berdez tindatu da airea; ingurumena izango da XXI. mendeko ekonomia politikoaren ardatza. Katastrofismoaren gorakada bakoitzari «konponbide industrial» andana bat egokituko zaio aurrerantzean.

H bonbaren asmatzaile Edward Teller-ek, berotze klimatikoa geratzeko, estratosferan milioika tona metal-hauts barreiatzea iradokitzen du. NASAk,

bere misilen aurkako babes-ezkutua gerra hotzaren museo fantasmagorikoan gorde behar izateagatik zapuztuta, eguzki-izpi zoritxarrekoetatik babestuko gaituen ispilu erraldoi bat jarriko duela agindu digu, non eta ilargi-orbitatik harago. Etorkizuneko beste irudi bat: Sao Paolotik Stockholmera bioetanolez dabilen gizadi motorizatu bat, Beauce aldeko zereal ekoizlearen amets bat, finean, munduko soro *guztiak* soja eta azukre erremolatxako ekoizpenerako erabiltzea besterik eskatzen ez duena. Auto ekologikoek, energia garbiek nahiz ingurumen aholkularitzak iritzi-aldizkarietako orri distiratsuak betetzen dituzte, Chanel markaren azken publizitatearekin eskuz esku.

Ingurumenak, izan ere, gizadiari planteatzen zaion lehen *arazo globala* izatearen meritu paregabea omen dauka. *Arazo globala,* alegia, globalki antolatuta daudenek soil-soilik konpon dezaketen arazoa. Eta badakigu nor diren horiek. Gutxi-asko azken mendean desastrearen abangoardian egon diren eta, aurrerago ere, egongo diren taldeak dira, logo aldaketatxo baten prezio ziztrinean. EDFk[17] bere programa nuklearra *irtenbide berri* gisa aurkeztearen lotsagabekeriak ederki asko erakusten digu zein antzekoak diren irtenbide berriak eta arazo zaharrak.

---

17. *Électricité de France.* Frantziako elektrizitate enpresa nagusia.

Estatu idazkaritzetatik kafe alternatiboen atzegeletaraino, hitz bertsuekin adierazten dira kezkak; betiko hitz berberak, bestetik. *Mobilizatzea* da kontua. Ez berreraikitze lanetan, guda-osteko denboretan bezala; ez etiopiarrengatik, 1980ko urteetan bezala; ez lanpostuengatik, 1990eko urteetan bezala. Ez, oraingoan, ingurumenagatik da. Eskerrik asko, diosku ingurumenak. Ezkerreko herritargo txikia nahiz gaztediaren idealismo jakina suspertzera datoz, lubaki berean lerrokatuta, Al Gore edo Hulot-en[18] gisako ekologismoa, desazkundea eta Errepublikaren arima handiosak. Borondatezko austeritatea bandera gisa, lanean dabiltza «heldu den larrialdi ekologikoaren egoerarekin» bat egin dezagun. Euren erruduntasunaren masa borobil eta likitsa gure bizkar nekatuen gainera botata, baratzak landatu eta zaborrak sailkatzera ez ezik, euren oturuntza makabroaren soberakinekin konposta egitera ere bultzatu nahi gintuzkete.

Hona zein litzateke kudeatu beharreko gure fardela: energia nuklearretik irtetea, CO2 soberakinak atmosferan, izotz masaren urtzea, urakanak, izurriteak, munduaren gainpopulazioa, lurren erosioa, bizirik dirauten espezien desagertze ma-

---

18. Oso mediatikoa den ekologista frantziarra. Telebistan, naturaren inguruko erreportajeak produzitzen ditu.

siboa... «Norberari dagokio jarrerak aldatzea», dioskute, baldin eta gure zibilizazio eredu ederra salbatu nahi badugu. Gutxi kontsumitu beharra dago *kontsumitzen jarraitu ahal izateko*. Bio produzitu, *produzitzen jarraitu ahal izateko*. Norberak bere burua estutu, *estutzen jarraitu ahal izateko*. Horra mundu baten logika betikotzeko ahalegina, haustura plantak eginez. Horra nola nahiko gintuzketen konbentzitu, abian den mende honetako erronka industrial handietan busti gaitezen. Hain gaude txundituta ezen prest geundekeen arpilatzearen buru izan diren horiexen besoetan jausteko, atakatik atera gaitzaten.

Ekologia ez da soilik ekonomia totalaren logika, Kapitalaren moral berria ere bada. Hainbestekoa da bai sistemaren barne-krisia bai martxan dagoen hautaketaren zorroztasuna, non irizpide bat premiazkoa suertatzen baita, aukeraketak haren izenean burutzeko. Bertutearen ideia, garai batetik bestera, bizioaren asmakuntza baino ez da izan. Ekologiarik gabe ezinezkoa litzateke egungo bi elikadura filialak justifikatzea, «osasuntsua eta biologikoa» bata, aberatsentzat eta beren umeentzat, toxikoa bestea, jakina denez, plebearentzat eta obesitatera kondenatutako bere kumeentzat. Hiper-burgesia planetarioak nekez joaraziko luke errespetagarritzat bere bizimodua, bere azken kapritxoek ez balute «ingurumena zorrozki errespe-

tatuko». Ekologiarik ezean ezerk ez luke kontrolaren garapen neurrigabearenganako objekzioak isilarazteko nahikoa autoritaterik.

Trazabilitateak, gardentasunak, ziurtapenak, eko-tasak, ingurumen bikaintasunak nahiz uraren poliziak, denek iragartzen dute datorkigun salbuespen-egoera ekologikoa. Dena baimentzen zaio Natura, osasuna eta ongizatea bereganatu dituen botere bati.

«Behin kultura ekonomiko berriak nahiz jokabideenak ohituretan txertatuta, hertsatze neurriak berez eroriko dira, *duda gabe*». Tamainako perspektiba txundigarriarekin, telebista-platoetako abenturazale baten ausarkeria barregarria behar da, dei egiteko, batetik, «planetaren mina» sentitu eta mobiliza gaitezen, eta aldi berean, honen guztiaren aurrean anestesiatuta gera gaitezen, neurriz eta zibilizatuki jokatuz. Aszetismo bio berria hauxe da alegia, guztioi eskatzen zaigun *auto-kontrola*, negoziatu ahal izateko, hain zuzen ere, sistemak bere buruari ezarritako salbamendu operazioa. Ekologiaren izenean estutu beharko dugu aurrerantzean gerrikoa, behinola ekonomiarengatik bezala. Errepideak bidegorri bilaka litezke noski, ez da halaber ezinezkoa, agian, latitudeotan, noizbait, gutariko bakoitza errenta-berme batez saritua izatea, baina, izatekotan, existentzia zeharo terapeutiko baten pre-

zioan izango da. Auto-kontrol orokorrak ingurumen-diktadura bat jasatetik libratuko gaituela diotenak gezurretan dabiltza: batak bestearen ohea egingo du, eta bi-biak izango ditugu.

Gizakia eta Ingurumena egongo diren bitartean, polizia egongo da bien artean.

Dena irauli beharra dago diskurtso ekologistetan. Norbanakoak eta gauzak kudeatzeko egungo erregimenaren desmasiak izendatzeko, «katastrofeez» ari diren tokian, guk haren funtzionamendu hain perfektuaren katastrofea besterik ez dugu ikusten. 1876-1879 urteetako gosetea, ordura arte eremu tropikalean inoiz ezagututako gosete uholderik handiena, mundu-lehorte batekin ez ezik, kolonizazioaren une gorenarekin ere egokitu zen, batez ere horrekin. Nekazari-munduaren nahiz elikagaiak ekoizteko jardunaren deuseztapenak gabeziari aurre egiteko bitartekoak desagerrarazi zituen. Ur gabeziak bainoago, hazkunde betean zegoen ekonomia kolonialak bete zituen lurralde tropikalak milioika hilotz haragigabetuz. Aldioro katastrofe ekologiko gisa aurkezten denak ez dio inoiz utzi, ezer baino lehen, munduarekiko harreman penagarri baten agerpena izateari. Ezer ez habitatzeak sistemaren astindu txikienaren, gorabehera klimatiko txikienaren mende uzten gaitu, babesgabe. Azken tsunamia gerturatzen ari zela, turistek olatuetan olgetan jarraitzen zuten bitartean,

irletako ehiztari-biltzaileak kostaldeetatik presaka urruntzen ziren, txoriei jarraika. Ekologiaren egungo paradoxa da, Lurra salbatzearen aitzakiarekin, astro honen hondamena eragin duenaren oinarriak baino ez dituela salbatzen.

Munduaren funtzionamendu erregularra, bere ohikotasunean, etenaldi behartu bat baino ez da gure desjabetze-egoeran, munduan nolabaiteko presentzia berreskuratzen dugun une arraro horietako bat. Datorrela petrolio erreserben agorpena, eten daitezela metropoliaren tempoa mantentzen duten nazioarteko fluxuak, aurreratu ditzagun nahasmendu sozial handiak, irits daitezela «populazioaren basa bihurtzea», «mehatxu planetarioa», «zibilizazioaren amaiera»! Edozein kontrol galera nahiago, krisi kudeaketa eszenatoki guztiak baino. Gomendio onenak, horrenbestez, ezin dira garapen jasangarriaren adituen aldean bilatu. Arazo izateari utz liezaiokeen horri erantzuteko elementu logikoak sistemaren disfuntzioetan, zirkuitulaburretan agertzen dira. Kyotoko protokoloaren sinatzaileen artean, beren konpromisoak betetzen dituzten herrialde bakarrak, euren borondatearen kontra bada ere, Ukraina eta Errumania dira egun. Ezetz asmatu zergatik. Nekazaritza «biologikoari» buruzko esperimentazio aurreratuena, mundu osoan, Kubako irlan egiten da, 1989az geroz. Ezetz asmatu zergatik. Afrikako pistetan bar-

na, eta ez beste inon, goratu da autoen mekanika, arte herrikoiaren mailaraino. Ezetz asmatu nola.

Krisia desiragarri bilakatzen duena da bere baitan ingurumenak ingurumen izateari uzten diola. Behartuta gaude errealitatearen erritmoak berraurkitzera, hor dagoenarekiko lotura berreskuratzera, lotura hori nahi baino gogorragoa suertatuta ere. Inguratzen gaituena ez da paisaia, panorama, teatroa, baizik eta bizitzeko eman zaiguna. Horrekin osatu beharra dugu, eta hortik ikasi. Ez diegu utziko «katastrofea» eragin dutenei honen baitako aukerak ebats diezazkiguten. Kudeatzaileak «dena hankaz gora» jarri gabe joerari nola buelta eman asmatzen dabiltzan bitartean, modu erabat platonikoan, guk, aldiz, «dena hankaz gora» lehenbailehen jarri beste aukera errealistarik ez dugu ikusten, bien bitartean sistemaren amiltze bakoitzari probetxu atereaz, indarra irabazteko.

New Orleans, *Katrina* urakana igaro ondorengo egunak. Atmosfera apokaliptiko horretan, han-hemenka, bizitza bat berrantolatzen da. Botere publikoak, hiriko biztanle txiroak laguntzera baino, *Carré Français* delakoaren auzo turistikoak garbitzera eta dendak babestera emanda dabiltza. Pasibotasun honen aurrean, forma ahaztuak birjaiotzen dira. Eremua husteko saiakera bortitz guztiekin ere, askok ez dituzte bazterrak hustu nahi izan.

«Ingurumen-errefuxiatu» gisa herrialdearen lau izkinetara deportatuak izateari uko egin diotenentzat, bai eta, *Black Panther* ohi batek egindako elkartasun-deialdiari erantzunez, toki guztietatik haiei batu zaizkien guztientzat, auto-antolakuntzaren ebidentzia berragertu da. Aste gutxiren buruan Common Ground Clinic erietxea altxatu dute. Lehen egunetik beretik kanpadendako erietxe honek doako zainketak eskaintzen ditu, gero eta puntakoagoak, boluntarioen etorrera ugari eta etengabeari esker. Urtebetetik hona, eguneroko erresistentziaren oinarrian dago klinika, gobernuaren bulldozerrek hiriaren zati hori promotoreen bazka bilakatzeko daramaten operazioari aurre egiten. Herri-jantokiak, hornidurak, kale-medikuntza, konfiskatze basatiak, larrialdiko bizitokien eraikuntza: norbanako bakoitzak bere bizitzan barna pilatutako jakinduria praktiko guztiak zabaltzeko eremu bat aurkitu du bertan. Uniforme eta sirena-hotsetatik urrun.

Katastrofearen aurretik New Orleansko auzo horietako bozkario txiroa, bertan nagusi zen Estatuarekiko mesfidantza, edota egoera orotatik onik ateratzeko bertakoen abilezia masiboa ezagutu zituena ez da harrituko hori gertatu izanaz. Alderantziz, anemiak jotako gure bizitegi-basamortuen eguneroko atomizatuan harrapatuta dagoenari zalantza piztuko zaio, halako determina-

ziorik egon ote daitekeenik. Urteetako bizitza normalizatuaren azpian lurperatutako keinuak berreskuratzea da, horratik, mundu honekin ez hondoratzeko bide baliagarri bakarra. Eta etor bedi horrekin gozatzeko aldia.

## ZAZPIGARREN ZIRKULUA

## «HEMEN ESPAZIO ZIBILIZATU BAT ERAIKITZEN ARI GARA»

LEHEN MUNDU-SARRASKIA (1914-1918): landa nahiz hirietako proletalgoaren parte zabal bat, kolpe batez, gainetik kentzea ahalbidetu zuen, askatasunaren, demokraziaren eta zibilizazioaren izenean. Itxuraz balio horiexen izenean ari da gauzatzen, bost urtetik hona, hilketa selektibo eta operazio berezien bidezko «terrorismoaren aurkako gerra». Hemen bukatzen da kidekotasuna: itxuretan. Zibilizazioa ez da jada indigenengana beste gabe eramaten den ebidentzia eztabaidaezina. Askatasuna ez da jada hormetan izkiriatzen dugun hitz hori, ezta itzala bailitzan jarraitzen dion «segurtasuna» hitzaz lagunduta ere. Eta demokrazia, mundu guztiak dakien bezala, disolbagarria da salbuespen legedi puruenetan –Estatu Batuetako torturaren berrezarpen ofizialean nahiz Frantziako Perben II legean, adibidez–.

Askatasuna, demokrazia eta zibilizazioa, mende batean, hipotesien egoerara murriztu dira. Hemendik aurrera, buruzagien zeregin guztia izango da hipotesi hauek nola edo hala balioesten dituzten baldintza material eta moralak, sinboliko eta sozialak babestea, hau da, taxutzea espazio bat non badirudien hipotesi hauek funtzionatu egiten dutela. Bitarteko guztiak dira onak helburu hauetarako, uler bedi: demokratikoetan azkenak, zibilizatuetan azkenak, segurtasuna lehenesten txapeldunak. Zeren, mende batean, erregimen faxisten munduratzeetan buru izan ohi baita demokrazia; zeren, mende batean, zibilizazioak ez baitio utzi suntsiketarekin errima osatzeari, Wagnerren nahiz Iron Maidenen doinuetara; zeren askatasunak 1929ko egun batez aurpegi bikoitza hartu baitzuen: bere burua leihotik behera botatzen duen bankeroarena, eta gosez hiltzen den langile-familiarena. Erabaki bide dute ordutik –demagun: 1945etik– demokrazia, askatasuna eta zibilizazioa segurtatzeko bitartekoen artean daudela, hala nola, masen manipulazioa, zerbitzu sekretuen jarduera, askatasun publikoen murrizketa eta polizia desberdinen subiranotasun erabatekoa. Eboluzio honen azken mailan, Parisko lehen alkate sozialista daukagu. Baketze urbanoari eta auzo herrikoi baten antolaketa polizialari azken ukituak ematen ari zaizkiela, kontu handiz kali-

bratutako hitzekin esplikatzen du: «Hemen espazio zibilizatu bat eraikitzen ari gara». Ez dago zer erantzun, dena behar da lehertu.

Bere orokortasun aire guztiekin, zibilizazioaren kontua ez da batere kontu filosofikoa. Zibilizazio bat ez da biziaren gainetik dabilen abstrakzio bat. Existentzia egunerokoena eta pertsonalena zuzentzen, inbaditzen eta kolonizatzen duen zerbait ere bada, dimentsio barrenekoena eta orokorrena, biak batera eusten dituena. Frantzian bereiztezinak dira zibilizazioa eta Estatua. Indartsuago eta zaharragoa den heinean, Estatuak gizartearen gainegitura, exoeskeletoa, izateari uzten dio eta bertan bizi diren subjektibitateen forma handiagoa hartzen du. Frantziar Estatua frantziar subjektibitateen trama bera da, bere subjektuen mendez mendeko zikiratzeak hartu duen itxura. Inor ez luke harritu behar, horren ondotik, pertsonaia politikoak izateak, askotan, ospitale psikiatrikoetako mundu-delirioen abiapuntu; guztiok aho batez onartzeak gure atsekabe guztien jatorrian gure buruzagiak daudela; denoi hainbeste gustatzeak haien aurka marmarrean ibiltzea, eta marmar egiteko modu hori izateak haiek nagusigora altxatzen dituen aklamazioa. Hemen ez baikara politikariez arduratzen gauza arrotz baten gisa, baizik eta norberaren parte gisa.

Pertsonaia politikoei esleitzen diegun bizitza, gerori ebatsi zaigun horixe bera da.

Salbuespen frantsesik baldin badago, hortik da. Ez dago, frantses literaturaren distira mundialaren baitan ere, anputazio honen fruitu ez denik. Literatura, Frantzian, zikiratuen dibertimenduari subiranoki utzi zaion espazioa da. Beren askatasun errealaren ezerezari egokitzen ez direnei onartu zaien askatasun formala da. Hortik, herri honetan, hainbat mendez geroztik, Estatu gizonek eta letra gizonek behin eta berriz elkarri egiten dizkioten begi-keinu lizunak; hortik, batzuek besteen jantziak gogoz janztea, eta alderantziz. Hortik, baita ere, frantses intelektualaren hain ozenki hitz egiteko ohitura, hain behean dabilenean; eta hortik, frantses intelektualak beti une erabakigarrian huts egitea, justuki, bere existentziari zentzua emango zion une bakarrean, baina bere lanbidetik desterratuko zuen unean.

Tesi defendatu eta defendagarria da literatura modernoa Baudelaire, Heine eta Flaubertekin jaio zela, 1848ko ekaineko Estatu-sarraskiaren ondorioz. Paristar matxinoen odoletik eta masakrea inguratu zuen isiltasunaren aurka jaio ziren literatura forma modernoak –*spleen*a, anbibalentzia, formaren fetitxismoa edota desatxikimendu morbosoa–. Frantsesek euren Errepublikari dioten atxikimendu neurotikoak, zeinaren izenean edo-

zein hanka-sartzek bere duintasuna berreskuratzen duen, eta edozein makurkeriak bere noblezia agiria, fundaziorako sakrifizioen errefusatzea luzatzen du uneoro. 1848ko ekaineko egunak –mila bostehun hildako borrokaldietan, baina milaka exekuzio sumario presoen artean, Legebiltzarra «*Vive la République!*» oihuekin hartzen azken barrikadaren errendizioa–, eta Aste Odoltsua, inolako kirurgiak bere arteaz ezaba ezin ditzakeen jaiotza orbanak dira.

Kojèvek idatzi zuen 1945ean: «Frantziaren eta frantsesen ideal politiko "ofiziala", Estatu-nazioarena eta "Errepublika bakar eta zatiezinarena" da oraindik orain. Bere arimaren barrentasunetan, baina, herrialdea ohartua dago ideal honen urritasunaz, ideia "nazional" hertsiaren anakronismo politikoaz. Egia da, sentimendu honek ez du oraindik ideia argi eta bereizi baten maila erdietsi: herrialdeak ezin du, ez du nahi oraindik agerian formulatu. Gainera, bere iragan *nazionalaren* dirdira paregabea dela eta, Frantziari bereziki zaila egiten zaio Historiaren aro "nazionalaren" amaiera argiki aitortu, zintzoki onartu, eta horren ondorioak ateratzea.Nazionalismoaren armadura ideologikoa osoki sortu eta mundu osora zabaldu duen herrialdearentzat, gogorra da onartzea hura ez dela, honezkero, artxibategi historikoetan sailkatu beharreko pieza bat besterik».

Estatu-nazioaren eta bere doluaren kontuak, *frantses ondoeza* deitu behar den horren muina osatzen du, mende erdi batetik hona. «Alternantzia» esaten diogu edukazioz duda-muda tetanizatu horri, ezkerretik eskuinera pasatzeko modu pendular horri, eskuinetik ezkerrera egiten duena gero, fase maniakoa fase depresiboari jarraitzen zaion moduan, fase batek bestea prestatzen duen moduan, Frantzian indibidualismoaren oratoriarik kritikoenak eta zinismo basatienak elkarrekin bizi diren moduan, baita eskuzabaltasunik handienak eta masekiko ikara obsesiboak. 1945etik, ondoez horrek ez dio sakontzeari utzi –soilik 68ko maiatzaren eta honen insurrekziogrinaren alde hartu zuen desagertzeko itxura–. Estatu, nazio eta errepubliken aroa ixten ari da; bere baitan bizirik zeukan guztia sakrifikatu dien herrialdeak zurturik jarraitzen du. Jospinen «Estatuak ezin du dena!» esaldi sinpleak eragin zuen eztandak aditzera ematen digu zer nolakoa eragingo duen, goiz ala berandu, honako errebelazioak: Estatuak ezer ere ezin duela. Engainatua izatearen sentimendu horrek ez dio handitu eta gangrenatzeari uzten. Edozein konturekin hazten den amorru ezkutuaren sorburua. Nazioen aroaren dolu egin gabea da frantziar anakronismoaren giltza, baita erreserban dituen aukera iraultzaileena ere.

Emaitza edozein dela ere, datozen hauteskunde presidentzialen funtzioa frantses ilusioen amaiera-abisua jotzea da, burbuila historiko hau lehertzea. Zeren burbuila honek ahalbidetzen baititu CPEren aurkako mugimenduaren gisako *gertaerak*, atzerritik 1970eko urteetatik ihes egindako amesgaizto bat bailiran ikusi direnak. Horregatik, egiaz, inork ez ditu hauteskundeok nahi. Mendebaldeko eremuaren linterna *gorria* da, izan, Frantzia.

Mendebaldea, egun, Abraham M1 tanke batean, rock gogorra entzunez, Fallujahren erasora doan GIa[19] da; Mongoliako lautaden erdian galduta dabilen turista, denen barregarri, bere kreditu txartelari atxikia salbazio taulari nola; Go jokoa beste zaletasunik ez daukan managerra; zoriontasuna jantzi, mutil eta krema artean bilatzen duen neska; giza-eskubideen aldeko militante suitzarra, munduan gora eta behera dabilena, errebolta guztien lagun, baldin eta hauek porrot egin badute; askatasun sexuala bermatu ziotenetik askatasun politikoez fututzen den espainiarra; artearen zale bat, miresle txundituei aurkezten, jenio modernoaren azken adierazpide gisa, mende oso bateko artistak, guztiak lehian zibilizazioaren aurpegira tu nork hobeki egin, surrealismotik hasi eta Vienako akzionismoraino. Azkenik, mendebaldea da budis-

19. Amerikako Estatu Batuetako armadako soldadua.

moan kontzientziaren teoria errealista bat aurkitu duen zibernetikoa, eta bere azken aurkikuntzen inspirazio bila metafisika hinduistara jo duen partikulen fisikaria.

Bere hondamendiaren profezia guztietatik bizirik iraun duen zibilizazioa da mendebaldea, eta estratagema berezi baten bidez iraun ere. Burgesiak bere burua *klase gisa* ukatu behar izan duen moduan, gizartearen –langiletik baroiraino– burgestea ahalbidetzeko. Kapitalak bere burua sakrifikatu behar izan duen moduan, *soldata harreman gisa*, harreman sozial gisa inposatzeko, horrela, finantza-kapital ez ezik, kultura-kapital nahiz osasun-kapital bilakatuz . Kristautasunak erlijio gisa bere burua sakrifikatu behar izan duen moduan, egitura afektibo gisa, apaltasun, erruki eta ezintasunerako agindu lauso gisa bizirauteko, hala *sakrifikatu du Mendebaldeak bere burua zibilizazio berezi gisa, kultura unibertsal gisa inposatzeko*. Honela laburbiltzen da operazioa: hiltzear den entitate batek bere burua sakrifikatzen du eduki gisa, forma gisa bizirauteko.

Norbanako puskatua forma gisa salbatzen da, *coaching*aren teknologia «espiritualei» esker. Patriarkatua, emakumea arraren ezaugarri penagarri guztiekin zamatuz: borondatea, auto-kontrola, sentsibilitate-eza. Gizarte desintegratuak soziabilitate eta dibertimendu izurrite bat hedatuz. Mende-

baldearen fikzio iraungi guztiek artifizioei esker eusten diote horrela, eta artifizio horiexek dira, izan ere, fikzioak puntuz puntu gezurtatzen dituztenak.

Ez dago «zibilizazioen arteko talkarik». Dagoena zera da, zibilizazio bat heriotza klinikoan, eta bere gainean biziraupen artifizialerako aparailu oso bat jarrita, atmosfera planetarioan kirats karakteristiko bat hedatzen. Dagoeneko ez du bere «balio» guztien artetik bakar batean ere sinesteko, zerbait bada ere, eta baieztapen orok keinu lizun baten efektua egiten dio, puskatu, *deseraiki*, zalantza egoera batera eraman beharreko probokazio batena. Mendebaldeko inperialismoa, gaur egun, erlatibismoarena da, «zure ikuspuntua da» jarrerarena, oraindik orain zerbaitetan sinesteko, zernahi baieztatzeko aski babo, aski primitibo den guztiaren aurkako zeharkako begirada edo protesta minduarena. Intelligentsia unibertsitario eta literario guztian begi-keinu konplizeak egiten dituen kuestionamenduaren dogmatismo hori da. Inteligentzia postmodernisten artean ezein kritika ez da erradikalegia, ziurtasun ezerez bat gordetzen duen artean. Eskandalua, orain mende bat, ukazio apur bat zaratatsu orotan zetzan; egun, aldiz, dardarik gabeko baieztapen orotan datza.

Ez dago inolako ordena sozialik ezer egia ez denaren printzipioan oinarrituz iraun dezakeenik. Horiek horrela, *eutsiarazi* egin behar zaio. Gauza

guztiei «segurtasunaren» kontzeptua aplikatzeak adierazten du, egun, izakiei berei, jokabideei eta tokiei, dagoeneko berez onartuko ez luketen ordena ideal bat txertatzearen egitasmoa. «Ezer ez da egia» horrek ez dio ezer munduaz, baina dena dio egiaren kontzeptu mendebaldarraz. Egia, hemen, ez da ulertzen izakien nahiz gauzen ezaugarri bat bezala, baizik eta bere errepresentazio bezala. Egiatzat jotzen da esperientziarekin bat datorren errepresentazio bat. Zientzia da, azken aukeran, egiaztatze unibertsalaren inperioa. Aitzitik, giza jokabide guztiak, arruntenetatik jakintsuenetara, modu desberdin batez formulatutako ebidentziaz osatutako harroin batean oinarritzen dira, praktika guztiak abiatzen dira puntu batetik non gauzak eta errepresentazioak modu bereiztezin batez dauden lotuta, bizitza orok darama kontzeptu mendebaldarrak ezagutzen ez duen egia dosi bat. Mintzo garenean, hemen, «egiazko jendeaz», ergel horiez barre egiteko izaten da beti. Horrexegatik, mendebaldarrak gezurti eta hipokritatzat dituzte haien kolonizazioa jasan duten guztiek. Horrexegatik, *daukatenari diote* inbidia, euren aurrerapen teknologikoari, baina sekula ez *direnari* –arrazoi osoz mespretxatua–. Ezingo litzateke institutuetan Sade, Nietzsche eta Artaud irakatsi, aurretik ez balute egiaren nozio hori deskalifikatu. Baieztapen guztiak amaigabe geldiaraztea, hala-

beharrez azaleratzen diren ziurtasun guztiak pausoz pauso desaktibatzea, horra mendebaldeko inteligentziaren zeregin luzea. Polizia eta filosofia horretarako bi bitarteko konbergente dira, nahiz eta formalki desberdinak izan.

Jakina, erlatiboaren inperialismoak bere tamainako aurkaria aurkitzen du edozein dogmatismo hutsetan, edozein marxismo-leninismotan, edozein salafismotan, edozein neo-nazismotan: mendebaldarren gisara, baieztapena eta probokazioa nahasten dituen edonor.

Gauzak honela, parez pare daukaguna gizarte baten krisia ez, baizik eta zibilizazio baten desagerpena dela ukatzen duen erantzun sozial soil bat, haren betikotzearen konplize bilakatzen da. Ohiko estrategia bat ere bada honezkero, gizarte hau kritikatzearena, zibilizazio hau salbatzearen itxaropen hutsalarekin.

Horra. Hilotz bat daukagu bizkar gainean, baina ezin gara beraz edonola libratu. Ez dago zer itxaron zibilizazioaren amaieratik, bere heriotza klinikotik. Bere horretan, historialarien interesa baino ezin du piztu. *Gertaera* bat da, *erabaki* bilakatu behar da. Gertaerak saihesgarriak dira, erabakia politikoa da. Zibilizazioaren heriotza erabaki, hori gertatzeko *moduaren* denaren ardura gureganatu: erabakiak baino ezin gaitu hilotzaz libratu.

MATXINADA BAT NONDIK HASTEN DEN ere ez gara oroitzen. Hirurogei urteko baketzeak, hirurogei urteko iraulketa historikoen eteteak, hirurogei urteko anestesiatze demokratiko eta gertaeren kudeaketak, horiek guztiek ahultze bat eragin digute, hala gure errealitatearen pertzepzio bat-batekoan, nola martxan dagoen gudarekiko sen partisanoan. Pertzepzio hori berreskuratu behar dugu, hasteko.

Ez du balio *amorratzeak*, bost urtetik hona hain nabarmenki antikonstituzionala den Eguneroko Segurtasunaren Legea indarrean dagoela eta. Alferrik da marko legalaren inplosio betearen aurka legalki protestatzea. Kontsekuenteki antolatu beharra dago.

Ez du balio *konprometitzeak*, ez halako edo bestelako herri-kolektiboan, ez halako edo beste-

lako ezker-muturreko kale itsuan, ez azken iruzur asoziatiboan. Egungo ordenari buru egiteko asmoa omen duten antolakunde guztiek miniaturazko Estatu txotxongiloen forma, ohitura eta lengoaia dauzkate. «Politika beste modu batera egiteko» nahikeria horiek guztiek, orain arte, estatu-pseudopodoen zabalkunde mugagabeari baino ez diote lagundu.

Ez du balio jada *erreakzionatzeak*, eguneroko albisteen aurrean; informazio bakoitza operazio baten moduan ulertu beharra dago, deszifratu beharreko estrategiez osatutako etsai-zelai batean gertatzen dena, eta, justuki, honengan edo bestearengan halako edo holako erreakzioa eragitea helburu duena: operazio hori da, izan ere, itxurazko informazioaren barruan gordetzen den egiazko informazioa.

Ez du balio *itxoiteak* –argipen bat, iraultza, apokalipsi nuklearra edo zeinahi mugimendu sozial–. Itxoiten jarraitzea erokeria bat da. Katastrofea ez da datorrena, hemen daukaguna baizik. Zibilizazio baten erortze mugimenduaren *baitan* gaude honezkero. Erabaki bat hartzeko unea da.

Itxoiteari uzteak esan nahi du, aldez edo moldez, logika matxinoan sartzea. Esan nahi du gure gobernu buruen ahotsean entzutea, berriro ere, gainetik kendu ezin duten izu-dardara txiki hori. Zeren gobernatzea, jendetzak zintzilikatuko zai-

tuen unea hamaika saihesbidez atzeratzea besterik ez baita, eta edozein gobernu ekintza, biztanleriaren kontrola ez galtzeko modu bat.

Muturreko isolamendu eta muturreko ezintasun puntu batetik abiatzen gara. Dena dago eraikitzeko, matxinada prozesu batean. Ezerk ez dirudi matxinada bat baino gertagaitzago, baina ezer ez da beharrezkoago.

Egiazkoa sentitzen dugun horri atxikitzea.
Hortik abiatu.

ENKONTRU BAT, AURKIKUNTZA BAT, greba mugimendu handi bat, lurrikara bat: gertakari oro da egiaren sortzaile, munduan egoteko dugun modua aldatuz. Alderantziz, axolagabe eta ukigabe uzten gaituen konstatazio orok, ezertan konprometitzen ez gaituenak, ez du egia deitzerik merezi. Egia gorde bat dago keinu bakoitzean, praktika bakoitzean, harreman bakoitzean, egoera bakoitzean. Ohikoena da egia hori saihestea, *kudeatzea*, eta horrek eragiten du egungo gehiengoaren noragabetze karakteristikoa. Izatez, denak konprometitzen gaitu denera. Gezurrean bizitzearen sentimendua ere egia bat da. Ihes egiten ez uztea da kontua, are, hortik abiatzea ere. Egia bat ez da munduaren ikus-

mira bat, baizik eta modu menperaezin batez munduari berari lotzen gaituena. Egia bat ez da daukagun zerbait, eraman egiten gaituen zerbait baizik. Egin eta desegin egiten nau egiak, norbanako gisa izaera eman eta kentzen didana, askorengandik urruntzen eta egia bera sentitzen dutenekin ahaidetzen. Egiari atxikitzen zaion izaki isolatuak bere pareko norbanako batzuk aurkitzen ditu halabeharrez. Izatez, ukorik egin gabe eutsitako egia batetik abiatzen da matxinada prozesu oro. Hanburgon gertatua, 1980ko urteetan: etxe okupatu bateko biztanle mordoxka batek erabaki du, aurrerantzean, bota nahi badituzte, beren gorputzen gainetik pasatu beharko dutela. Tanke eta helikopteroz setiatutako auzoa izan zen, egunetan luzatu ziren kale borrokak, manifestazio munstroak, eta azkenerako, atzera egin behar izan zuen alkatetzak. Georges Guigouinek, «Frantziako lehen sasitarrak», ez zuen eduki, 1940an, abiapuntu gisa, okupazioarenganako bere ukoaren ziurtasuna besterik. Alderdi komunistarentzat «basoetan bizi den ero» bat baino ez zen orduan, harik eta basoetan bizi ziren eroak 20.000 izan eta Limoges askatu zuten arte.

## Adiskidetasun orok dakarren alde politikoaren aurrean ez atzera egin.

Adiskidetasunaren ideia neutro batera ohitu gaituzte: ondoriorik gabeko afektibitate purua. Baina afinitate oro da egia komun baten *baitako* afinitate. Enkontru oro da baieztapen komun baten *baitako* enkontru, baieztapen hori suntsipenarena izanagatik ere. Ez gara elkarrekin inuzenteki lotzen, atxikimenduei eusteak langabeziara eramaten gaituen garaiotan, lan egiteko gezurretan ibili beharra daukagun garaiotan, eta lan egin, ondoren, gezurraren bitartekoak mantentzeko. Fisika kuantikotik abiatuta, alor guztietan ondorio kontsekuente guztiak ateratzeko zina izenpetuko luketen izakien arteko lotura nekazaritza elikagaien multinazional baten aurka borrokan diharduten kamaraden artekoa bezain politikoa litzateke. Goiz ala berandu, hautu bat egin beharko lukete: ukoa ala borroka.

Langile mugimenduaren aitzindariek *atelierra* eta ondoren fabrika eduki zuten elkar topatzeko. Zenbat ziren jakin, eta eskirolei mozorroa kentzeko, greba zeukaten. Mundu mailako elkartasun eta fronteak trazatzeko, Lanaren eta Kapitalaren alderdiak aurrez aurre ezartzen dituen soldata-harremana zeukaten. Guk espazio sozial osoa daukagu elkar topatzeko. Zenbat garen ja-

kin eta eskirolei mozorroa kentzeko, berriz, eguneroko intsumisio jokabide dauzkagu. Mundu mailako elkartasun eta fronteak trazatzeko, zibilizazio honenganako etsaitasuna daukagu.

Antolakundeetatik ez espero ezer.
Giro presente guztiez mesfidatu,
eta lehenik eta behin, giro bilakatzeaz.

Ez da arraroa, desafiliatze kontsekuente baten ibilbidean, antolakundeekin topo egitea –politikoak, sindikalak, humanitarioak, asoziatiboak, etab.–. Izaki zintzo baina etsiturik ere topatzen da inoiz, edota grinatsu baina alprojarik. Antolakundeen erakargarritasuna beren itxurazko sendotasunean datza –historia bat, egoitza bat, izen bat, bitartekoak, buruzagi bat, estrategia bat eta diskurtso bat daukate–. Arkitektura hutsak baino ez dira, ordea, beren jatorri heroikoei zor zaien errespetuak ere bete ezin ditzakeena ia. Antolakunde gisa bizirautea daukate lehentasun, bai ekinbide guztietan bai hierarkia maila bakoitzean: beste ezertaz ez dira arduratzen. Beren traizio errepikatuek, hortaz, beren oinarriaren atxikimendua alienatu diete gehienetan. Horregatik aurkitzen ditugu batzuetan hainbat izaki estimagarri. Baina enkontruak bere baitan daraman promesa ezingo da gauzatu antolakundetik kanpo ez bada, eta bere kontra, nahitaez.

Are beldurgarriagoak dira *giroak*, beren testura malgu, beren txutxu-mutxu eta hierarkia informalekin. Giro guztiei egin behar zaie ihes. Egia jakin bat neutralizatzeko agente moduko bat dirudi haietariko bakoitzak. Idatzien ebidentziak itotzeko daude giro literarioak. Giro libertarioak, ekintza zuzenaren ebidentziak itotzeko. Giro zientifikoak, beren ikerketek gehiengoarentzat edukiko dituzten inplikazioak gordetzeko. Kirol giroak, kirol modu desberdinek sortarazi beharko lituzketen bizimodu desberdinak gimnasioen barruan gordetzeko. Giro kultural eta militanteei egin behar zaie bereziki ihes. Iraultza desirak hiltzera doazen bi esparru tradizionalak dira. Giro kulturalen zeregina da intentsitate jaio berriei erreparatzea eta, egiten duzuna erakusgai jarriz, bere zentzua lapurtzea; giro militanteen lana, berriz, zernahi egiteko duzun indarra kentzea da. Giro militanteek frantziar lurralde osoan hedatzen dituzte beren sare lausoak, bilakaera iraultzaile ororen bidean trabeska jarriz. Beren porrot ugarien eta ondoriozko minduraren eramaile baino ez dira. Beren higadurak eta gehiegizko ezintasunak orainaren aukerak atzemateko ezgauza bilakatu dituzte. Gainerakoan ere, gehiegi hitz egiten da bertan, zoritxarreko pasibotasun hori hornitzeko, eta horrek segurtasun urrikoak bilakatzen ditu polizialki. Beraiengan-

dik zerbait itxoitea alferrekoa denez, txorakeria bat da beren esklerosiagatik zapuztea. Aski da bere horretan uztea, lehertzen.

Giro guztiak dira kontrairaultzaileak, daukaten konfort txarra gordetzea baita beren afera bakarra.

## Komunatan eratu.

Komuna da hainbat izakik topo egin, elkar ulertu, eta eskuz esku ibiltzen hastea erabakitzen dutenean gertatzen dena. Komuna da, agian, ohiko separazio unea iristean erabakitzen dena. Enkontruaren poztasuna, derrigorrezko itomenetik bizirauten; gure buruari «gu» esatearen gertaera eragiten duena: hori da komuna. Bitxia dena ez da bat egiten duen jendeak komuna bat eratzea, bakoitza bere aldetik ibiltzea baizik. Zergatik ez lirateke komunak mugagabeki biderkatuko? Lantegi bakoitzean, kale bakoitzean, herri bakoitzean, eskola bakoitzean. Azkenik, oinarrizko komiteen erreinua! Alabaina, zer diren eta non dauden onartzen duten komunak. Eta ahal izanez gero, gizartearen instituzioak –familia, eskola, sindikatua, kirol elkartea, etab.– ordezkatuko lituzkeen komuna aniztasun bat. Beren jarduera propioki politikoaz gainera, partaide bakoitzaren eta in-

guruko alderraien biziraupen material eta moralarentzat antolatzeari beldurrik edukiko ez lioketen komunak. Ez beren burua barnealde baten eta kanpoalde baten arabera definituko luketen komunak –kolektiboek orokorrean egiten duten gisan–, baizik eta beren baitako loturen dentsitatearen arabera. Ez osatzen dituzten jendeen arabera, baizik jende horien motibazio eta espirituagatik definituko liratekeen komunak.

Noiz eratzen da komuna bat? Bakarren batzuk, beren indar-atorra indibidualetik askatuta, soilik bere buruen gainean kontatzen hasi, eta beren indarrak errealitatearekin neurtzera jartzen direnean. Greba basati oro da komuna bat, oinarri garbi batzuen gainean kolektiboki okupatutako etxe oro da komuna bat, 68ko ekintza komiteak komunak ziren, Estatu Batuetako esklabo iheslarien herrixkak bezala, edota Bolognako Alice irratiaren gisan, 1977an. Komuna orok bere buruaren oinarria izan nahi du, beharren afera deuseztatu, menpekotasun ekonomiko zein politikoak hautsi; eta bere oinarri diren egiekiko kontaktua galtzean degeneratzen da, giro bilakatuz. Gisa orotariko komunak daude, ez daudenak ez kopuruaren zain, ez bitartekoen zain, are gutxiago sekula iristen ez den «une egokiaren» zain, antolatzeko.

Antolatu, lanik egin beharrik ez izateko,
beste inoiz ez.

Urritzen ari dira lan-pagotxak, eta guztia esan behar bada, arduratzen ibiltzea denbora galtze hutsa da gehienetan. Direlako pagotxa horien ezaugarri nagusiak, gainera, lo-kuluxka egiteko eta irakurtzeko baldintza kaskarrak.

Jakina denez, hain da ezdeusa norbanakoaren existentzia ezen *bizibidea atera* behar baitu, bere denbora existentzia sozial apur baten trukean eman. Denbora pertsonala, existentzia sozialaren truke: horra lana, horra tratua. Komunaren denborak berez egiten dio ihes lanari, ez da amarruan jausten, bestelako amarru batzuk hobesten ditu. Argentinako *piquetero* taldeek lan ordu batzuen araberako bertako laguntza sozial moduko

bat eskuratzen dute, kolektiboki. Dagozkien orduak betetzeke, irabaziak komunean jartzen dituzte, eta, besteak beste, jantzigintza *atelierrak*, okindegi bat, nahiz behar dituzten lorategi eta baratzak sortzen.

Komunarentzat diru bila aritzea badago, inola ere ez bizitza irabazteko: horra komunaren logika. Komuna guztiek daukate beren diru-kutxa beltza. Trikimailuak askotarikoak dira: soldata sozialak, maileguak, laguntzak, eritasun bajak, ikasketa bekak, gezurrezko erditzeen bidez ateratako primak, bururatu daitezkeen afera guztiak, eta, orobat, kontrolen mutazio bakoitzarekin sortzen diren beste hainbat bitarteko. Ez dagokigu guri horiek defendatzea, behin-behineko aterpe horietan gotortzea, edota hasiberriaren pribilejio gisa mantentzea. Garrantzitsua da jukutriarako joera hori landu eta hedatzea da, bai eta berrikuntzak partekatzea ere. Komunei dagokionez, lanaren afera gainerako irabazien arabera baino ez da planteatzen. Ez da gutxietsi behar, bide batez, lanbide, formazio eta postu ongi kokatu hainbatek dakartzaten probetxuzko ezaguerak.

Ahalik eta denbora gehien askatzea da komunaren exijentzia. Exijentzia hori, ordea, ez da soilik, ez da funtsean soldata-esplotaziotik kanpoko *ordu kopuruaren* bidez neurtzen. Askatutako denborak ez gaitu oporretan jartzen. Opor den-

bora, denbora hila, denbora hutsa eta hutsaren beldurrarena, lanaren denbora da. Komunaren ikuspegitik ez dago *bete* beharreko denborarik, baizik ezein «denborak» eutsi ezin dezakeen energia askatze bat; marrazten doazen lerroak, nabarmendu egiten direnak, nahierara jarraitu ditzakegunak, muturreraino, beste batzuk gurutzatzen ikusi arte.

## Harrapatu, hazi, fabrikatu.

Metaleurop enpresako langile ohiek atrakatzaile bilakatzea nahiago dute, kartzelari baino. EDFeko enplegatuek argi-kontadoreak trukatzeko behar diren trepetak eskuratzen dizkiete euren gertukoei. «Kamioitik eroritako» materiala denean dabil salgai. Bere burua hain nabarmenki ziniko aldarrikatzen duen mundu batek ezingo luke langileen partetik leialtasun handiagorik espero.

Alde batetik, komuna batek ezin du «Probidentzia Estatuaren» betikotasunaren gainean kontatu, ez eta luzaroan iraun ere, bestetik, lapurreta txikiez, supermerkatuetako zaborretan nahiz industrialdeetako biltegietan gauez berreskuratutakoaz, edo diru-laguntzen desbideratzeaz, hitz batean, harrapaketaz. Hortaz, bere auto-antolakuntzaren maila eta hedadura handitzeaz arduratu beharra

dauka etengabe. Zer logikoagorik, enpresa baten itxierarekin lau sosen truke saldutako tornu, fresa edo fotokopiagailuak, merkatu-gizartearen aurkako konspirazioren bat sostengatzeko baliatzea baino.

Hondamendi sentimendua hain da oro har bizia egun, neketsua suertatzen baita martxan dauden esperimentazio guztiak zenbatzea, hala eraikuntzan, nola energietan, materialetan, ilegalgintzan edota nekazaritzan. Jakintza eta teknika multzo eder bat dago hor, nork harrapatu eta estalki moralista, marjinal edo ekologista erauziko zain. Baina multzo hori auzune txiroen berezko intuizio, jakintza eta asmamenaren parte txiki bat baino ez da. Horiek guztiak osoki hedatu beharko ditugu, basamortu metropolitarra populatu eta matxinadaren bideragarritasuna epe ertain batean segurtatu nahi badugu.

Nola komunikatu eta mugitu fluxuen eten erabateko batean? Nola berreskuratu landa eremuetako elikadura kulturak, orain hirurogei urteko populatze dentsitateak berriro jasan ahal izan ditzaten? Nola bilakatu eremu porlaneztatuak baratze urbano, Kubak amerikar enbargoari eta Sobietar Batasunaren likidazioari aurre egiteko egin zuen bezala?

## Formatu eta norbere burua formatu.

Merkatu-demokraziak baimendutako aisiak hainbeste baliatu ditugunoi, zer gertatu zaigu? Zerk bultzatu ote gaitu igande goizetan korrika egitera joatera? Zerk bultzatzen ditu karatearen fanatikoak, brikolaje, arrantza edota mikologia zale amorratu guzti horiek? Zerk, ez bada zeregin gabezi erabatekoa betetzeko premiak, edota lan-indarra nahiz «osasun kapitala» berritzeko beharrak? Aisia-jarduera gehienak aise erantz litezke beren izaera absurdoaz, eta aisia-jarduera baino zerbait gehiago bilakatu. Boxeoa ez da beti telemaratoirako erakustaldiak egitera edo ikuskizun handiko borrokaldiak ematera mugatuta egon. XX. mende hasierako Txinak, kolono osteek zatikatuta eta lehorte luzeek gosetuta, ehunka mila nekazari txiro ikusi zituen, aire librean, konta ezin ahal boxeo-klubetan antolatzen, aberats eta kolonoek espoliatu zietena berreskuratzeko. *Boxers* delakoen errebolta izan zen. Ez da sekula goizegi, garai ez hain baketsuek eta ez hain aurreikusgarriek eska diezaguketena ikasi eta praktikatzen hasteko. Hainbestekoa da, egun, metropoliarekiko gure menpekotasuna –bere medikuntzarekikoa, bere nekazaritzarekikoa, bere poliziarekikoa–, non ezinezkoa baitzaigu eraso egitea geure burua arriskuan jarri gabe. Zaurgarritasun honen kontzientzia ez formu-

latua da egungo mugimendu sozialen auto-mugapen espontaneoa, krisien beldurra eta «segurtasunaren» desira eragiten dituena. Bera da arrazoia greben horizonteak iraultza izateari utzi eta, trukean, normaltasunerako itzulerarena bihurtzeko. Halabehar horretatik libratzeak ikaspen prozesu luze eta sendoa eskatzen du, bai eta saiakuntza anitz eta masiboak ere. Afera *jakitean* datza, borrokatzen, sarrailak bortxatzen, haustura nahiz anginak sendatzen, irrati pirata bat eraikitzen, kale-kantinak muntatzen, zuzen destatzen, baina, halaber, jakintza sakabanatuak bildu eta guda-agronomia bat osatzen, planktonaren biologia nahiz lurren konposaketa ulertzen, landareen elkarketak ikasi eta gure inguru berehalakoarenganako intuizio galduak, erabilpen guztiak, lotura guztiak berreskuratzen, gure inguru horren muga ezagunak gainditzen; hau guzti hau gaurtik aurrera, eta etorkizuneko egunak ikusmiran, gure elikaduraren eta zainketaren parte sinboliko bat baino gehiago lortzeko beharrezkoak suertatuko zaizkigun egunetarako.

## Lurraldeak sortu. Eremu opakuak ugaldu.

Erreformista gero eta gehiago bat datoz, gaur egun, «*peak oil*a gero eta hurbilago dagoenean»,

«berotegi-efektua eragiten duten gasen isuria» murrizteko, beharrezkoa izango dela «ekonomia birlokalizatzea», eskualde mailako hornidura eta banaketarako ibilbide laburrak laguntzea, urrutiko inportazioen erraztasunari uko egitea, etab. Ahanzten bide dute, lokalki egiten den guztia, ekonomiari gatzaizkiolarik, berez egiten dela beltzean, modu «informal» batean; eta ekonomia birlokalizatzearen neurri ekologiko sinple horrek, zer eta estatu kontroletik askatzea dakarrela berarekin, edo bete-betean bere menpe jartzea.

Mendetako polizi operazioen emaitza da egungo lurraldea. Herria bere landa eremuetatik kanpora bultzatu zuten lehenik, gero bere kaleetatik kanpora, eta azkenik, bere etxebizitzetako ezkaratzetatik kanpora, bizitza oro eremu pribatuaren lau horma izerditsuen artean eduki daitekeen itxaropen txoroan. Lurraldearen auzia ez da berdin planteatzen guretzat eta Estatuarentzat. Kontua ez da lurraldea *atxikitzea*. Kontua da komunak, zirkulazioak eta elkartasunak lokalki trinkotzea, hainbesteraino non lurraldea irakurtezin, opaku bilakatuko den aginte ororentzat. Kontua ez da okupatzea, baizik eta lurraldea *izatea*.

Praktika bakoitzak lurralde jakin bat existiarazten du –trafikoaren edo ehizaren lurraldea, haur-jolasen, maitaleen edo erreboltaren lurraldea, nekazariaren, ornitologoaren edo kalezalearen lu-

rraldea–. Araua sinplea da: zenbat eta lurralde gehiago egon eremu jakin batean, zenbat eta zirkulazio handiagoa egon euren artean, orduan eta euskarri gutxiago aurkitzen du botereak. Taberna, inprenta, soinketa areto, eremu huts, liburu-saltzailearen postu, teilatu, merkatu inprobisatu, kebab, garaje, denak egin diezaioke bere bokazio ofizialari ihes, baldin eta behar adina konplizitate aurkitzen badu. Lekuko auto-antolakuntzak, estatu kartografiari bere geografia gainjarriz, kartografia hau nahasi egiten du, ezereztatu; besterenganako sezesio propioa eragiten du.

## Bidaiatu. Gure komunikazio bideak trazatu.

Komunen printzipioa ez da metropoliari eta bere mugikortasunari sustraitze lokala eta geldotasuna kontrajartzea. Komunak eratzeko mugimendu hedakorrak metropoliarena bikoiztu behar du ezkutuan. Ez ditugu zertan alboratu merkatu azpiegiturek eskaintzen dizkiguten mugimendu eta komunikazio aukerak, soilik mugak ezagutu. Aski dugu behar adina zuhur izatearekin, behar adina anodino. Elkar bisitatzeak bestelako segurtasuna ematen du, ez du aztarnarik uzten eta Interneteko edozein kontaktu zerrendak baino lotura sendoagoak eratzen ditu. Gutariko hainbati eman zaigun

pribilegioa, kontinenteko punta batetik bestera «libreki zirkulatzea» –eta arazo handiegirik gabe mundu osotik–, konspirazio guneak elkarren artean komunikatzeko kontuan hartzeko abantaila da. Metropoliaren mesedeetako bat da amerikar, greziar, mexikar eta alemaniarrez osatutako talde bat isilgordean elkartu dadila uztea, Parisen, solasaldi estrategiko baterako tartean.

Komuna-lagunen arteko mugimendu etengabea, hala idortzetik nola ukoaren halabeharretik babesten duen gauzetariko bat da. Kamaradei harrera egin, beren ekimenen berri eduki, beren esperientziak hausnartu, darabilten teknikak barneratzea lagungarriagoak dira horiek komunarentzat, atez barrurako kontzientzia azterketa antzuak baino. Akatsa litzateke martxan dagoen gudari buruzko gure ikuspegiak alderatzen pasatako afalondoek sortu ditzaketen erabakigarri guztia gutxiestea.

## Oztopo guztiak hurrenez hurren irauli.

Dakigun bezala, inzibilitatez lepo daude kaleak. Egiaz direnaren eta izan beharko luketenaren artean, ordena berrezartzen ahalegintzen den polizia ororen indar zentripetoa dago; eta parean gu gaude, hau da, aurkako mugimendua, zentrifugoa. Haserrealdi eta desordenek, nonahi sortzen

direla, poztu baino ezin gaituzte egin. Ez da batere harritzekoa ezer ere ospatzen ez duten festa nazionalak sistematikoki gaizki bukatzea, honezkero. Distiratsu edo zargaldurik, hiriko hornigaiek –Non hasten dira, baina? Non bukatzen?– gu denon desjabetzea gorpuzten dute. Beren ezereztasunean temati, deuseztatuak izatea baino ez dute eskatzen. Begira diezaiogun inguratzen gaituenari: hau guztia bere azken orduaren esperoan dago, bat-batean nostalgia aire bat hartzen du metropoliak, hondamendi zelaiek baino ezin eduki dezaketen nostalgia airea, alegia.

Inzibilitateok metodiko bilakatzean, sistematizatzean, gerrilla lauso, eraginkor batera bildu eta gure gobernagaiztasun eta indiziplina oinarrizkoetara itzultzen gaituzte. Deigarria da partisanoari aitortzen zaizkion bertute militarren artean justuki indiziplinarena egotea. Amorrua eta politika bereiztea, horra egin behar ez zen gauza bat. Lehena gabe diskurtsoetan galtzen da bigarrena; eta bigarrena gabe, garrasitan agortzen lehena. «Amorratuak» edo «asaldatuak» bezalako hitzak nekez azaleratzen dira politikan errietarik gabe.

Metodorako, gorde dezagun sabotajearen ondorengo printzipioa: ekintzan arrisku txikiena, denbora laburrena, kalte handiena. Estrategiarako, oroit, oztopo iraulia baina ezkutatu gabea –espazio askatua baino ez habitatua– erraz or-

dezka daitekeela beste oztopo batekin,erresistenteagoa eta ez hain erasogarria.

Alferrik da astun aritzea langile-sabotajearen hiru moldeez: lana moteldu («patxadaz ibili» kontsignatik gehiegizko arretazko grebaraino); makinak hautsi edo haien martxa trabatu; enpresaren sekretuak zabaldu. Fabrika sozialaren dimentsioetara hedatuak, sabotajearen printzipioak ekoizpenetik zirkulaziora bitartean orokortzen dira. Metropoliaren azpiegitura teknikoa zaurgarria da: bere fluxuak ez dira soilik pertsona eta merkantzia garraioak; informazioa eta energia hari, zuntz eta kanalizazio sare erasogarrien bidez dabiltza. Makina soziala ondorioren batekin saboteatzeak, gaur egun, bere sareak eteteko baliabideak berreskuratu eta berrasmatzea dakar. Nola bilakatu erabiltezin AHT linea bat, argindar sare bat? Nola bilatu sare informatikoen puntu ahulak, nola nahastu irrati-uhinak, nola bete elurrez pantaila txikia?

Oztopo serioei dagokienez, faltsua da suntsipen orori ezinezkoaren ospea jartzea. Honek daraman prometeikotasuna, suaren eskuratze jakin batean oinarritu eta laburbiltzen da –boluntarismo itsu orotatik at–. K.a. 356an, Erostratok Artemisaren tenplua erretzen du, munduko zazpi mirarietako bat. Dekadentzia beteko gure garaiotan, tenpluek daukaten alde larderiatsu bakarra hiletaegia hau baino ez da: *hondakinak direla jadanik*.

Ezerez hori ezereztatzea ez da batere zoritxarreko zeregina. Ekiteak gaztetasun berria dakar. Guztiak zentzua hartzen du, guztia ordenatzen da, espazioa, denbora, adiskidetasuna. Zeinahi egurrez gezia egiten dugu, erabilera berreskuratzen dugu –gezia bera baino ez gara–. Garaiotako miserian, «dena izorratzeak» azken sedukzio kolektiboaren papera bete dezake –eta ez arrazoirik gabe, aitor dezagun–.

## Agerikotasunari ihes egin. Anonimotasuna eraso-posizio bilakatu.

Manifestazio batean, sindikalista batek erakusleiho bat apurtu berri duen anonimo bati mozorroa kentzen dio: «Onartu egiten duzuna, ezkutatu beharrean». Agerian egotea, babesgabe egotea da, hau da, ezer baino lehen zaurgarri izatea. Mundu osoko ezkerzaleak beren kausa –dela landerrena, dela emakumeena, dela paperik gabekoena– «agerian» jartzen tematzen direnean, kontuan hartua izango den itxaropenez, egin beharko luketenaren aurkakoa egiten ari dira. Agerian jarri beharrean, zokoratuz inposatu diguten anonimotasuna gure alde bihurtu behar dugu eta, konspirazioaren bidez, ekintza gautar edo kaputxadunaz, eraso-posizio erasoezin bilakatu. 2005eko suteak eredua es-

kaintzen digu. Ez liderrik, ez aldarrikapenik, ez antolakunderik, baizik eta hitzak, keinuak, konplizitateak. Sozialki ezer ez izatea ez da umiliagarria, errekonozimendu gabezi tragiko baten iturria –errekonozitua: nork errekonozitua?– ekintzarako askatasun gorenaren kondizioa baizik. Gaiztakeriak ez sinatzea, mamu-siglak besterik ez erakustea –BAFT (*Brigade anti-flic de Tarterêts*[20]) iragankorraz oroitzen gara oraindik–, askatasun hori gordetzeko modu bat dira. Nabarmena da, erregimenaren aurreneko defentsa maniobretako bat izan zela «auzune txiro» subjektu bat eratzea, «2005eko azaroko oldarraldien» egile izanen zena. Gizarte honetan *norbait direnen* piura ikusteak laguntzen du ulertzen inor ez izatearen poza.

Agerikotasunari ihes egin behar zaio. Baina itzalean batzen den indar batek ezin dio agerikotasunari betiko iskin egin. Indar gisa agertzea une egokira arte atzeratzea da kontua. Zeren eta, agerikotasunarekin zenbat eta beranduago topo egin, orduan eta indartsuago aurkituko baikaitu. Eta behin agerikotasunean sartuta, gure denbora kontatua dago. Edo bere erreinua azkar batean birrintzeko moduan gaude, edo bera izango da luze gabe txikituko gaituena.

---

20. Poliziaren aurkako Tarterêts-eko brigada.

## Autodefensa antolatu.

Okupaziopean bizi gara, okupazio *poliziala*ren pean. Horixe gogorarazten digute egunero paper-gabekoen aurkako sarekadek kale erdian, kalez jantzitako polizien autoek bulebarretan itzulika, metropoliaren auzoak kolonietan sortutako tekniken bidez baketzeak, Barne-ministroaren «banden» aurkako harengek, Aljeriako gerraren neurrikoek. Nahikoa motibo dira zapaltzen uzten ez jarraitzeko, autodefentsari lotzeko.

Komuna batek, handitu eta bere dirdira zabaltzen duen heinean, boterearen operazioak ikusten ditu, pixkanaka, komuna osatzen duena jomugatzat hartzen. Kontra-eraso horiek sedukzioaren eta berreskurapenaren forma hartzen dute, bai eta, azken bitarteko gisa, indar basatiarena ere. Komunarentzat ebidentzia kolektiboa behar du autodefentsak, praktikoak zein teorikoak. Datozen denboretan ez dira alferrikako erreflexuak izango atxiloketa bati aurre egitea, kanporatze saiakeren aurka jendetza bizkor biltzea, edota gutako bati aterpe ematea. Ezin ditugu gure oinarriak berreraiki etengabe. Utz diezaiogun errepresioa salatzeari eta presta gaitezen.

Afera ez da sinplea, zeren herritargoaren aldetik polizia-lan gorakada bat espero den heinean –salaketatik hasita milizia herritarretan noiz-

behinkako parte-hartzeraino–, polizia indarrek masarekin bat egiten baitute. Poliziaren esku-hartze mota orotarako eredua, baita oldarraldi egoeretan ere, kaleko jantzitako poliziarena da honezkero. Poliziaren eraginkortasuna, CPEaren aurkako azken manifetan bezala, jendearekin nahasten diren kaleko horiengandik zetorren. Istilu txikienaren zain egoten ziren agertzeko: gasa, borra, *flashball*a eta atxiloketa; guztia sindikatuen ordena zerbitzuekin koordinazioan. Beren balizko presentzia soila aski da manifestarien artean susmoak piztu –nor da nor?–, eta ekintza geldiarazteko. Onartua dugu manifestazio bat ez dela gure kopurua zenbatzeko bitarteko bat, ekitekoa baizik, eta beraz bestelako bitartekoz hornitu beharko gara, kalez jantzitakoei mozorroa kendu, manifestaziotik bota, eta lortu ezean, harrapatzen saiatzen direnak libratzeko.

Polizia kalean ez da garaiezina, bitartekoak ditu antolatzeko, entrenatzeko eta arma berriak etengabe saiatzeko, besterik ez. Haien aldean, gure armak errudimentarioak, eskuz landutakoak izango dira beti, eta, maiz, tokian inprobisatuak. Gureen asmoa ez da inola ere beraienekin su-potentzian lehiatzea, distantzia bat gordetzea dute jomuga, atentzioa desbideratzea, presio psikologikoa eragitea edota ezustean pasabide bat ireki eta terrenoa irabaztea. Frantziar jendarmeriaren

gerrilla prestaketarako zentroetan garatutako berrikuntza guztiak ez dira aski, eta duda barik ez dira sekula izango, aldi berean toki ezberdinetan kolpatu dezakeen aniztasun mugikor bati nahikoa bizkor erantzuteko, batez ere azken hau ekimena beti bere esku gordetzen ahalegintzen denean. Bistan denez, komunak ahulak dira, poliziaren zelatatzeari eta ikerketei, polizia zientifikoari eta inteligentzia zerbitzuari dagokienez. Entzuketek ahalbidetu zituzten Italiako anarkisten eta Estatu Batuetako *ecowarriors* direlakoen atxiloketa andanak. Egun, atxiloketa orok DNA lagin bat hartzea dakar, egunetik egunera osoago den fitxategia elikatuz. Bartzelonako okupa bat atzeman zuten, banatzen zituen esku-orrietan bere hatz-markak utzi zituelako. Fitxatze metodoak etengabe ari dira hobetzen, batik bat biometriari esker. Eta nortasun-agiri elektronikoa funtzionamenduan sartzera, gure zeregina zailagoa baino ez litzateke bilakatuko. Parisko Komunak fitxatzearen arazoa konpondu zuen parte batean: udaletxea erreta erregistro zibila suntsitu zuten su-emaileek. Datu informatizatu horiek betiko suntsitzeko bitartekoak aurkitzea falta zaigu.

ERREALITATE PARTISANOAREN OINARRIZKO UNITATEA da Komuna. Gorakada matxino bat, beharbada, komunen ugaltzea besterik ez da, haien arteko lotura eta artikulazioa. Gertaeren bilakaeraren arabera, komunak hedadura handiagoko entitatetan batu daitezke, edota, aitzitik, zatitu. Maila edo eskala desberdintasun guztiekin, komunak dira, orobat, bai «hil arte» loturiko anaia-arreben banda, bai auzo edo, are, lurralde matxinatu baten autodefentsa eta hornikuntza antolatzeko baturiko talde, batzorde edo bandak.

Autosubsistentziara jotzen du ezinbestez komunak, eta dena esan behar bada, huskeriatzat, areago, desegokitzat dauka dirua. Diruaren ahalmena, loturarik gabe daudenen arteko loturak sortzean datza, arrotzak *arrotz gisa* lotzean, eta horrela, gauza guztiak ekibalentzian jarriz, guz-

tia zirkulazioan jartzean. Diruaren lotura ahalmen horren ordaina da, hain zuzen, lotura horren hutsaltasuna. Diruak ehundutako loturan gezurra da lege. Mesfidantza da kreditu harremanaren funtsa. Diruaren erreinuak, horrenbestez, kontrolaren erreinua behar du izan. Diruaren deuseztapen praktikoa komunen hedapenaz burutu daiteke soilik. Baina komunen hedatze horretan, komuna bakoitzak erne ibili beharra dauka, tamaina jakin batetik harago handitzea ekidinez, zeren hortik aurrera bere buruarekin kontaktua galduko bailuke, eta ezinbestez, kasta dominatzaile bat sortuko. Komunak, kasu horretan, zatikatzea hobetsiko luke, hedatuz eta, bide batez, zoritxarreko aterabide bat saihestuz.

2001eko udaberrian Kabilia osoari su eman zion aljeriar gaztediaren altxamendua, herrialdea ia osoki berreskuratzera iritsi zen. Jendarmeria, epaitegi zein Estatuaren ordezkaritza guztiei eraso eginez, oldarraldia orokortuz, ordena indarren aldebakarreko atzera-egitea erdietsi zuen, bai eta hauteskundeak fisikoki galaraztea ere. Mugimenduaren indarra bere parte-hartzaile anitzen arteko osagarritasun lausoan zetzan, parte-hartzaileok oso partzialki ordezkatuta egon baitziren hala herrietako batzordeen batzar amaiezin eta etsigarriki maskulinoetan nola bestelako herri batzordeetan. Aurpegi desberdinak dituzte aljeriar matxinada

biziaren «komunek»: Tizi Ouzuko eraikin baten teilatutik CNSen (CRS, *beltzak*) gainera gas botilak jaurtitzen dituzten txanodun gazte «kiskaliena», bere *burnusa*[21] jantzitako sasitar zahar baten irribarre burlatiarena, edota, baita ere, mendialdeko herrixka bateko emakumeen indarrarena. Indar honexek ahalbidetu zuten, ahalbidetu ere, laborantza eta abelazkuntza tradizionala kosta ahala kosta funtzionaraziz, erregioaren blokeo ekonomikoak errepikatu eta sistematikoak izatea.

## Krisi oroz sua piztea.

«Esan behar da ezingo genukeela frantziar biztanleria osoa artatu. Honenbestez, aukerak egin beharko dira». Hegazti gripe pandemia baten kasuan gertatuko litzatekeena laburtzen dio horrela, birologiako aditu batek *Le Monde* egunkariari, 2005eko irailaren 7an. Gizartea kudeatzen dutenentzat, «mehatxu terroristak», «hondamendi naturalak», «gizarte mugimenduak» nahiz «kale-istiluak», beren boterea ezartzeko ezegonkortasun uneak dira. Horretarako, komeni zaiena hautatu, eta traba egiten diena deuseztatzen dute. Ezegon-

21. Herrialde magrebtarretako soingaineko tradizionala, txanoduna eta mahukarik gabea.

kortasun uneok, beraz, eta logikoki, beste indarrak bildu eta sendotzeko abagune ere badira, aurkako hautua eginez. Merkantzia fluxuen gelditzeak, normaltasunaren nahiz polizi kontrolaren eteteak, beste egoera batzuetan pentsaezinak liratekeen auto-antolakuntza potentzialtasunak askatzen ditu –aski da ikustea nola garatzen den bizitza soziala, bat-batean argi-indarrik gabe geratu den eraikin batean, irudikatzeko zer bilaka litekeen bizitza, guztiaz gabetutako hiri batean–. Inori ihes egiten ez dion kontua da hau. Langile mugimendu iraultzaileak ederki ulertu zuen: bere ahalmen-handitzearen goreneko une bilakatu zituen ekonomia burgesaren krisiak. Egun, alderdi islamiarrak, Estatuaren gabeziak inteligenteki ordezkatzen jakin duten tokietan dira indartsuen, adibidez: Aljeriako Boumerdès-en, sorospen zerbitzuak jarri zituztenean lurrikararen ondoren, edota israeldar armadak suntsitutako Libano hegoaldean, biztanleriaren eguneroko laguntzan.

Arestian aipatu bezala, *Katrina* urakanak New Orleansen eragindako hondamendiak abagunea eman zion Ipar Amerikako mugimendu anarkistaren zati handi bati sendotasun ezezagun bat hartzeko, hain zuzen, bertatik bortxaz mugitzeari aurre egin ziotenak bilduz. Kale-jantokiek aldez aurretik hornikuntzan pentsatu izana suposatzen dute; medikuntza sorospenak, irrati libreak beza-

laxe, jakintza eta materiala eskuratu izana. Tankera honetako esperientzien emankortasun politikoa dator, besteak beste, beren baitan daramaten bozkariotik, norbera moldatzeko abilezia gainditu eta kolektiboaren mesedetan jartzetik, eta ordenaren zein lanaren egunerokotasunarekiko intsumisioaren errealitate hautemangarritik: horiek dira bermeak.

Frantzian, jakina da, hodei erradioaktiboak mugan geratzen dira, eta ez gaitu ikaratzen minbiziaren ikerketarako gune bat altxatzeak Seveso sailkapeneko AZF lantegiaren antzinako kokagunean. Frantzian, beraz, krisi sozialen gainean kontatu beharra dago, krisi «naturalen» gainean baino. Mugimendu sozialei dagokie hemen, gehienetan, hondamendiaren martxa normala etetea. Egia da azken urteotako grebak gehienbat botere eta enpresa zuzendaritzen «gutxieneko zerbitzu» gero eta zabalagoak mantentzeko gaitasuna neurtzeko paradak izan direla –hain zabalak ezen greba bere dimentsio sinbolikora murriztua izan baita, elurjausi bat edo errailetan suizidio bat baino apenas kaltegarriago–. 2005ean, ordea, CPEren aurkako ikastetxeetako borrokek, ohiko praktika militanteak irauliz, eraikinak sistematikoki okupatu eta setatsuki blokeatuz, mugimendu handien kalte eta ofentsibarako gaitasuna oroitarazi ziguten. Borroka haien lorratzean sortutako banda guztiek

zera ikusarazi ziguten: zein baldintzetan bilaka daitezkeen mugimenduak komuna berrien ernamuin.

Ordezkaritza erakunde oro saboteatu.
Eztabaida orokor egin.
Batzar orokorrak deuseztatu.

Edozein giza mugimenduk aurkitzen duen lehen oztopoa, polizia bera baino nahikotxo lehenago, borrokak bere gidaritzapean hartu beste asmorik ez duten indar sindikal eta bestelako mikroburokraziek osatzen dute. Horien aurrean espontaneoki mesfidati agertzen dira komunak, herri taldeak eta bandak. Horregatik asmatu dituzte paraburokratek, azken hogei urteotan, koordinakundeak. Etiketa ezak koordinakundeoi halako aire inuzentea ematen badie ere, paraburokraten trikimailuen aukerako eremua dira. Kolektibo despistaturen batek autonomiarantz egin orduko, berau edukiz husten tematuko dira, galdera egokiak baztertuz ausarki. Gogorrak dira, berotu egiten dira; ez eztabaidaren aldeko pasioagatik, baizik eta hura oztopatzeko bokazioagatik. Eta apatiaren defentsa sutsuak kolektiboa desegitea lortzen duenean, kontzientzia politiko gabeziari egozten diote porrota. Esan beharra dago, Fran-

tzian, batik bat kofradia troskista ezberdinen aktibitate amorratuari esker, gazteri militanteari huts egiten diona ez dela manipulazio politikoaren artea. 2005eko suteaz, ez dira preseski beraiek honoko ondorio hau atera zutenak: koordinakunde oro da alferreko koordinazioa dagoen tokian, antolakundeak soberan daude antolakuntza dagoen tokian.

Badago beste erreflexu bat: mugimendurik txikienean ere, batzar orokor bat antolatu eta bozkatzea. Akatsa da. Bozketa apustu bilakatzea, erabaki bat gailentzearen behar hutsa, nahikoa da asanblada amesgaizto bihurtzeko, botere asmo guztiak lehiatzen diren antzerkia sortzeko. Parlamentu burgesaren eredu okerra pairatzen dugu. Batzarra ez dago erabakietarako, hitzerako baizik, helbururik gabeko hitz askerako.

Gizakiongan, batzeko beharra konstantea da, eta bakana, berriz, erabakitzeko premia. Batzea, denon indar komuna esperimentatzearen bozkariotik dator. Larrialdi egoeretan baizik ez da hil edo bizikoa erabakitzea, eta halakoetan, nolanahi ere, badaezpadakoa izaten da demokraziaren erabilera. Gainerakoan, prozeduraren fanatikoek baino ez dute arazotzat «erabakitze prozesuaren izaera demokratikoa». Kontua ez da batzarrak kritikatzea edota haietatik hanka egitea; kontua da hitza askatzea, izakien arteko keinu eta jola-

sak askatzea. Nahikoa da ikustea norbera ez datorrela bat soilik ikuspuntu batekin, edo mozio batekin, baizik eta desira, atxikimendu, gaitasun, indar, tristezia eta prestutasun jakin batzuekin ere. Batzar Orokorraren fantasma urratzera iristen bagara, *presentziez osaturiko batzar* bilakatuz, lortzen badugu behin eta birritan agertzen den hegemoniaren tentazioa zapuztea, alboratzen badugu erabakitzea azken helburu gisa, orduan halako *talde-hartze* bat gertatzeko aukera batzuk izango ditugu, hau da, kristalizazio kolektibo bat, non erabakiak berak izakiak hartzen dituen, beren osotasunean zein parte batean.

Gauza bera esan genezake ekintzak erabakitzeari gagozkiolarik. «Ekintzak batzarraren garapena bideratu behar du» printzipiotik abiatzea, eztabaidaren bizitasuna eta ekintzaren eraginkortasuna ezinezko bilakatzea dakar. Elkar ezagutzen ez dutenen arteko batzar jendetsu bat kondenatuta dago ekintzaren espezialistak ekoiztera, esan nahi baita, ekintzaren kontrola ekintzari berari aurrejartzera. Alde batetik, agindupekoak, ekintzaren eginkizuna bere gain hartuko luketenak, lotuta leudeke, definizioz, beren ekintzaren baitan. Bestetik, ezerk ez die mundu guztia engainatzea eragozten.

Ez dago zertan ekintza molde ideal bat ezarri. Ekintzak bere buruari molde bat eman diezaiola

da funtsezkoa, moldea eragin dezala, eta ez jasan. Horrek posizio politiko zein geografiko berbera partekatzea suposatzen du –Frantziako iraultza bitartean Parisko Komunako sekzioek bezala–, baita jakintza berbera zabaltzea eta partekatzea ere. Ekintzak erabakitzeari dagokionez, honokoa izan liteke printzipioa: norbera errekonozimendura abiatu dadila, informazioak parekatu ditzagun, eta erabakia berez etorriko da, berak hartuko gaitu gu, guk geuk bera bainoago. Jakintzaren zirkulazioak hierarkia ezeztatzen du, goitik berdintzen gaitu. Komunikazio horizontala, ugalkorra, komuna desberdinen arteko koordinazio modu hoberena ere bada, hegemoniarekin bukatzeko.

## Ekonomia blokeatu, baina gure blokeatze ahalmena gure auto-antolakuntza mailarekin neurtu.

Oaxacako estatua, 2006ko ekainaren amaiera, udal okupazioak ugaritzen dira, matxinoek eraikin publikoak okupatzen dituzte. Hainbat herritan, alkateak egotzi dituzte eta auto ofizialak konfiskatu. Hilabete geroago, hainbat hotel eta turismo-gunetarako sarbideak blokeatuta daude. Turismo ministroa hondamendiaz mintzo da, «*Wilma* urakana bezalakoa da». Urte batzuk lehenago,

argentinar errebolta mugimenduaren molde nagusietakoa izan zen blokatzea. Tokian tokiko mugimendu desberdinek elkarri laguntzen zioten, halako edo honoko ardatza blokatuz. Ekinbide bateratu honekin herrialde osoa gelditzeko mehatxu etengabea egiten zuten, euren aldarrikapenak onartuak izatera behartuz. Halako mehatxua burdinaga eraginkorra izan zen luzaroan, trenbideetako langileen, elektrizitate eta gas konpainietako langileen, eta kamioilarien esku. CPEren aurkako mugimenduak zalantza egin gabe blokatu zituen geltokiak, autobusak, lantegiak, autobideak, supermerkatuak eta baita aireportuak ere. Rennesen aski izan ziren hirurehun pertsona hiria inguratzen duen autobidea blokatu eta berrogei kilometroko auto-ilarak sortzeko.

Guztia blokatu, horra egungo ordenaren aurka altxatzen den ororen aurreneko erreflexua. Ekonomia deslokalizatuan, ekoizpena blokeatzeak zirkulazioa blokatzea dakar, zeren: enpresak fluxu tinkoen bidez funtzionatzen baitute, balioa sarearekiko konexiotik baitator, eta autobideak azpi-kontratatik azpi-kontratara eta hortik muntai lantegira doan ekoizpen-kate materiagabetuaren kate-begiak baitira.

Baina kontua ez da matxinoen horniketa eta komunikazio gaitasunak, edota komuna desberdinen auto-antolakuntza efektiboak baimentzen

duena baino gehiago blokatzea. Nola elikatu behin dena paralizatuta? Saltokiak harrapatzeak, Argentinan egin zuten bezala, bere mugak dauzka; nahi bezain erraldoiak izanagatik kontsumoaren tenpluak, ez dira despentsa mugagabeak. Oinarrizko mantenua iraunkorki eskuratzeak, hortaz, bere ekoizpenerako bitartekoez jabetzea suposatzen du. Puntu honi dagokionez, nahikoa alferrekoa dirudi zain jarraitzeak. Biztanleriaren ehuneko biri beste guztion elikagaiak ekoizteaaren ardura uztea, egun egiten den bezala, burugabekeria historiko eta estrategikoa da.

### Lurraldea polizia okupaziotik askatu. Zuzeneko konfrontazioak ahal beste ekidin.

«Afera honek agerian uzten du parean ditugun horiek ez dabiltzala neurri sozial eske: Errepublikari gerra deklaratu diote» –ohartarazi zuen txakur buruargi batek, segada gertatu berrien karietara. Lurraldea bere polizia-okupaziotik askatzea helburu duen ofentsiba abian dago jadanik, eta polizia indar horiek beren aurka bildu dituzten erresumin-erreserba agortezinen gainean kontatu dezakete. «Mugimendu sozialak» ere matxinadak hartu ditu pixkanaka, 2005 osoan, ostegun guztiz, CRSei buru egiten ibilitako Renneseko festazaleak

bezala, edota berriki hiriko merkataritza kale-nagusi bat suntsitu duten Bartzelonako *botelloilariak* bezala. CPEren aurkako borrokak molotov koktelen itzulera erregularra ikusi du. Baina puntu honetan, hainbat bazter-auzok txapeldun diraute. Batik bat aspalditik betikotzen ari den teknika honetan: segada. Adibide batera, 2006ko urriaren 13koa, Épinayn: gaueko 11k inguruan, auto batean egindako lapurreta salatu duen abisuari erantzunez, BACeko taldeak auzora bertaratu dira; iristean, taldeetariko bat «bidean trabeska jarritako bi autok blokatuta aurkitu da. Hogeita hamarren bat lagun agertu dira, burdinazko barra eta beste arma batzuk eskutan, polizi autoa harrikatu eta polizien aurka gas negar-eragilea erabiliz». Maila txikiago batean, itxiera orduetan erasotako auzoetako polizia-etxeak gogoratzen zaizkigu: kristal hautsiak, auto erreak.

Azken mugimenduen irabazietako bat da, aurrerantzean, benetako manifestazioa, manifestazio «basatia» dela, hau da, prefekturari deklaratu gabea. *Terrenoaren aukeraketa* gure esku egonik, erne ibiliko gara, 2001ean Genevan *Black Block*a bezala, eremu gorriak saihestuz, zuzeneko konfrontazioei itzuri eginez, polizia gerok paseatuz, eta ez poliziak gu, bereziki polizia sindikalak, bereziki polizia bakezaleak. Orduko hartan ikusi genuen, mila pertsona inguru, irmoki, *carabinie-*

*ri*en autobusei atzera eginarazten, gero su emateko. Garrantzitsuena ez da horrenbeste ongi armatuta egotea, baizik eta iniziatiba edukitzea. Kuraia ez da ezer, norberaren kuraiarekiko konfiantza, berriz, dena da. Iniziatiba edukitzeak horretan laguntzen du.

Alabaina, ondorengoa kontuan hartzera bultzatzen gaitu guztiak: indar aurkariak finkatzen dituen puntua da konfrontazio zuzena, eta horrek denbora irabazi eta aldi berean beste toki batzuetan erasotzea ahalbidetzen digu –baita konfrontazio puntutik gertu bada ere-. Konfrontazio bat saihestu ezinak ez du esan nahi ezin dugunik dibertsio sinple moduan baliatu. Ekintzei berei bainoago, euren koordinazioari jarri behar zaie arreta. Polizia jazarriz zera lortzen dugu, edonon egonik, inon ez dadila eraginkorra izan.

Jazarpen ekintza bakoitzak 1842an enuntziatutako egia hau berpizten du: «Polizia agentearen bizitza penagarria da; bere tokia gizartearen baitan, krimena beste mespretxatua. (...) Lotsak eta ahalkeizunak setiatzen dute alde guztietatik, gizarteak bere barrenetik kanporatzen du, paria baten gisan isolatzen du, aurpegira tu egiten dio bere mesprezua soldatarekin batean, bihotz-zimikorik gabe, dolurik gabe, errukirik gabe (...) patrikan daraman polizia-txartela ignominia ziurtagiri bat da». 2006ko azaroaren 21ean, Parisen

manifestatzen ziren su-hiltzaileek mailukadaka eraso zituzten CRSak, eta hamabost zauritu. Eta hori, hain zuzen, gogorarazteko «laguntza bokazioa edukitzea» ez dela inoiz polizian sartzeko baleko aitzakia izango.

## Armak eskutan egon.
## Dena egin haien erabilera beharrik gabekoa bilakatzeko. Armadaren aurrean, garaipena politikoa da.

Ez dago matxinada baketsurik. Armak beharrezkoak dira: kontua, euren erabilera ez-beharrik gabekoa bilakatzearren ahal guztiak egitean datza. Borroka armatura pasatzea bainoago, arma-hartze bat da matxinada, «egote armatu» bat. Beharrezkoa da armamentuaren eta armen erabileraren arteko desberdintasuna egitea. Konstante iraultzaile bat dira armak, nahiz eta beren erabilera urri samarra izan, edo ez oso erabakigarria, iraulketa une handietan: 1792ko abuztuaren 10[22], 1871ko martxoaren 18[23], 1917ko urria. Boterea errekan dagoenean, oinkatzea nahikoa da.

---

22. Iraultza frantsesaren egun nagusia, paristarrek Tuileries-eko jauregia hartu, eta monarkiari amaiera eman zioten.

23 Parisko Komunaren sorrera.

Haiengandik bereizten gaituen distantzia horretan, liluraren eta higuinaren arteko halako izaera bikoitza hartu dute armek. Maneiatuz baino ez dezakegu hori gainditu. Zinezko bakezaletasunak ezin du armen ukoa izan, baizik eta beren erabilerarena. Tiro egiteko ahalmenik izan gabe, bakezalea izatea ezintasun baten teorizazioa besterik ez da. *Apriori*ko bakezaletasun hori desarmatze prebentibo moduko bati dagokio, polizia operazio hutsa da. Egiazki, bakezaletasunaren auzia tiro egiteko gaitasuna duenarentzat baino ez da serio planteatzen. Eta kasu horretan, bakezaletasuna ahalmen seinalea izango da, zeren indar posizio batek soilik libra gaitzake tiro egitearen beharretik.

Ikuspegi estrategiko batetik, zeharkako ekintzak, ekintza asimetrikoak dirudi errentagarriena, garai honi hobekien egokitzen zaiona: ez diogu okupazio armada bati aurrez aurre erasotzen. Era berean, ofentsibarako aukerarik gabe ez atzera ez aurrera hondoratuko litzatekeen irakiar tankerako kale-gerrilla baten perspektiba desiragarri bainoago, beldurgarria da. Guda zibilaren *militarizazioa* matxinadaren porrota da. Ederki asko irabazi dezakete Gorriek 1921ean, ordurako Errusiako Iraultza galduta dago.

Bi eratako estatu-erreakzio aurreikusi daitezke. Etsaitasun argiarena bata, maltzurragoa bestea, demokratikoa. Lehena itzulingururik gabeko

deuseztapenean datza, bigarrena, aldiz, etsaitasun sotil baina gupidagabe batean: bereganatu baino ez gaitu nahi. Diktadurak porrotera eraman gaitzakeen moduan, *soilik* diktadurari aurre egitera mugaturik egotearen porrotean erori gaitezke. Porrota, gerra bat galtzean bezainbeste datza burutu beharreko gerraren *hautua* galtzean. Bi aukerak aldi berean ematea ere badago, 1936ko Espainiak erakusten duen bezala: faxismoak, errepublikak, bi-biek eraman zituzten iraultzaileak porrotera.

Gauzak serio jarri orduko, armadak okupatzen du terrenoa. Armada akzioan sartzea, baina, ez da horren begi-bistakoa. Estatuak sarraski bat egiteko prest egotea suposatuko luke, eta horrek mehatxu gisa baino ez dauka gaurkotasunik, pixka bat, iragan mende erdi honetan, arma nuklearraren erabilera bezala. Egia da, hala ere, estatua piztia arriskutsua dela, aspalditik zauritua. Egia da, baita ere, armada baten aurrean jendetza handia behar dela, jende asko lerroak inbaditzen, eta elkarren artean senidetzen. 1871ko martxoaren 18 bat behar da. Armada kaleetan, matxinada egoera bat da. Armada ekintzan sartuta denean, irtenbidea gertu dago. Norbera alde batera edo bestera egitera behartuta dago, anarkiaren eta anarkiaren beldurraren artean hautatzera. Indar politiko den heinean nagusitzen da matxinada. Politikoki, ez da ezinezko armada bat garaitzea.

## Autoritateak lokalki kargugabetu.

Matxinada baterako, atzeraezin bilakatzea da kontua. Atzeraezintasuna eskuratzeko ez da nahikoa autoritateak, jabetzak eta hegemoniak garaitzea, horiekin batera, hurrenez hurren, autoritate beharra, jabetzaren gustua, eta hegemonia desirak ere garaitu behar dira. Horrexegatik, matxinada prozesuak bere baitan darama bere garaipenaren forma, edo bere porrotarena. Atzeraezintasunari dagokionez, suntsipena ez da sekula nahikoa izan. Moduetan dago dena. Suntsipen modu batzuek suntsitutakoaren itzulera dakarte halabeharrez. Ordena baten hilotzarekin amorratzen denak, segurtatua dauka mendeku bokazioa piztea. Horrela bada, ekonomia blokatzen denean, edo polizia neutralizatzen denean, hots, autoritateen iraulketan, garrantzitsua da tragedia gehiegirik ez eranstea: lotsagabekeria eta trufazko mespretxu zainduekin kargugabetu behar dira.

Boterearen deszentralizazioari, garaiotan, zentralitate iraultzaileen amaierak erantzuten dio. Badago oraindik Neguko Jauregirik, matxinoen erasoen jomugan baino gehiago, turisten erasoen zain. Paris, edo Erroma, edo Buenos Aires hartu genitzake, egun, *erabakia* irabazi ez badugu ere.

Rungis[24] hartzeak Eliseoa hartzeak baino eragin handiagoa luke dudarik gabe. Boterea ez da dagoeneko munduko puntu batean kontzentratzen, mundua bera da, bere fluxu eta bere etorbideak, bere gizaki eta bere arauak, bere kode eta bere teknologiak. Metropoliaren antolakuntza bera da boterea. Merkantziaren munduaren osotasun akasgabea da, bere puntu bakoitzean. Horrela bada, lokalki desegiten duenak talka-uhin planetarioa eragiten du, bere sareen bidez. Clichy-sous-Boisko erasogileek etxe amerikar bat baino gehiago poztu zuten, Oaxacako matxinoek Parisen bihotzean konplizeak aurkitzen zituzten bitartean. Frantziarentzat, botere zentralitatea galtzeak Parisko zentralitate iraultzailea galtzea esan nahi du. 1995eko greben ondorengo mugimendu guztiek egiaztatzen dute honokoa. Konplot ausartenak, sendoenak ez dira jadanik Parisen ematen. Azkenean, razzia jomuga gisa, harrapaketa eta xehatzerako terreno soil gisa baino ez da nabarmentzen Paris jadanik. Beste nonbaitetik etorritako sarraldi labur eta basatiak dira fluxu metropolitarren dentsitate-puntu gorenari eraso egiten diotenak. Amorrazioaren hondakinek zeharkatzen dute itxurazko oparotasun desertu hau, berehala desagertzeko gero. Hiri-

24. Paris inguruko herria, produktuen salmenta eta banaketa zentro handi bat dago bertan.

buruak osatzen duen botere konkrezio izugarria desagertuko den eguna heltzear dago, baina toki guztietan Parisen baino aurreratuago egongo den prozesu baten buruan izango da.

## Botere guztia komunentzat!

*Metroan, bidaiarien keinuak eragozten dituen ohiko estura pantailaren arrastorik ez dago. Ezezagunek elkarri hitz egiten diote, abordatu ordez. Kale kantoian taldetxo bat, isileko bileran. Bulebarretan, serioski solastatzen diren elkarretaratze handiagoak. Erasoak hiri batetik bestera, egun batetik bestera hedatzen dira. Beste kaserna bat arpilatu dute, eta ondoren erre. Etxe batetik botatako biztanleek udaletxearekin negoziatzeari utzi diote: bertan bizi dira. Buruargitasun une batean, manager batek zenbait lankide kalitu berri ditu bileraren erdian. Polizien, jendarmeen eta kartzela administrazioko enplegatuen helbide pertsonalak gordetzen zituzten artxibategiak desagertu berri dira, aurrekaririk gabeko presako lekualdatze mordo bat eraginez. Ekoizpen soberakinak herriko denda-taberna ohira eramaten dira, eta norberak falta dituenak hartu. Eztabaidatzeko ere elkartzen dira bertan, egoera orokorraz, edota tailer mekanikorako beharrezko materialaz. Irratiak*

*gobernu-indarren atzera egiteen berri ematen die matxinoei. Misil batek Clairvauxeko kartzelako harresiak lehertu berri ditu. Ezin esan «gertaerak» hasiz geroztik hilabete bat ala urteak igaro diren. Lehen ministroak bakar-bakarrik egotearen itxura dauka, bere lasaitasunerako deietan.*

## AURKIBIDEA

Liburu hau,
HELDU DEN MATXINADA
2011ko urriko egun bero eta gorri batean
izarren ekaitz perfektua hasi baino lehentxeago
amaitu zuten diseinatzen, konposatzen eta maketatzen
Bilboko MONTI DISEINU GRAFIKOA atelierrean
eta horretarako Chris Burkek 1990ean
digitalki sortutako CELESTE familia tipografikoa erabili zuten.



